# ONSA HILCECO BIDIA

## IVAN DE TARTAS

ARVECO ERRETORAC EVSCARAZ EGVINA

*Orthecen....1666.*

---

Seconde édition de ce livre basque de J. DE TARTAS, curé d'Aroue, suivie de notes biographiques, grammaticales, lexicologiques, etc., par M. J.-B. Darricarrère.

---

(Extrait de la *Revue internationale des Études Basques*.)



PARIS
HONORÉ CHAMPION, ÉDITEUR
5, QUAI MALAQUAIS (6e)

1911

# ONSA HILCECO BIDIA,

IṼAN DE TARTAS ARVECO
ERRETORAC EVSCARAZ EGVINA.

MONEINECO IAVN MARQVIZARI
DEDIKATIA.

Notam fac mihi viam in qua ambulem.
. Psal. 142.




ORTHECEN IACQVES ROVYER, Erregu-
eren Imprimaçalia baitan, Biarnon, 1666.

[1] # GOMENDIOSCO LETTRA

Barcoiçé, Domicigné, Lohitçuné, Mitrigna, Amenduçe, Ispoura, Larçeualé, Sarhia, Caldia, Carressa, Hauta-arriua, Peyra, Gayrossa, Arbuzé, eta Moneigneco Iaun Marquizari.

NEVRE Iaun Maytia, eta ohoratia, bi soldado pobré heldu dira aroetic bartcoitçera, çuré iaureguy ederrian, çuré iccustera çuré visitatçera, eta beré çerbutçu humilen, çuri ohoroscatçera. Bi soldadoac dira, bi ayta semé, ny nuçu ayta, eta librutobat eguin baitut, onsa hilçeco bidiaz, hura duçu ené semé haur çurtça, ama gabé altaganic sorthia.

Cu Iauna baitçira oró hon, eta generoz, içanen çira hementic harat, ené semé haur çurtçaren aita, eta ama bietaric, eta harc çuri, nor bada, deus valio badu, beré aitaren, eta beré çerbutçiac rendatuco drautçu leccu orotan hambat fidelqui, non hari beha baçité, eçarrico baitu çure arima, çuré etsay visiblé, éta inuisible ororen despit, ceruco gloria eetrnalian.

[2] Cuberoac, Biarnoc, Bassanauarrec, Lapurdic, Françia oroc aithortçendu, çu iaun handibat, Baroin handibat, Marquis handibat çirela, çuré içena, çuré aippamena orotan ohoratuda, orotan onqui gin da baina ené soldadoac plaçer baduçu iarraiqui harén hatçari, haren herechari, eguinen çitu erregué çelian, eguinen çitu etçiren, beno iaun handiago, eta emanē coroabat aingutriena beçain ederric.

Ené soldadoa ezta oraino batheyatu, haren vgazaita behar duçu içain plaçer baduçu, ohore hori çuc eguiten badroçu, çuré içenaren, çuré

armen pian, norén beldur içanenda? harén contré, norc çer erranendu? norc çer eguinendu? ibilicoda buria gora euscal herri orotan, çuc solamenté eguin badiçoçu so hambat, eta beguitarte hō, herri mundu guçietan çuré amorecatic honqui gin içanenda.

Ené soldado deuotac badu berequin laur compagnia, edo laur reguimendu, baina ezta oraino generalic, çu Iauna içanen çira haren armadaren generala, eta manaçalia çuré pian eguinendu ené soldadoac behar dena oro, Ifernuco portaliac çerratuco dira, iferniaren despit, eta paradusocoac çabalduco çuri, hari, mundu orori, haren ondoan Ioanen diren guçier.

Alexandré, Cesar, eta bertçé antiquitatian içan diren Capitain handiac, etçiren hain bertçé ohoratu, maytatu, beré demboran, nola çu içanen baitçira glorios, eta triomphant, bai çelian, bai lurrian, soldado haur çuré baduçu bér, eta haren armada, deuota nic esperança dudan beçala, onsa gouernatçen baduçu ber.

Curé etchiac, çuré familiac dicha, fortuna honadu egundanoz gueroz, [3]
ezta oraino hil Tristant de Moneing Guyenaco Gobernadoré, eta Lotenent General handy harén memoria, istorian agueridira, harc resumari rendatu çutian çerbutçu handiac, Henryiçen hartaco bi garrenarén demboran, istoria minço denian gobernadoré handi, harcatz, dio, TRISTANT DE MONEINS, SAGE ET VAILLANT CHEVALIER; ezta içan iagoyti nehor eré hambat regretatu, eta deithoratu françian, nola iaun handy hura, erreguec ençunic harē hil çiarén berri tristia, igorri çian beré hala, Anna de Montmorency Frāçiaco Connestablia, eta Duc d'Aumale, bata lu idorrez, berçia itxassoz Bordelera, hoguy mila guiconequi, eta han mendecatu, punitu gobernadoré handy harén hilçia hambat rigorosqui, non ezpaita moyenic lettra hontan eçar ahal decadan punitioné iusto haren handitassuna. Nahidianac iracurtu historia, edirenendu arresta haren hilçalen contré emana, eta icossicodu iaun handy harén valioa, meritia, eta erreguec, harén hilçiaz, hartu çian regreta, eta desplaçera.

Ezta hil oraino Valentin de Domesaing, de Moneins, Iaun handy, Capitain çuhur, coraios harén memoria actioné ederric, eta sainduric eguindu harc eré, Charles Françiaco erregué içen hartaco bederatçu garrenaren pian, eliça saindiaren, beré resumaren beré erreguiaren, bere herriarē aldé eta fauoretan, eresiaren, eta huguenauten contré.

Gueroz eta lehen içanda çuré familian personage handiric, Françian, Italietan, Biarnoan, euscal herrian, Moneineco içena gora eraman dianic. Historia iracurtu nahidianac, edirenendu guehiago laudario [4]
çuré etché ohoratiaren antiquitatiaz, eçiez nic ezpainiro erran, neuré iaun ohoratia lettra hontan.

Ezta hil, Tristand d'Vrtubie, eta Clemant de Moneins, çuré aita, eta aita handien memoria batac eta bertçiac, norc beré demboretan, beré

erreguen, beré resumaren, beré herriaren, ohoriagatic, beré honnetaric parté honbat volontario beçala, emplegatu dutiela, norc eztaqui? Çuré personan, Iauna çuré aiçinecoen ohoria, vertutia, coragia, eta içena biçida, eta Iincoac emayten badrauçu biçitçé luçé çuré meritiac, consideratu, diren eta ené othoyçiac exauditu, esperança diçut çuré familiaren armac, emendaturen dutuçela Françiaco Mareschal baten maquilaz, arté hartan, Iauna, gomendatçen drauçut ené libriarén laur regimendiac, goberna itçatçut beharden beçala eeguinan behin çuré cabinetian sarturic eguieçu beguitarté, eta so hombat, edirenenduçu han çuré arimac, behardiana oro, onsa hilçeco, bidé hona; horida çeruco resuma handiarén ardiasteco, remenio handia hara helçeco espiritu saindiac argui deçan eta illumina çuré spiritua, badut hain bertçé borondaté eta passioné, nola nahibenitz içan hobiala drano, inclinationé, eta respectu ororequin.

*Çuré çerbutçary humblia, eta obedienta,*
*IVAN DE TARTAS, Arueco Retora.*

*Eguinda Aruen*
*Auerduaren.*

[5] # IRACCVRTCALIARI.

NEVRE, adesquidia, igarén vdan egun batez nangoela çuhainçé batén itçalbian neuré orenen errayten ninçala, loac harturic, eguindut neuré loan ametz handibat eta misteriosbat, iduritçen çautan neuré ametsian, iccusten niala guiçon eta einazté tropelabat goiti çelurat igaiten, eta bertçé tropelabat oraino handiagoric beheiti ifernurat ioaiten eta eroten, gendé hec consideraturic batçiac gora, bertçiac behera ioaiten çirela, oihu eguindut, eta heiagora orori, çer çen causa, edo çergatic, baitçiac goiti bertçiac beheiti ioaiten çiren: bere hala heldu da, botzbat çelutic eta emandu errapostu botçac ené oihia, eta heihagora ençunic, gēde hetaric partebat goiti çelurat ioaiten çela çeren beré herioaz, eta bere hilçiaz mundu hontan ordu honetz orhituric, eta herioac beccatu mortalic bateré gaberic, gratiazco estatian atrapaturic, lurretic partitçen baitçiren; eta berçé parté guehiena beheiti ifernurat ioaitē çirela, çeren beré herioaz, eta beré hilçiaz asqui ordu honéz orhitu faltaz, gratiazco estatutic campoan, herioac beccatu mortaléz betheric atrapa-
[6] turic, lurretic partitçen baitçiren hargatic çirela galdu, eta damnatu.

Loac eta ametsac, eta ametsaren errapostiac içituric, eta lotsaturic, iratçartu ninçā, eta hartu lumá escúra euscaldunen fauoretan euscaraz porogatçeco, onsa hilçeco bidia dela, herioaz, eta hilçiaz ardura orhitçia, eta salbatçeco eztela bidé hoberic mundian. Edirenen duçu laur capitulu ené liburian, lehenian porogatçendut paganoen erranaz, bi garrenian,

legué çaharreco escritura saindiaz. ; Hirur garrenian legué berriaz, eta eliçaco doctor saindiéz, laur garrenian laur arraçoin differentéz, onsa hilçeco bidia dela herrioaz, eta hilçiaz orhitçia.

Ené triuaillu appurrac eztu meritatçen çuc phena hardeça çun haren *Irraccurçetco,* baina çure salbamendiaren amorioac, eta desirac, eman derauté coraie, haren camporat idoquiteco, eta hari arguiaren emaiteco.

Ené euscara, eta lengagia eztaquit aprobatia içanen denéz, bai, ala ez, badu orotaric çerbait, çuberoac, Bassanauarrec, eta lapurdic emandrauco çerbait, baina ez oro ; aruen eguindut neuré pieça pobria, hanco lengagia ezpada asqui eder, hanco euscarac, du oguena, eta ez euscal dunac.

---

# ONSA HILCECO BIDIA

---

Deus honic ené libriā ediren badeçaçu, ohoria, eta laudarioa emaçu Iincoari, eta ez niri, ezta niganic heldu hontarçuna, baina bai, Iincoaganic, *omne datum optimum, & omne donum perfectum de sursum est, descendens à patre luminum.* Iacob. I.

Ezpada deus honic, erraçu libriaren, eguiliac baçiala borondatia onsa eguiteco, eta lanaren mensa, eta falta, reparatçen eta desençusatçen diala, languiliaren, intentioné, eta borondaté honac, *voluntas dantis reparauit paruitatem dati.*

Ohoratçen baduçu çuré approbationiaz ené pieça mendria, eta eguiten [7]
çure arimaren profeitia, haren *Iraccurtçian,* norc çer pagu, eta recompensu handiagoric nahidu mundian ; Iincoari othoy eguinendut biçi niçan egunetan çuré hilçiaz lurrian orhituric, sainduqui biçiric, eta sainduqui hilic, mundu hontaric landan, çeluco resuma eternala eman diçaçun. Amen.

GVC pian signatu guir én Theologinec, fedé eguiten dugu Iuan de Sansons Oloronaco guré iaun Apescupu Reuerendissimo eta Illustrissimouarén manus irracurtu dugula libru haur çoin baita titulatu honsa hilçeco bidia, Iuan de Tartas Arueco Iaun eretorac composatia,

çoinetan ezpaitugu deus eriden fediaren contré, baina bay lehenago iugeatu profeitablé içanen dela imprima badadi, eguinda atarratçen auentian hamar guerrenian vrthé contatçen denaren 1657.

A. DE CONGET, *Atarraçeco Erretor, eta çuberroa herrico Vic. Generala, eta Officiala.*

B. IAVREGVIBERRY *Idauzeco, eta mendico Erretora.*

---

[8] GVC beherian firmatiac iccussy dugu, eta iraccurtu liburubat çein minço baita, eta eracusten baitu euscaraz onsa hilçeco bidia, Iuan de Tartas Arueco Iaun eretorac eguina : çeinetan eztugu erideiten fedé Catholica, Apostolica Romanuaren cōtraco gauçaric, bana bai gauça proboxosic bat bederaren ieincoarén beldur saindian bici araçiteco, eguin bidera eracarteco, hartan bada, han exequiteco, eta arimaren salba mendiaz orhitaraçiteco. Horregatic iugeatçendugu merechi diala arguira ialgui : Vtziaten eguinda abenduaren sei garrenian, mila, seietan ehun, berroguei eta hemeretçi garrén vrthian.

D. IRVMBERRY, *Vtziateco Prioria, eta Aquiçeco Vic. Generala, eta Officiala Bassanauarren,*

Ce 6 Decembre 1659.

---

[9] ICussiric ongui hilceco bidiaz minçoden liburubat IOANNES DE TARTAS Aroüeco Iaun Errectorac euscaraz eguina, Eztugu deusic caussitu fedearen contraco denic : aitcitican dugu iuiatu bidé hombat beçala dela Christinoaren vertutean auançaeraciteco, baita ongui hilçeco disposatçeco : hartaracotz mereçidu lehen bäi lehen imprimadadin ; Eguia honetan emandugu guré signadura orçaiçen vztaillaren lehenian 1665.

IOANNES Bajonaco Apespicua.

---

EVscal herriac Tartas 10]
Lauda doctor handia
Euscaldun oroc harçaz
Dugu libru hautia
Sainduqui biçitceco
Harc doctrina saindia
Celurat ioayteco
Emaytendu bidia.

Iuan de Baguarie Camblonque,
eta Susmioco Retora.

---

# ONSA HILCECO BIDIA [11]

## Cap. I

*Notam fac mihi viam in qua ambulem.* Psal. 142.

SOLINVS erromeco istorian obatec dio bere libruan bertçe ordus
erramen bertçé gauça ederren artian bi templa, edo bi eliça, cirela
çointaric bata baitçen templum virtalis, bertatiaren templia eta
bertçia templum honoris, ohoriaren templia, bi templa honrac ma-
nera eta, guisa hartan çiren fondatiac eta bastitiac non impossiblé
baiçen ohoriaren templian nehoursse sar ladin, ezpaladi behiri
sar, eta iragan bertatiaren templatic. Erran nahi çian autor harc, etçela
iagoiti içan eguiazco ohoré solidoric, bertutiaren moyenez; espaliz
ardiatsi, irabaçy, eta aquisitu, eta ohorez bethé, eta aberatz hilteçeoz,
behardiala, nehorc biçi mundu huntan, aberatz bertatez, eta bertatia
posseditu triuaillez, doloréz, penaz eta tormentuz. Ezta ez iaquitia,
doctrina acquisitçen, bonatheran aurherquerian, ohé hounian eztiqui, [12]
eta plaçenqui lo eguinic, pausatçian bena aquisitcenda triuaillu handiz,

beillaz, esquier thu eguinez, eta gauaz cādelaren vrrina bestiac lo dançala, hurrupatçez, dio poetabatec ederqui.

*Non iacet in molli veneranda scientia lecto*
*Ipsa sed assiduo parta labore venit.*

Ezta halaber hiltçe honic, ezpada, biçitçe honic, onsa hil nahidenae, behardu onsa biçi.

Bekhatoria eta bekhatoressa çier minço niz, neuré buruari, eta mundu orori, euscaraz eguin dudan liburuto hontan, eta diot bi templa hetçaz, endelgatçen dela guré biçia, eta guré hilçia, sartçian biçian hantic ialquitian, hilçen guira, batetic ialquitia, da, bertçian sartçia biçi guirela, hilçen guira, eta hilçen guirela biçiguira nolaco baita goure biçia, halaco da gouré herioa, gaixto bada biçitcea, gaixto daté herioa, hounbada biçitcea hondaté herioa, eta gouré jaincoaren çonbait miracuillu handiz campoan, gaixqui bicitçen denac Iaincoarē eta eliça saindiaren manu saindien contré, halacoac, eta alacoec, beharduté fingaitz eguin, peritu, eta damnatu, hala nola Iaincoaren, & haren eliça saindiarē maniac beguiraturic hilçē denac, eta hiltçē direnec beharbaituté finhoun eguin, Iaincoa icoussi, eta haren gloria eternalian saluatu, erran dian, beçala, sā Augustinec, *vix potest bene mori qui male vixerit, & vix potest male mori qui bene vixerit.* Nequéz onsa hilçen ahal da, gaixqui biçi içan dena, eta nequéz gaixqui hilcenda onsa biçi içan dena.

Ené adisquidia saluatu nahy baçira, othoy beha çaquiçat, eçarrico
[13] çitut bidé honbatean eta bidé harc guidatuco çitu chuchen, eta segurqui paradussiaren erdiala, bidia da chuchen, segur, houn, asqui aisa, eta ez hanbat gaitz eta ez hanbat khechu eré Iarrayqui çité, eta segui eçaçu ené lumaren herecha, eta hatça, çoaça aytçina, aldebaterat, ez bertcerat, ezquer, ez esquin makurthu gabé, eta edirenen duçu bidé harén burian hilçé hōbat, eta haren ondouan Iencobat çuré ayduru coroabat esquian, çuré recompēsatçeco proméz emayten drauçut aingurië eta guiçonen aitçinian, Ienco aren parthéz, eta ené ohoriaren gaignian ené errana eguia frogatuco duçula, éta ezpada hala, érraçu mundu orory, affrōturbat niçala guiça gaixtobat niçala, aphéz gaixtobat niçala eta ené libruto honec, eta nic merechy dugula suhandibatetan biçiric erra guitian.

Sobera egon enadin çury erran gabé, çerden ené bidia, ene secretu handy hori, eta ené gogoa pundu handy, eta important hontan, saluationesco eguitecoan, eta halaber enuya eçitian, iaquin eçaçu, saluatçeco bidia dela ardura hilçiaz orhitçia, herioaren beré beguien aytcinian eta bihotçaren erdian iossiric, eta ezquiribaturic eduquitia.

Saluatu nahidenac, behardu onsa hil, onsa, hil nahidenac, behardu

onsa biçy, onsa biçi nahi denac, eztu behar bekhaturic eguin, bekhaturic ez eguitecotz ardura behardu herioaz, eta beré hilçiaz orhitu.

Hilçiaz orhitçia dela eguiazco bidia saluatçeco, ahal beçain labursqui, eta clarqui nahidut frogatu laur guisaz, eta laur moldez, eta laurac oro esperança dut arcordu honbatetan içanen direla ené pensamendiaren [14] mundu guçier explicatçeco, eta ené intentioné hounarē euscalduner, particularqui çuberouaco herrian ené adesquider, endelgaraçiteco, çombat handiden ené desircundia, eta borondatia, ororen hilçé honaren, eta haren ondouan, ororen saluamendiaren icousteco.

Lehen guidamendia, eta lehen escola emanenduté bidé hontan, paganoec, antiquitatian biçi içan diren, gendé prestuec.

Segonta emanendu escritura saindiac, hanbat legué çaharrian, noula berrian, iracourtçen dirén passagé sacratiec.

Herena emanenduté, doctor saindiec alegatçen dutien authoritaté saindiec.

Laur guarrena emanendu araçoignac, hortic, hebetic, pundu hontara, iustoqui eta apropos hedatçen, eta iuntatçen ahal denac.

Ené adesquidia, bekhatoria, etçitiala othoy offensa, ezteçaçula othoy, aldé gaitzçera har, eneganic eta ené lumaganic ezpalin baduçu ereçebitçē balacuric, edo lausencuric, laur pundu hoyec acaua artiā, eztiroçu entçun bertçé, içenic, bekhatoria, eta adesquidia, baiçy, eguin eçaçu possiblé bada çuré profeytia libru hontan icoussiren, edo entçunen duçun conseillu hounez. sarcité bidé hontan lehen, beno lehen, eta çuré vrhatxetan etcitiala enuya, bidiaren bazterra, azquen termaguia, eta chedia icousartian.

Philippus, Macedoniaco erregué handi harc, egunbatez victoria handibat irabaçy çian, athenasaco hiriaren contré, çoin baitçen greçiaco eresumaren hiry capitala charona deytatten çen hiriaren ayçinian, eta [15] gueroz hantic harat, princé çuhur harc, beldurrez, vrguillia, vanitatia, eta superbia haren espirituaren, eta harén hunaren guehyen guerta litian, mundian çen goiz oroz argui puntan iguzquiaren ialquitiari, eracarten çian beré pagetaric bat beré ohiaren aitçinera eta pagé harc bere salutationian lehen hitçac erraiten çutian erregueri, erreguéren manuz, guisa hontan, *O rex memento quod homo es, & mortalis es.*

Phodiginus lib. 19. cap. 33. lectionum antiquarum.

Erregué, iratçart-çité, eta orhit çité, guiçon çirela, mortal çirela, hil beharduçula.

Bekhatoria non cira pagano harc etçian legueric, federic, euangelioric, ez iencoric ala beina egunian behin nahiçian ençun hil beharçiala.

Cuc aldiz hayetaric orotaric baituçu eta eliça saindian biçi baitçira beldurnuçu sorthuz gueroz hil artian, beharden moldian, eta forman behin eré çuré herioaz, eta hilçiaz, orhitu faltaz, miserablequi biçi baitçira eta çuré çecuria carreyatçen, çuré orena gin dadinian, desoho-

rez, eta confusionez betheric, miserablequiago hil citian eta damna.
Alexandré handiac Philippus haren semé digniac, lausencu, flateria,
eta balacu handiric erreceuitçen çian beré demboran, bere gorteco
courtisan, eta charlatanen ahouetaric, eta hayen escriuietaric, oroc
errayten çioten ichilic, eta aguerriz, immortal çela Ienco handien
arraçatic, eta odoletic, hayen saheix eçurretic ialquiten çela, eta
Iupiter bait çen Ienco ororen guehiena, haren semé propia, eta naturala
çela hambatoqui herioua baitçen bertçé guiçon ororen guehien, eta
[16] Iaun, bere armac haren contré, galtçen çutiala, houra çela guiçonen
erreguia, eta herioaren nabussia eta Iauna.

Bena egunbatéz hiribaten escaladaz hartçeco, armadaren burian,
Plutar. in vita Alexandri. murraillian gora igayten cela icoussiric matraz oucaldiz çaurturic, eta
colpaturic, odola vherraz eta churrutaz beré gorputzetic çouela, oihu,
eta heyagora handibat eguin çian beré courtisanen contré, guisa hontan,
*Omnes me filium iouis esse prædicabant, sed hoc vulnus me hominem esse
clamat.*

A! traidoré falsiac, eta trompurrac, oroc çinéz eta goraqui cantatçen
çunien ny immortal ninçala, eta Iupiter Ienco handiaren semia ninçala,
bena ené gorpitzeco çaury honec eta colpu honec, çien erranaren contria
dio, eta eracoustendu garbiqui mundu ororen aitcinian, ni eré bertçé
guiçonac beçala, mortal niçala, miserablé, eta heriouaren suiet.

Bekhatoria, princé pagano gaztebaten, çouignec aguian ezpaitu
ouquen, ez lehen, ez gueroz, beré coragian laguniç, ez pareric, erranaz,
eta aitormenaz, eguineçaçu çuré probechua aguian edo mundiac, hara-
guiac, deabriac, aberaztarçunec, eta çuré voluptaté saxuec itxuturic,
inganaturic, eta trompaturic, eztuçu nahi sinhetxi badela hilçeric eta
herioric, edo sinhetziric eré badela, iduritera emaytenduçu çuré obra
gaixtoez eztuçula sinhestē badela, bena ezteçaçu dudaric har baduca
eta behin beharduçu hil, eta hilez gueroz, orhitçite badela mundu
hontaric landan, bertçé mundubat, çouintā seculacotz, edo paradu-
sian Iencoarequin, çuré arimac behar baitu huros içan eta plaçer hartu,
[17] edo infernian seulacotz demonio ororen compagnian, damnatu, erré,
eta higatu educaçu hori gogoan, eta herioac bekhatian etçitean surpreni,
hartçaz, ardura, disgraçian bereré, incontru gaytçetan, malhurretan,
eta aduersitatetan bereré orhoitçitéz, onsa haren moyenez biçitçeco,
eta onsa biçiric, onsa hiltçeco.

Cardanus in Dialoguo mortis. Aristotesec hiltçian, historiac dio, regret eta doloré handirequin
discurs eta propos labur, on, eta eder haur eduqui çiala beré ades-
quider.

*Fœde in hunc mundum intraui, anxius vixi, perturbatus egredior, quo
vadã nescio, ens entium miserere mei.*

Theihu, eta saxu mundu huntara gin niz dudatan biçi içaniz, oro

khechu eta nahassi ialquitē niz, norat noan estaquit, içaté ororen içatia, pietaté, eta misericordia nitçaz eguiçu.

Bekhatoria behaçité hitz hoyer, igusquiac iagoyti lurriä ikhussi diā guiçonic sauātenac, eta subtillenac erranac ditutçu, philosophiac beré princé eçagutu diçu, antiquitatiac harén esquiribiac admiratu citiçu eta adoratu quasi, oraico demboran guc eré haren espiritu ederraren inuentioné ederrac ohoraturic, nigar eguiten diogu haren azquén fin mal hurré saren deithoratçez eta doluz, çeren behar et çirenac sobera estudiatuz, eta behar çirenac ez asqui pherechatuz, eta contemplatuz naturaren secretiac sobera bessarkhatuz, eta naturarē authora, baita Ienco bakhoitça, eta Ienco biçia, hari asqui amorio, eta adorationé eman faltaz, miserablequi galdu, eta peritu içan baita, Considera eçaçu personagé handy hura beré paganismoan, sortçetic, hil artian, herioaren beldurrac, beré ariman, beré od olian, eta beré heçurretan, harritçē, eta ikharatçen çiala, eta quasi oren oroz, berac hilçian ait-hormen [18]
eta confessioné eguin çian beçala, herioaren Icieriac, eta aprehensioniac, iuiamendia nahassiric, eta cordocaturic, beré sensu onetic campoan eçarten çiala, eta eçarri çiala, eta Aristotesen escolan, çein içan baitçen Alexandré handiaren nabussi eta gobernadoré, ikhasse çaçu lectioné eder haur, herioaren beldurra, hantic ikhasdeçaçun onsa biçitçeco bidia, hura baduçu asqui duçu hura gabé bertçiac oro guti valio, bat mens, oro mens, manqua vno, manqua todo, çioçu Espagnolac, escola hartan lectione on hori, har badeçaçu gogoan, herioa içanenduçu çuré muthil eta çu haren Iaun, eta ez herioac çu, bena çuc herioa, inganatucoduçu, eta trompatuco.

Platon diuinoac, Aristotesen nabusi handiac, çein batere paganoetan saluatçecoz, arau baitu, eztela galdu, hitz bakhoitz batez, guré bidia çombat eder den errandu, eta colpu bakhoitz, aiz cora colpubatez beçala, bidé huntaco naharrac, caparrac, eta ilhorriac trencatu ditu, eta bidetic akhaçatu erran dianian ederqui, eta çuhurqui.

*Summa philosophia, est mortis meditatio.*

Philosophia, prudentia, çuhurtçé ororen guehyena da, herioaren meditationia, herioaren memoria, herioaren beldurra, eta hartçaz orhitçia.

Erran nahi du çuhur harc, bertcé iacquitiac, eta doctrinac oro eder dirala eta on, bena bateré ez hanbat, nola hilçiaz orhitçia, oroc presuna, çeintan erideiten baitira, ornatçen, eta ohoratçen dutiela, bena batec ere eztiala guiçona eta emastia hanbat edermenez, graçiaz, eta bertatez bethatçen nola herioaren miraill batetan beçala bere beguien aitçinian, [19]
eta bihotçarē barnean eduquitiac, ororen beharrena, eta necessarioena

dela herioaren memoriaren fresco eduquitia, mundu guçier, ohorian eta gratian biçitçeco, eta hiltçeco.

Bekhatoria, çuc eta nic asqui ohoré eta auantailla guindikheçu lurriā eta ceruan, çuhur onen conseillu çuhurra bessarkhaturic, guré esperituari, eta guré arimari bertçé hazcurriric, ez bazcaric, ezpaguendeça eman herioaren imaginaren eta figuraren bazca ona eta bazca saindia baicy, onza biçiren denac, eta onsa hillen, behardu çuhur içan, eta çuhurtçiaz amurus eta iagoiti guiçona, ez emastia estira çuhur, eta çuhurtçiaz amurus, ezpaduté herioa gogoan : halatan onsa biçi, eta onsa hil nahidenac, hauta beça eta conserua herio beré bihotçean, herioac herioa bihotcetic idoqui artian.

Bekhatoria pagano çuhur heyen erranac, itçul inguru, gora behera gauaz eta egunaz çuré gogoan erabil içaçu eta passeya, lotzatu ez enuyatu gabé hala eguin badeçaçu herioac çuri eguinenduçu, belçauri, eta çuc hari beguitarté, eta guero çuré azquen orena heldu denian, Iencoac çeruā çuri erranendiçu vngui gin eta eguinen beguitarté.

Ep. 89. Seneca handiac dio ederqui, *moriantur ante te vitia*. Çuré bekhatiac, eta çuré vicioac hil bité çu baino lehen.

Eta bertçé lekhu batetan erraitendu harc berac *ante Senectutem curaui,*
Epist. 6. *vt bene viuerem, in senectute, vt bene morerer.*

Neuré gastetassunian, eguindut neuré eguinahala oro çahartu, eta
[20] vrdintu ninçanian, onsa biçitçen ikhas neçan amorekhatic, eta guero çaharçian onsa hil nandin, eta fin onbat eta hurusbat eguin neçan.

Philosopho sauant harc berac dio oraño berçé lekhubatetan, herioaz, minço delaric :

Epist. 24. *Quotidie morimur, quotidie enim demitur aliqua pars vitæ.*

Egun guçiez hiltçen guira, egun oroz guré biçiaren partebat, Ioaytenda, trenkhatçen, eta laburtçen.

Epist. 13. Senecac oraño continuatçendu, eta erraytén materia hartan berian, *Quid autem est turpius, quam Senex viuere incipiens.* çerda mundian hain desarauic, hain deshonestic, hain estrangeric, eta itxussiric, nola guiçon çaharbat, churituz eta vrdinduz gueroz, akhabatu behardianian, hasten denian biçitçen. Erran nahidu onsa biçitçen.

Malhur eta desastré handia heltçenda guiçonari, eta emaztiari, beré çahartçian edo beré gastetassunian beré azquen orenian, hiltçen denian beré bekhatia, quitatu gabé, bekatiac hura quitatçen dianian harc bekhatia baino lehen, çeren guiçona, eta emaztia hilic eré, bekhatia ezpaita hiltçen biçiric baratçen baita, eta arima gaichoari bertçé mundian guerla eguiten baitio.

Eta nola deabria, eta bekhatia, biac baitira khasi bat, bata ayta, bertçia semia, bata ama, bertçia alaua, bata acia, bertçia bihia, arima gaichoa Iencoaren tribunal handiaren aitçinera presentatçen denian,

aita semé gaixto hec elkharrequin iuntatçen dira arimaren contra eta sathan hastenda ordian guisa huntan Iencoari minçatçen. Ieinco handia, [21]
eta Ienco iustua, justu çiren beçala eguiçu iustitia, misericordiac estu hemen lekhuric, arima hau enia da, norc berea esta sobera, hau esta curea, bekhatiac hau quitatudu, baina hunec ez bekhatia vrguillia hemenda, auaricia, paillardiça, adulterioa incestoa, sacrilegia, arneguiac, hordiqueriac, ohoiñqueriac, gormandiçac, eta bertçé bekhatiac hemen dira, horiec oro dira ené gēdiac, ené soldaduac, ené semiac, ené allauac, horiec dira ené coloreac, ene liureac, halatan arima gaichoac, Iencoa, eta haren parabisua galduric, iffernu barnera behardu Ioan eta seculacotz ioaiten da.

Bertçé aldé fortuna handi bat eta auantaill handi bat ardiasten du guiçonac, eta emastiac, noiz eré aumens hilcian beré bekhatia arnegaturic, eta hari renunçiaturic, beré arima Iencoari, doluz eta cōtritionez betheric errēdatçen baitu, çeren halacoarē bekhatiac oro barkhatçē, eçestatçē, deseguiten, eta hiltçen baitira, *quo ad culpam,* (saltem) culparen respectus bereré, çombateré, *quo ad pœnam,* penarē respectus batçuetā ezpaita barcatçē, eta pana harc, edo mundu huntan, edo purgatorioan behar baitu complitu, eta satisfatu, barkhamendu edo justificationé admirable hori eguitenda bekhatiaz bekhatoriari, eta bekhatoressari eliçan Iesuchristoc ordenatu dutian sacramendien moyenez particularqui penitentiazco sacramendiaren vertutez, ceiñec significatçen baitu, cōteritçen, operatçen eta emayten, gratia iustificanta, arimari, hiltçē, eta cassatçen bekhatia, handic, *obicem non ponentibus sacramenta noua legis, ex diuina institutione conferunt gratiam ex opere operato,* errayten dian beçala, theologiaren maximac, legué [22]
berrico sacramendiac emayten diala Iencoaren gratia haren beraren ordonātçaz, Iesuchristoren odol preciaturē vertutés eta meritus bekhatore orori, hayetan ezpada faltaric, Iencoa bera delaric gratia haren causa lehena etā principala, causa meritorioan Iesu-christo haren semé gugatic guiçon eguiña, causa instrumentala eta morala sacramendiac ministria eliça guiçona, eta halaber sacramendu haren lehen materia eta campoticoa, guré bekhatiac, materia propia, eta naturala, barneticoa penitentaren hirur actac, contritionia, confessionia, eta satisfactionia, forma aldiz, apeça, baita Iencoaren ministria, harc beré ahoaz errayten eta pronunçiatçen dutian hitz sacramentalac.

Ordu hartan arima bat bekhatiarén estatutic jalquiric, sartçen da gratiaren estatiala, deabriarē presundeguietaric deliuraturic, guertatçen Iencoaren alaua, eta estatu hartan arima hura mundu huntaric partitçē deniā, sathanec estu hartan eskhuric ez çuçenie, hiltçē da itxutçē da, gortcē da, mututçen da, estaqui Iencoaren aitçinian arimaren contra çer erran, estu deüs ikhusten, estu deüs entçuten.

Eguia da immortal dela beré naturaz, eçin hilçen dela, eta eternal eré dela beré içatez, *à parte post,* çombat eré ezpaita eternal *à parte ante,* çeren demboran creatu içan baita, baiña hil baliz beno aboro arima gratian partitçen denaren contra Iencoaren aitcinian esta aguertçen, eta aguerturic eré, hilbaliz, beno haboro, estu indarric, ez botereric. Horren arro çoiña clar da, cerē arimabat gratian douenian, haren
[23] bekhatiac deseguiñ dira, hil-dira, itho eta hondatu dira orachian, erraiten gundian beçala, penitentiazco sacramendian, vnçi itkurri eta piscina saccratu haren, çolaric eta ondarric eztian, çolan eta ondarrian.

Halaco guisaz eta moldez noiz, guré bekhatiac liren ordian haiñ gorri, nola eskharlata, eta haiñ beltz nola tindia, haiñ garbi eta churi guertatçen baitira itkurri saindu hartan nola baita churi eta garbi bortuco elhurra, eta ilhe cotoin churia erran dian beçala espiritu sain-
Isai. cap. I. dian, Prophetaren ahotic. *Si fuerint peccata vestra vt coccinum, quasi nix dealbabuntur, & si fuerint rubra, quasi vermiculus velut lana alba erunt.* Eta halatan deabruac ordu hartan estu eskhuric ez çuçenic, bekhaturic esten lekhuan, hambatequi arima hura Iencoaren da, eta desohoria eta confusionia sathanen.

Bekhatoria, desastra handi haren euitatçeco, eta auantaill eder horien posseditçetco Senecaren auisu ona harturic, hil bité çuré bekhatiac ordu onez çu baiño lehen, *Moriantur ante te vitia. Ep. 89* Gasté çireño hascité ordu onez obra onen eguiten çuré çahartçian onsa continuaturic, onsa citian orhit çité itxussi dela çahar artian alfer egoitia, bilhua vrdindus gueros escolara ioaitia, bertçiac oherat doaçenian lo eguitera, anhartian lo egonic lanari lotçia eta trauaillatçen hastia. Orhitçité ené bidian sartçera ordu onez çuré herioaren consideratçera, hala, eguin badeçaçu çeruco, eta lurreco Iencoa çuré aldé içanenduçu, çeruco Ainguerauac çuré Ainguerù ona çuré obra onac, çuré conçientia ona, Ainguerueu eta guiçonen Erreguiña Virgina gloriosa Iesv-Christoren ama, Cerua eta
[24] lurra, oro çuré aldé icanen ditutçu iffernua baiçic oro çuré aldé iarrico ditutçu, hec oro çuré aldé badira, nor içanen da çuré contra.

Naffarroaco historiā Frāçiaco Auocat batéz escriuatuā ediretē, da
Andræas Fauinus in Historia Nauarræ. nola Charles Duc de Bourbō, Princé hādibatec, çerbait hostassun edo ressendimenda beré Prinçé, eta Erregué naturalarē contra harturic, çein deithatçen baitçen François, içen hartaco lehena, armac harén contra harturic, Charles-Quint, Espaiñiaco erregué eta Allemaniaco Imperadorearen aldé, guerla dembora luçez beré Erregueari eta beré Erresumari eguinçiala, hañitz okhasionetā eta cōbatetan, noiz hurus noiz malhurus içanic, nola armac, iocoa beçala, behin bataren guero bertçiaren contra, eta alde baitira, fiñean Pauia deithatçen den Italiaco hiri haren aitçinian, Frañçiaco Erreguia. Batailla generala galduric hartu içan cela Espaňiarat Madrillera eramā çiala etxayac, eta handic

beré bi semiac presoner vtciric, eta guero rançoiña pagaturic, semiac eta beré buria handic libraturic, eta guerlac moyen hartçaz beré fiña oukhenic, azquenian Charles de Bourbō Erromaco hiriaren harçian morroillan gora ezpata escuan igaiten çela, colpez hil içan cela, dio historiac eta haren gorputça cayeta daritçon, Italiaco hirian ehortçi çutela, eta haren thombaren gaiñian epitaphio eder hau lengoaya Italianoz esquiribatu çutela.

Françia mi dio la leché
Espaigna fuerça, y ventura.
Y Roma mé dio la muerte.
Cayeta la sepultura.

Erran nahi baita euscaraz guré lengoagian, [25]

Françiac emandraut eznia,
Espaignac Indar, eta ventura,
Erromac herioa,
Eta Cayetac sepultura.

Bekhatoria, considera eçaçu othoy çer erranen den Cutaz eta nitaz guré ondoan, guré ondocoec erranendutė, non sorthu guiren, nola biçi içan guiren, cer eguindugun, eta nola hil guiren, guré biçian, eta guré hilçian e guinditugun actioniac, edo onac edo gaixtoac, içanen ditutçu guré iugiac, edo ceruan, edo Iffernuan errecompensu, edo punitione emaiteco, edo batera, edo bertcera condēnatçeco; orhoit çaite munduco onetaric, estugula deus eré gurequila eramanen guré obrac baiçy, onac, edo gaixtoac, khanabat, edo bigua lur, athorrabat, eta mihissebat hursbat edo biga, içanen direlà, guré azquen onac, gure possessioneac, eta guré thresorac, handic harat guré gorput ça Ioanen dela, chicharie tripara eta lurthuco, eta herraustuco dela, eta guré arimaren ostatu cerua, edo Iffernua içanen dela eta haren ostatu lagunac edo demonioac, edo Aingueruac içanen direla, gratian parti badadi, Iencoa segur, bekhatian badoa deabrua harençat, infailliblé, educaçu hori gogoan, hiltçiaz orhitçité eta çeruco Iencoa baita çuré Prinçia eta Erregué naturala, eta legitimoa, haren enseignen eta mandera pian çuré armac soldadu onari emanden beçala, carreya itçaçu, haren fauoretan eguiñ çaçu guerla gauaz, eta egunaz, Prinçé trompeur eta falso hari çein baita sathan, hala eguiñ ezpadeçaçu Iaquiñeçaçu oray, eta guero, herioac çuré arima, [26] çuré gorputçetic separatu dian beçain fité, chichariec çuré gorputça lurpian Ianen dutela, eta deabruec çuré arima iffernian.

Paganoén artian Françiaco Prinçé Catholicobat ekharridut astez, neuré ōsa hilçeco bidia akhauatçen nuyan lehen capitulo huntan, eta vstez paganoer ohoré eguin nuyan, Prinçé Françés bat emanic, beré compañian lagun. Baiña oraño ondar huntan, bigua edo hirur besté paganoren erranac hiltçiaz, ditçagun escriua, eta guero goaçen fité

bigarren capituliaren ikhustera, eta iaquitera çer dioten ené bidiaz escritura saindian irakhurtçen diren passagé sacratiec.

Armenia. Macedoniaco Anderé handi batec, mundian çen goiz oroz beré bilhuac, irez ondoan, herhaustatçen çutian, herhautxbatez, çein baitçen hillen heçurretaric eguina, eta hori eguitian çian anderé harc herioaren markhac, seiñaliac, eta haren necessitatia, beré bilhoetan, beré beguien aitçinian, eduqui leçan.

Vlpianus, bertçé Iaun handibatec, beré armentan, eta deuisa orotan eduquitçen çian paon bat, çeignec soguiten baitçian beré hoiner, haren piā hitz hoyec ezquiribaturic, neuré miseria contemplatçen dut.

Archesilaus Medaco Erreguiac, bertçé Coroaric beré buruan etçian nahi eçarri lilis, eta floquez eguinic baiçy, bere buruari representatçeco, lurreco Erresumac, hiltçen, galtçen, eta deseguiten çirela, lilibaten paré, eta nola lilia, eta floca, egunbatez iguzquiac sortçen, eta hiltçen, ikhusten baiçutian hala hala Erresumac eta handitassunac peritçē cirela.

[27] Pelocidaz Erregué handibatec, beré lepoan behera egun oroz, ampollabat ekhartçen çian vrkhaturic beré aitçiñeco Erregué hillaren heçurretaric herrautxez betheric, orhoitçeco hura beçala, lur çela, eta herrautx, eta harc beçala lurthu, eta herrraustu beharçiala.

Bekhatoria, has, eta akhaua eztuzu edirenen bat ené bidian libru huntan, nic içendatu dustadan paganoetan, non eztian hartu, herioaren memoria, onsa hiltçeco, erremedio segura, bidé ona, eta chuchena ; eta bidé hau bera, çuc eta nic ezpadeçagu ordu onez eduqui miserabliac gututçu eta galdiac, çuré eta ené reprochia eta punitionia handiago eta grauiago içanenduçu eçiez pagano hayena, çeren hayec ezpaituté leguerie, ez federic, eta guc bay, halatan siñhetxi behardiagu, guiristiño gaixtoa Iesv Christoren religioniaren contré biçi dena, eta diabru beno sordeich dela paganoa da legueric ez federic eztiana : eta christigno gaixtoac, Iencoaren eta eliça saindiaren manien contré biçidenac estu federic, çeren fedia obra onac gabé fedé hilla da, hala nola, fedia obrac gabé, dio londoné Iakhubé Apostoliac, *Sicut corpus mortuum est sine spiritu, ita fides mortua est sine operibus.*

D. Iacob ep. cap. 2 saluianus Episcop. Massiliensis in li. 3. de vero indicio & prouid. Dei.

Halaber errandu ederqui bertçé doctor handibatec, *Vera fides Christiani est Christi mandata seruare, nomen sine re, & officio suo nihil est.*

Eguiazco christigñoaren fedia da Iesv-Christoren manien beguiratçia, içena, gauça içana gabé, eta beré eguin bidia gabé, ez deusbat da.

Halatan bekhatoría, çu eta ni pagano gututçu Iencoaren contré Ibil-
[28] tçen guireño, eta oraño pagano bano sordeich, çeren daquigularic leguea, eta leguiaren defensa, ezpaitugu beguiratçen, ez bata, ez bertçia eta hartan baitugu erakhusten guré malitia, eta guré bekhatia handiagudela, eta crimenelago hayena beno, dugularic legué ona, eta legué

saindia, guihaur beiquira leguiaren beguiratçale gaixtoac, erran dian beçala aitçineco doctor berac libru berian.

*Kn hoc magis culpabiles sumus, si bonam legem colimus, & mali cultores simus.* Isdem eodem lib.

Mehatçhu hori bera, eguindu guré salbatciliac guri orori, *Qui nescit voluntatem Domini sui, vapulabit paucis, qui autem scit, & non facit eam, vapulabit multis.* Luc 12.

Beré Iaunaren berondatia eztaquianac, gastigu, eta punitione arhiña, eta simplia vkhenendu ; bena daquianac beré Iaunaren borondatia, eta hura ez complitçen, halacoaren gastigua, eta punitionia, handia içanen da, eta graué.

Paganoac estaqui Iaunaren borondatia, eta debetia, eta guc bay ; hambatequi guehiago bekhatu eguiten dugu. Paganoac eztaqui paillardiça bekhatu dela guc bay, çeren leguiac erakhusten beitraucu, *non mechaberis :* eziçala paillard, eta Apostoliac ere dio, *Concupiscentiam nesciebam nisi lex diceret, non concupisces.* Esnaquien concupiscentia cer erran nahi çen, leguiaç ezpalu erran, ezteçala desira iniustoqui. Rom. 7.

Erran ahal dirogu bekhatoriaz, aithortçen, eta eçagutçen diala Iencoa ezpaiñez, eta mihiaz solamenté eta beré obrez vkhatçen diala Apostolu berac dioena : *Confitentur se nosse Deum, factis autem negant* ad Tit. I.

Leguia irakhourtçen dugula, eta ez beguiratçen, *Legimus legem, & non facimus eam.* [29] Rom... ? (illisible)

Eta lekhu bereā apphalago : *Quid gloriaris in lege, per prævaricationem? legis Deum in honoras nomen enim Dei per vos blasphematur inter gentes?*

Traidoria, eta malhurusa, leguiaren haustian çergatic vrguillian eta vanitatian sartçen çira leguiaren Iencoa desohoratçen duçu eta Iencoa ren içena çietçaz gentilen artian blasphematuric guertatçenduçu, minço çen bertçé orduz Apostolia, Christiño gaixtoer, eta egun, çuri eta niri, bekhatoria. Ibidem

Conclusionia eman eçaçu Iencoaren contré bekhatian biçi guireno pagano guirela, eta pagano beno sordeich edo gaixtoago guirela, çeren harc eztaqui çer hariden, eta çuc bay, harc ohoinqueria, debekhu dela, estaqui, guc bay ; harc estaqui heriotçia, bekhatu dela, guc bay ; eta ignorantiac hura baitu desenkhusatçē eta gu iaquitiac condēnatçen.

Haboro diot demonio guirela, eta sordech, obra onac vtçiric, bekhatian biçi guireno.

Demonioac dian malhurric handiena gratia galduric, iffernura eroriz gueroz, da, iossiric, itçaturic, eta obstinaturic baitago beré malician, eta gaixtkherian, halaco moldez non ézpaita possible, diuerti, eta separa ahal dadin beré obiectoaganic, behin hartçaz hautu, eta electione eguiñez gueroz, behin besarkhatu dian gauça, eçin quita baitiro, eta behin quittatu dian gauça eçin bessarkha baitiro, hala dio San Thomas

[30] D. Tho. cf. 64 ar 2. Doctor Angelicoac. *Voluntas Angeli adhæret obiecto immobiliter facta electione, ita ut non possit relinquere quod amplexa est, nec amplecti quod relinquit.*

Psal. 37. Psalmista Royalac eré hori bera erraiten çian : Iauna çuré extayec bethi hastio çutié, eta hayec çuré contra duten maliçia, bethi gora doa, hauda deabruen obstinationearén lehen causa.

*Superbia eorum, qui te oderunt ascendit semper.*

Segond causa da, guré Iencoac hayen conuersioneari beré gratiaz eguiten dian vkhoa, eta erreffus iustua, çérē baita iustu, conformé, eta eman Iencoarén decreto eternalari ; Aingueru gaixtoac, eta arima gaixtoac behin damnatuz gueroz, Iencoac hayer eleçan eman gratiaric, itçulçeco penitentiara, eta conuertituric saluatçeco, hau da segond causa.

Heren causa da çeren iusto baita, eta guré Iencoac iustuqui iuiatu baitu, Ainguerueu faltac eta bekhatiac, elitian barkha ez erremeti, faltetan eta culpan, eroriz gueroz, baiñan liren iagoiticotz irremissible, eta irreparablé hala nola, iustu baita guiçonen faltac, eta bekhatiac

D. Dam de fidæ Orthod cap. 2. elitian barkha, ez remeti, hilez gueroz, hala dio San Damascenec, *Hoc est hominibus mors, quod est Angelis casus, seu lapsus.*

Bekhatien barhamendiaren respectus Ainguerueu faltac, eroriz gueroz, eta guiçonarenac hilez gueroz, orobat dira, bardin dira ; errayten balu beçala hala nola guiçonac hilez guèroz beré bekhatien barkhamenduric ecin baituqué, hala, hala, Ainguerauc eré eroriz gueroz eztuqué barkhamenduric, hau da demonioaren obstinationiaren heren causa.

[31] Halatan segur da, bekhatoria çu eta ni, eta gu beçalacoac bekhatian iossiric eta obstinaturic egoyten guireño, obstinatione haren respectus, deabru, eta demonio guirela hargatic guré Iaunac, çuri eta niri eta gubeçalaco demonio harritu gogorri oyhu, eta heyagora eguiten çian,

Act. 7. *Ierusalem, Ierusalem, quoties volui congregare, & sicut gallina congregat suos pullos, & noluisti ?*

Ierusalem, Ierusalem, eguin ahala çembait aldyz eguindut çuré biltçeco, eta enuçu entçuen etciñen nahi gin, oilloac bere vmeac eta chichac edo chitoac, heguatetara beçala, nic eré çu nigana bildu nahi cintudan, bena ené deiari eta ené boçari gorrarena eguinduçu, guré Iauna berac errayten cian iudu gaixtoey, eta hayen personan guri orori, *Vos spiritus*

Iacob. 2. *sancto semper resistitis,* harritu gogorrac espiritu saindiari guerla, eta resistentia bethiere eguiten duçié.

Hambatequi bekhatian harrituric perseueratçen duguño demonio guira, deabru guira.

Hartan guireño demonioac baiña gaixtoago guira, sordeich guira : sathanec nola beré dōuetaric ezpaitu deuseré galdu Iencoaren gratia baicic badu fedé eta sinhestendu badela Ienco bat, eta oraño badu eré

Iencoaren beldurra, haren icenaren aippatçiaz, eta entçutiaz lekhu orotan lotsatcē da, eta ikharatçen, hala dio Apostolubatec, *Credis quia unos est Deus, bene facis, Dœmones credunt, contremiscunt, & ingemiscunt.* Sinhesten duçubadela Ienco bat, onsa eguitenduçu, demonioec eré baduté sinhesté hori, ikharatçen dira, nigar, eta cincuri hari dira. Halatan, bekhatoria, behaçaçu, deabruac badiçu bi gauça fedia, eta beldurra, çuc eztuçu batbaiçi fedia solamenté estuçu, beldurric çuré 32]
fedia eré fedé hilla duçu hambatequi diabrua baiño sordeich çerela vkha diroçu.

Hargatic spiritu saindiac erraytendu, *Vtinam aut calidus esses, aut* Apoc. 3.
*frigidus, nunc autem quia tepidus es, incipiam te euomere ex ore meo.*

Nahinuque bero içan çine nit Christino ona beçala, edo hotz paganoa beçala, baiña çeren eppel baitçira, ez hotz, ez bero, ez pagaño, ez Christino, neuré eçaguccetic, cein baita emaiten aditçera ahoaz, hassiconuçu çuré egoixtera eta accatçera.

Bekhatoria bertçé capitulia hassi gabé conclusioné huntan othoisten citat etciren pagano edo sorceich, et çiren deabru edo sordeich, ené bidian sar cité, orhitcité hilçiaz *Memento mori.*

Neuré adisquidia beldurniça çuri eta niri guertha daquigun Pharaõ Erregueari beçala harc Moiseren, eta Iencoaren populiaren contra çuela Moisec eta haren Iēdeec itxasso gorria bi partetara erdiraturic hayer passagé emaiteco, itxassoa iragan çuten oiñac busti gabé Pharaon aldiz beré gendé ororequin itxassoaren erdian itho, edo hondatu, ikussi çueneā Pharaonec itxassoarē erdira çenian itxassoco vra elkharganat iuntatçen cela oihu eta heyagora eguin çian : *Fugiamus Israelem, Dominus enim pugnat pro illis, contra nos.* Goacen, ihessy guibelerat, Iencoa guré Exod. 14
contra da, bena berandia cen, çeren vrac elkhargana bilduric, Pharaõ, eta haren gēdiac oro errāden beçala galdu, eta peritu çirēt, hala dio escriturac, *Fugientibus illis, sed accurrerunt aquæ, & inuoluit eos Dominus in medijs luctibus.*

Hala, hala, bekhatoria herioaren orena heldu denian, oyhu, heyagora [33]
çuc eta nic eguiñen dugun ; dugun Ap-heça ! dugun Fraidia ! dugun Confessione ! dugun Sagramendia ! dugun espatio ! dugun termiño penitentia eguiteco baiña miserabliac, eta galdiac gu, beldur nuçu eztugun vkhenē Ap-heçic, Fraideric, Confessioneric, Sagramenduric, Espatioric, Termaiñoric, ezten içanen penitentia eguiteric, ez lekhuric, eta herioa çunçurretic lothuric, deboilla guitçan, eta lahardeca, IESVS erran gabé, herioaz orhitu faltaz, eta gorpitçac eriden beçaiñ tité beré ohia ilherrian, arima gaichoac, ediren deçan beré sepultura iffernuan Ienco misericordiosa, othoy hantic beguira guitçaçu.

× × × × × × × × × × × × × × × × ×
× × × × × × × × × × × × × × × × ×

# ONSA HILTCECO

## BIDIAREN.

## BIGARREN CAPITVLIA.

Capitulu huntan frogatçen da Escritura saindiaz, legué çaharraz, onsa hiltçeco bidia, dela hiltciaz orrohoitcea.

ESPIRITV saindiac emaytendu manu, eta conseillu onbat mundu
Ecles 7. orori Salamon çuhurraren ahotic, erran dianian, *Memorare nouis-*
[34] *sima tua, & in æternum non peccabis !* orhitçité çuré azquen orenean helduco diren gauça berriez, eztuçu iagoiti eguiñen bekhaturic.

Nouissima hitz hunec significatçen du herioaren orena, eta manatçen du bat bedera hartçaz orhit içatera, edo oraño significatçen du, arima galdien penac eta suppliçio eternalac, ceintara, demonio ororen compañian condemnaturic ioanen baitira hillez gueroz, herioac bekhatian attrapatçen eta surprenitçen baditu : edo significatçen du arima hurusaren eta salbatiaren felicitate, eta contentamendu æternala, ceintara segurqui eta infailliblequi sartuco baita çeruco Erresuma handi hartã, Iencoaren gratian mundu huntaric partitçen balin bada oraño significatçen du iuiamendu particularra, noiz eré arima bat gorpitzcetic ialqui den beçaiñ fité Iencoaren Tribunal iustuaren aitçinera presentatçen baita eta han Iuié iustu haren aitçiñian, haren obra onac, eta gaixtoac oro examinaturic, eta balentça batetan, beçala onsa pissaturic, gorpitça lurrera baitoa, eta arima edo Iencoarequiē Ceruco gloriara baitoa, edo seculacotz iffernura demonio oroquin condemnatçen baita, hori

da iuiamendu particularra ; erran dut iuiamendu particularrean Arima badoala, edo Parabissura, edo Iffernura ; ceren Purgatorioa baita heren lekua, hara Ioanic eré, segur baita, handic dembora compliituric parabissura Ioanen dela edo endelgatcen da, nouissima hitz hartçaz, iuiamendu generala, noiz eré azquen iudicio general haren egunian, Iesv-Christo guré Iauna ginen baita hillen, eta biçien iuiatçera, eta orori oney, eta gaixtoey, gorpitz arimey, errecompentxaren, edo punitionearen emaytera, oney parabisua, eta gaixtoey Iffernua, Ceruarē |35|
eta Lurraren aitçinian, eta Aingueruac egonē baitira Iugé haren aldian inguru, inguru trompeta soñuz onen aldé eskhuñian, eta gaiztoen aldé ezquerrean bereciric eçarten, eta guisa hartan mundu visiblé eta vniuersal hunec, beré azquen fiña, eta azquen corsua vquenen baitu, horiec dira, nouissima, hitz hunez endelgatu behar diren gauçac, eta horietçaz orhit guiten, dio Salomonec, bekhaturic ez eguiteco, onsa biçitçeco, eta onsa hiltçeco. *Memorare nouissima tua, & in æternum non peccabis.* Orhitçité hiltçiaz, eta iagoiti eztuçu eguinen bekhaturic.

Gauça segura da, eta duda gabia, guiçonac, eta emaztiac gogoan ardura eduqui badeça, beré Arimaren, eta Gorpitzçaren separationia, mundu hunen azquen fiña, eta akhauātça, Iencoaren aitçineā Arimaz eguiñen den iuiamendu particularra gorputçaz, eta Arimaz azquen iudicionian içanen den iuiamendu generala, Iffernuco pena æternalac, Parabissuco placerac, eta deliçiac, eta mundu hunen galtçia, eta deseguitia, iagoitic, ez batac, ez bertçiac, eliroité Iencoa offensa, ez bekhaturic eguin.

Hambatequi bekhatoria saluationezco eguitecoan, nahi baçira behatu Salomoni, hiltçiaz orhit çité, eta onsa hiltçeco bidé hoberic, iagoiti eztiroçu ediren.

Nahidianac fructu onic ian eta goçatu, heldu denian çuhaintçian den leccurat, lurrian çuhaintz haren pian diren frutietaric, eztu hartçen, ez iatē çuhur bada çeren communsqui lurrian diren frutu onac, gaixtoac baitira, eta hirotiac, eta ez bateré naturalac, baiña soguitendu goiti, eta çuhaintz haren gaiñian diren frutu on, fresco, delicatu, eta khirestu |36|
eztiren hayetaric iatendu, eta hayetçaz beré ahoa, eta beré estomaca rescatçendu, alegueratçen, entertenitçen, eta assetçen.

Mundu hau, çuhaintz handibat idurida, haren pian diren frutiac, oro khiretxu, corrōpitu, satxu, eta poçoatu dira, hetaric ian badeçaçu, galdu, çira, hil cira baiña eguiçu so goiti, çu haintçé haren thima, baita Cerua, hantic hartçaçu, nahi çiren beçambat frutu hayec emanen drauçié goço eta çaporé onbat, ianago, nahiago, çuré arima appetitua çorrozturic guelditucoda, eta goço onian edirenen du beré assia, eta beré assian goço ona, frutu delicatu, eta admirablé haren esparātçac,

Psal. 16. eta desircundé handiac, erraneraçi çian Dauid Erreguiari, *Satiabor cum apparuerit gloria tua.* launa lurreco frutiec eçin assetçen nuté, baiña çuré gloria behin ikhus badeçat, ordian ené arima, bethe, assé, eta complitu içanenda.

Eta nola Ceruco onac eta frutiac baitira aldé orotaric on eta segur, hala hala lurrecoac dira aldé orotaric falso, flaco, eta trompur, hargatic
Coloss. 3. errandu Apostoliac, *quæ supra sunt sapite non quæ super terrā,* gogoa eman eçacié lurreco oney, eta frutiey, ezteçaçiela hayetaric iā, baiña eguiçié so goiti, Ceruco oney, eta frutiey, eta hayetaric ian eçaçié. condatçenda Mithridates Ponté herrico Erregué handibat beldurrez beré Erresuman, edo campoan, çombait traidoré gendé gaixtoc poçoaturic hilleraçi leçaten inuentatu ciala, eguin, edo eguin araçi ciala contrapoçoa admirablé bat, poçoa ororen contré erremedio bat, ceini eman baitcian
[37] beré içena icena, eta deitha erraci, Mithridata, eta mudian çen egun gutiez, beré Mitridat hartaric, iaten, eta erreçebitçē ciela, beré bihotçarē, poçoa ororen cōtré azcartçeco, eta segurtatçeco, eta nola Erreguiac, hala nola, nor nahiden, fortunarén iocoaren eta errotaren pera noicic behin, errorten ahal haitira, egun batez, Erregué gaiçoa guerlan, erori cela Erromaco genden, beré exayen escura, eta nahigabez desohoré hura beré personan ikhussi, non ororen mirail, eta ororen hirrigarri, Erromaco hirian Captiuo eta presoner estecaturic, eta trocaturic sarladin, beré hala, hartu ciala, eta ian, ediren ahal cian poçoaric bortitçena, eta biciena, vstez berac beré buria hilen cian, baiña aurher eta inutila içan cen, Erregué haren insseia, çeren, nola haren bihotça lehen mithridat contrepoçoa hartçaz ezcartu baitcen orduco pocoa harc, çombat ahal baitçatequian azcar,, eta violent etcian vquen asqui indar haren contré, hari biciaren edequiteco, eta hala Erregué miserablé hartçaz exayac eguin cian plaçer ciana.

Bekhatoria, othoy, eguñian behin hassiric çuré gastetassunean harreçaçu contrepoçoa huntaric, eta hartçaz çuré Arima azcar eçaçu eta bazca, eta segurtacité hala eguin badeçaçu eztiçula iagoiti bekhaturic eguiñen, *In æternum non peccabis,* eta hambatequi onsa hilen cirela cerén çuré arimaren exai gaistoec, emanic eré hari poçoa, eztiçu vkhenen indarric haren contra poçoa harc hari edequiteco gratiaren bicia, haren barnian den, mithridat, contrepoçoa eder, oneta haitu hura dela causa, ceiñ baita, herioaren memoria, hiltciaz orhitcia.

[38] Lactant. lib. de ira cap. 13. Naturalistec diote Vipera, dela Sugué mota gaixtobat, Ceiñec beré aussiquiaz Gendiac, eta Animalac poçoaturic communsqui hiltçen baititu, eta haren aussiqui gueixtoaren sendotceco, eztela erremedio hoberic, edo contrepoçoa seguragoric, nola, Vipera, Sugué haren beraren herhautsa. Suguiac behar diala erré, eta guero herhaustu denian, non eré baita çauria, eta aussiquia, han eçarry eta applicatu

Suguiaren herhautssetic, eta çauria, eta mina, quand & quant sendotçen direla.

Neuré Adesquidé maytia, nahi ezpaduçu Deabru Sugué gaixto harc çuré Arimari aussiquiric, edo çauritic eguin diçon, educaçu çuré bihotçaren cāberan, herioaren herhautsa, estuçu perilic, minic eguindieçaçun bekhaturic eguin baduçu, Sugué harc, Deabriac, aussiquiric, çuré Arima çaurtia bada, herioaren herhaussetic emā eçaçu appliça eçaçu miñari, eta çauriari, ené gain, çauria, eta miña ezpadite bertan sendo bekhatian bacira, hantic ialguiteco, bekhatian ezpacira, hartara, ez erorteco, Ceruco eta Lurreco Barbarec, estute edirenen erremedio hoberic, çuri emayteco, nola baita herioarē herhautssa, hiltciaz orhitcia.

Hargatic Salomonec berac, nola iaquintsun baitçen officio huntan, eta baitçaquian Arimen onsa sendotcen, eta eritcetic beguiratcen, errandu ederqui, eta çuhurqui, guré aitciñian hil denaren personan, *Memor esto iudicij mei, sic erit, & tuum, mihi heri, & tibi hodie,* orhitcité ené iuiamendiaz, hala, hala icanenduçu çuré aldian çuria, atço cen ené aldia, egun içanenduçu çuria, edo ené aldia egun duçu eta bihar içanenducu curia eta ceren luçamendiac, eta remiticiac guerotic guerora, eta egunetic egunera periloz eta dangeroz baitira, bekhatoria considera eçaçu pas- [39]
sagé saindu huntan Termiñoa eta Dembora labur direla, errayten diala atço, eta egun, egun eta bihar, guri erakhusteco, nola atço danic egun draiño, egun danic bihar draiño, arté hura baita labur, eta hertsi, *de lunes á mates, pocos sont los artes,* Espagnolac erraiten dian beçala, Dembora hertsi; eta labur hartan, egun oroz, gau oroz, oren oroz, momentu oroz, goician, eguuerditan, arratzian, hiltciaz, herioaz, eta guré azquen orenaz behar dugula orhit içan, bekhaturic ez eguiteco, onsa bicitceco, eta hobequi hiltçeco.

Salomonec berac, hobequi guré bihotcian, eta guré borondiaren erdian herioaren orhitcia, eta memoria, iossiric, itçaturic, eta escriuataric, vtci deçan, erraitendu guiça hontan, *Quid superbis terra, & ciuis,* Eccl. 10.
Guiçona eta Emaztia lur cira, herhautz, cira, eta cergatic, vrguillian, eta superbian sartçen cira : erran nahi balu beçala, mundu orori ; Aita Saindia, Cardinalia, Ap-hezpicua, Apheça, Emperadoria, Erreguia, Princia, Duca, Comtia, Marquisa, Baroiña, Aitorensemea, Laboraria, Aberatsa, Pobrea çer hari cira, çer dioçu, çer nahiduçu eguin, erran, edo pensatu, lur cira, herhautz cira, mortal cira, etcirela hebentic harat, vrguillutzu, glorioz, eta fanfaron, hil behar ezpaçunu beçala, orhitcité lur cirela, herhautz cirela, eta çuré hiltciaz orhituric, bicitçé saindubat bessarca eçaçu sainduqui hiltceco.

Nahidut sinhetsi, eta sinhestendut, Eliça saindiac, baita Iesv-Christoren Espos maitia, eguia ororen iabé, eta habé handia haren odol pre-

[40] tiosaz erossia, eta iceutia, haren beraren Espiritu saindiaz guidatia, éta gobernatia, vrtian behin gariçumaren lehen egunian, hausterri egun saindian, hautz benedicatiz, fidelen ororen buriac, eta belarrac, Apheçac ceiñatcen dutianian eta erraiten hitz eder hoyec, *Memento homo, quia puluis es, & in puluerem reuerteris*, orhitcité guiçona, herhauts cirela, eta herhaustu behar duçula, eztiala vkhen bertçé pensamenduric, ez bertcé intentioneric, guri orori othoitçia, representatcia, eta gomendatcia baici, ardura, eta possiblé baliz, bethiere orhit guintian herioaz, amorecatic haren Espos saindiaren bicitçé saindiaz orhituric, eta harc gugati Caluariaco Mendian bi Ohoiñen artian iragan dian herio, eta passione dolorosa, guré beguien aitçinian, mirail ederbati beçala harturic, haren imitationetan, bekhaturic eguin gabé biçiric, haren gratian hiltçeco dohaiña, eta fortuna ona, ardietz, eta irabaz ahal guendeçan.

Orhit niz neuré gastetassunean ikhussiric Pariseco hirian (ceiñ baita Franciaco Erressumaren hiri Capitala guré Erregueen egoité, eta habitationé comuna, eta ordinarioa, eta lur orotaco hiri ederren, eta handien, edo lebenbicicoa edo bigarrena) Eliça handibat, cein deithatçen baita Innocenten Eliça, eta Eliça hartan ikhussidut ilherri handibat, Ceiñetan hil estranger ororen gorpitçac ehorsten baitira comunzqui; eta campoticoec beré Hobiac eta Sepulturac edireten baitituste ilherri handi, eta çabal hartan, hillen heçurrac goiti daudé galerietan inguru, inguru, alchaturic eta hedaturic, eta he çur hayén pian, hillen heçurrac min-
[41] çatçen balira beçala, hitz hoyec daudé, Escriturian iarriric lenguaié Francesian.

*Nous auons esté comme vous*
*Vous serez aussi comme nous.*

Erran nahibaitu escaraz, gure lengagian, içañ guira ciec beçala, ciec eré içanen ciraté gu beçala.

Eta guero hitz Francez hayen pian, irakhurtcen dira hitz eder batçu latiñez escrituran iarriric, hilē hayen heçur berac, biciey mintçatcen balira beçala, guisa huntan.

*Ibo, Ibis, Ibit,*
*Ibimus, Ibitis, Ibunt.*

Explicacen baitira, guré lengagian euscaraz, façoin huntan; Ioanenitz, Ioanen cira, Ioanenda, Ioanen guira, Ioanen ciraté, Ioanen dira.

Bekhatoria, neuré bihotça, aguiā içā cira Parisen, aguian ez, eta han içanic eré, aguian etcira orhitu hilen eçurrec, biciey, erraiten

dutien hitcez, eta proposez, baiña aumenz, çuré parropiaco Eliçan sartcien cirenian, eguiçu sobat çuré aitcinian Ioan diren çuré asquaciac, adisquidiac, eta çuré eçagutiac, eta orhituric hayen hilciaz, orhitcité çuriaz, considera eçaçu, içan direla hec beré demboran, çu çurian ciren beçala, edo guehiago, edo gutiago, eta cer eré ahal baitcinateque, çuré orena, eta çuré aldia gin dadiñian, nahi bacira, eta ez, çuré biçarrac eta çuré muthurrac despit diala, hayec beçala herhaustu eta hil beharduçula, hori çuré gogoan eta bihotcian harturic, requiem, bedera, hil gaiço hayegatic, Eliçan barnen edo campoan erranic, edo erran eracir ic, bateré bada hayen artian, onsa hildenic, eguiçu onsa, hayen hilcé onian çuré parthé onarén vkhaiteco, bateré bada hayetan [42]
gaizqui hil denic, fiñ gaizto, eguin dianic, hayen exemplutic, çuré probetchua eguinic, corrigi cité reforma cité eguiçu penitentia, damna etcitian, hec galdu, eta damnatu diren beçala.

Erranendu çombaitec, orga eçarri dudala idien aitcinian, ceren neuré onsa hiltceco bidiaren brogatceco Salomonen hitçac aitciñ aitciñian lehenic alleguatu, eta raportatu baititut, eta guero ondoan Dauid Erreguiarenac, baitcen Salamonen aita dignia, baiña eztut ansia, ala guibela, ala aitciña, aita semé hoyec biac ederqui, eta sainduqui minçatu dira nic hassi dudan bidiaz, cer eré baita, eta cer eré içanen baita, aitac vkhenen du semiac eztian ohoré hura, beré bekhatien onduan, penitentia handuric eguiñic, eta hartan hilic, Eliça saindiac eduquiten baitu, saluatu dela, parabissuan saindu handibat dela ; semiac aldiz, vtcidu eliça saindia dudatan, ala cen saluatu, ala damnatu, eta Eliçaco Doctorac eré, norc beré opinioné particulara bessarcaturic, baitciec saluatu dela, bertceec eztela, batac bai, bertceac ez, bi partoetan iarri dira Salamonen Arimaren eguitecoaz, eta nola pundu hau iugé ororen iugiaganic baita dependitçen, dugun hari remeti, eta goaçan atçiña guré bidian, eta ikhussiric Salomonē manu, eta conseidu ederrac, eta saindiac onsa hiltceco moyenaz ikhus deçagun cer erraiten, dian eguiteco hartan berian, haren Aitac Erregué Dauid saindiac.

Aguerida escritura saindian David Erreguiac guré Iencoà bi occasioné handitan particularqui offensatu eta desoharatu ciala ; lehena cen noiz eré Bersabea edurraren amorio desordenatuac itsuturic, eta haren [43] 2, Reg.
buruco huna nahassaric, eta cordocaturic, berzceren emaztiaren ondoan 12.
ibilli baitcen, eta hari beré senharra, vria, hil eraci baitcian, hobequi moyen hartçaz beré desircundé gaixtoen harequin complitceco, eta beldurgabé hartçaz placer cianiā, placer cianaran eguiteco, eta colpu batez bi bekhatu handi, eta graué baitçutian cometitu, heriotcia, eta adulterioa, bekhatu hayen punitionetan Erregué hura galdia cioen, eta damnatia secula cotz, Iencoac hartçaz misericordia vkhenic, ezpalu auertitu, eta mehatchatu beré faltez Nathan Prophetaren ahoaz, eta

harc, *Peccaui*, erranic, bené penitētiaz ezpalu reparatu beré bekhatia, eta beré falta.

2. Reg. 24. Bigarren aldian Dauid Erreguiac, guré Iencoa eçarri cian coleran handizqui, territatu, samurtu, eta khecha eraci haren contra, ceren Erresumaco populia condutan eta roletan eçarten ciala, sobera glorificatu baitcen, superbian eta vanitatian sarthu beré buriaz, ordian eré, Erregué miserablé harc, galdu eta peritu beharcian, Ienco misericordiosac ezpalu egorri Propheta Gad hargana, haren mehatchatcera beré eguin cian faltaz, eta ezpalu berrisqui Erregué criminel harc beré dolu, eta penitentiaren moyenez, beré bekhatiaren barkhamendia irabaci, han berian Escriturac erraiten dian beçala, *Ego sum qui peccaui, ego iniquè egi, isti qui oues sunt, quid fecerunt? vertatur obsecro manus tua contra me, & contra domum patris mei.* Iauna ninuçu bekhatotoria, ninuçu gaizqui eguilia, hoyec ené ardiac dituçu, hoyec ezticié oguenic, çuré coleraren açotia, ené, eta ené echiaren contré itçul eçaçu.

Neuré adisquidia, nahi baduçu ikhassi Dauid Erreguiaren secretia,
[44] nola ialqui cen beré bekhatutic, nola perseueratu cian, nola onsa hiltcen, iaquin eçaçu etcela bertçeric hilteiaz orhitcia, baici, herioaren beldurra, hura cen haren bidia, haren arma, eta haren contrapoçoa, beré etxayen
Psal. 54. ororen garaytceco, hala berac aithortcendu, *Cor meum conturbatum est in me, timor mortis cecidit super me,* herionaren beldurrac ikharatcen tu ené caiñac, eta ené heçurrac, herioaz orhitcen niçanian, estat onic ez ianian, ez edanian, ez loan, ez ginian, ez Ioanian, ené Arima, eta ené Gorpitça, çaurtu, eta colpatu dira herioaren beldurra dela causa.

Erregué Dauitec ezpatian ediren erremedio hoberic gratian egoyteco herioaz orhitcia beno errā beharda boteré handi diala harc, guiçonaren, eta amaytiaren iencoaren leguiaren pian chuchen, eta ferme egon eraciteco erregué gaiço hura, herioarē beldurra beré bihotçian iauntssiz gueroz, edo beztituz gueroz, ardura mintço da beré herioaz, beré herhautsaz, beré penitentiaz, beré Psalmé orotan quasi. haJtacotz eré Iencoaganat conuertituz gueroz eguin çucian cazpi Psalme Penitentialac,
Psal. 6. suiet eta materia hontan berian hayetaric lehenian dio, *Lauabo per singulas noctes lectum meum, & lacrimis meis stratum meum rigabo ;* Iauna orhituric hil behardu dala, eta çuré aitcinera presentatu, çuré beldurrez eta neuré bekhatien doluz, eta desplaceréz, gau oroz eguiñen diçut nigar, eta neuré nigarrez, neuré ohia, boustiren, trempaturen, eta vccuciren diçut.

[45] Psal. 101. *Cinerem tanquam panem manducabam, & potum meum cum flectu miscebam.* Herhautza oguia beçala iaten nian, eta neuré edana nahastecatçan nuyan neuré nigarraz, dio harc berac erran nahidu, apairu aldical, neuré ian edana eguiten dudan ordu eta oren oroz, neuré hiltciaz herioaren

herhauxetic, edanari neuré beguietaco niguarretaric, nori beré iaquia, egun oroz mayten nian.

Propheta harc berac dio bertcé lekhu batetan, *Fuerunt mihi lacrimæ, panes die ac nocte,* ené nigarrac, ciren ené ian, edanac, eta ené hazcurria gauaz, eta egunaz ; delicatuqui, eta friantqui bici cen Erregué hura haren mahagñian etcenian cerbitçatcen haren platetan berce haraguiric, ez viandaric, ez haren flascoetaric emayten edatera bertce mahaxarnoric, haren bi beguietaric erorten çen nigarretaric baici erran balu beçala, ené gorpitçari emayten dudan oren guciez beré refectioné corporala, oren berian neuré Arimari emayten dut beré refectioné espirituala, eguitendut nigar bihotçez bereré, orhitcenitz neuré hilciaz neuré bekathiez, neure Iencoari eman behardudan contu herxiaz, eta guero nigar hetçaz, eta orhitcē hartçaz allegueratcendut, eta consalatcen neuré Arima tristia, eta Arima gaichoa. Psal. 41.

Erregué penitent harc berac orhitcen çenian beré hilciaz, eta beré bekhaties, beldurrez eleçan asqui penitentia eguin beré faltez, eta ikhusten cianian etciala beré bihotcian contritionia asqui handi, nigar eguiteco, eta beré nigarrez beré bekhatien chahatceco, eta hayetçaz vccutceco, othoitcez cagoen iencoari igorlicon gratia haren bihotz gogor [46] raren, eta hotçaren, espiritu saindiaren suyaz beracetco, vrtceco, ematceco be ré gogora beré bi beguietan behera nigarrez, bi itkhurriren eguiteco, hobequi beré barcamendiaren içateco gratian perseueratceco, eta fiñian onsa hiltceco; haren othoitcia irakhurtcen dugu Psalmo huntan : *Cibabis nos pane lachrimarum, & potum dabis nobis in lachrimis in mensura.* Iauna eguiçu oguibat ené nigarres, eta ogui bartçaz, othoy ardura, ardura bazca neçaçu, eguiçu ené nigarrez beharden eda tecobat, eta hātic indaçu edatera beharden içariac eta mesurac gainti eguinic eré, eztiçut ansia neuré çorrac onsa, eta iustoqui pagaturic, çurrequin biciric, çutan hiltcen banitz ené ian, edana hebentic harat den gauaz, eta egunaz, nigarra, eta contritionia, hurac badutut ber, esperantça dut ené orena jin dadiñian hiltcé onbat vkhenen dudala. Psal. 79.

Neuré adesquidia nahi baduçu eguia frogatu erran diren Psalmo hoyetan erranen duçu David Erreguia bekhatoré handibat içanic, penitent handibat içan dela çeren beré bekhatiez, eta beré herioaz ordu onez orhituric saluatceco bidé ona chercatu eta ediren baitcian, hambatequi erraçu penitent handi harc beré salbamendiaren obligacionia oro çor ciala herioaren memorioari salbatu cela, ceren herioaz orhitu baitçen, eta damnatu içanen cela herioaren orhitcia, eta beldurra oukhen ezpalu hori errandu Psalmo deuot huntan : *Circumdederunt me dolores mortis, & torrentes iniquitatis conturbauerunt me, dolores Inferni circumdederūt me, præocupauerunt me laquei mortis.* Vnguratu nuté herioaren penec, eta dolorec, eta ené iniquitatiaren nombré handiac, eta grauitatiac, nahassi

[47] Psal. 17. nuté, eta lotsatu, Iffernuco penén, eta herioaren laçoen beldurrac, ikhussi banitu beçala, harrituric, eta lotsaturic, ené arima, eta ené gorpitça, carcelian, eta presondeguian daudé, iduritcen çaut, herioa, eta Iffernua, neuré beguien aitcinian ikhousten ditudala, erregué penitent handi honen deuotionari, capitulo hontan, azquen conclusioniaren emayteco, eta harc herioari çonbat ohoré, eta respectu eman dian, behacité azquen Psalmo huni, eta ordian çuré bekhatiez, eta çuré hiltciaz orhituric, ené adesquidia, eguiçu nigar edo bihotcez, edo beguiez.

Egunian hiruretan neuré Iencoari, neuré laudorisac, eta neuré esquer alaguestac errendatuco diotcat, ceren ialquiric neuré bekhatietaric, eta herioaz orhituric, bidé onian iarri benitz erranendut mundu orori; Aingeruej, eta giçonej, Ceruari, eta Lurrari, hilej, eta biciey, çonbat onden Iencoarequin içatia, eta çonbat damu den har enganic apart içatia, eta esperança dut Ienco handiac ené boça, eta ené oyhia entçunen diala, ardura chiago eré beharnuqué, baiñan aumens egunian hiruretan, arratsian, goician, eguberditan, eztut faltaric, eguiñen, cantatçera goraqui, eta publicatcera mundu ororē aitciñian, çonbat gratia, eta çonbat misericordia Iencoac eguindian ené arimari, bekhatiaren larru çaharra vtciric, gratiaren larru berria iauntsi dut, eta beztitu, dio Erregué peni-
Psal. 54. tentac, *Vespere, & manè, & meridiè narrabo, & annuntiabo, & exaudiet vocem meam.*

Sinhestendut Eliça saindiac IESV CHRISTOREN Esposa maytiac eta
[48] ederrac, Erregué deuot hunen imitationetan, çuhurqui, eta sainduqui ordenatu diala, egunien hiruretan Eliçaco cegñiac populu fidelen artian ioeraci litian, goician, arratzian, eta egouerditan, eta costuma honest, eta laudablé hori, comunz qui deithatcenda Aue Maria ezquillen ioitia arratsian, goician argui ceigñiac, egunerditan egunerdi ceigniac, halaber daducat Eliça saindu harc berac, oukhen diala borondaté, eta intentioné, ez quillaren soiñuez guré bat bederaren obligatceco, eta auerticeco, guré sortciaz beçala, guré hiltciaz eré aumens egunian hiruretan bereré, haiñ bertcé aldis orhituric guré herioaz, eta ialquiric guré bekhatietaric, ikhas guendeçan prest egoitera eguruquiteco gratian guré herioaren, eta onsa hiltceco.

Coinbat Doctor deuotec dioté ceignu horien joitia gindela, guri representatceco hemabortz Misterio principalen, ceiñ baitira partituac hirur bortcetara lehen bortçac Misterio ioyosac, Bigarrē bortçac, Misterio dolorosac, hirur garren bortçac, Misterio gloriosac.

Bertcé batçuec, dioté handic endelguatcera emaitē dela Eliçaco hirur misterio handiren eçagutcia, ceiñ baitira, Annuntciationia, Resurrectionia, eta passioné dolorosa. Lehena eguin cela, arratsian, bigarrena goician, hirurgarrena egunerditan hartacotz Eliçan ezquillac hiruretan joiten direla, arratsian, goician, eta egunerditan hirur Misterio hayen

memoriaren guré espiritiaren barnian eçarteco, eta haren pitceco, eta hayetçaz orhitera citeeo.

Ne uré adisquidia çer eré baita costuma horçaz Erregué penitenq handi harçaz orhituric, eta harturic haren exemplia çuré guida, eta çuré [49]
mirail, eztadin iagoiti iaagan egunic, hemendic harat, non hiruretan, etcitian orhit çuré herioaz, hala eguin badeçaçu, esperantça dut David Erreguia, bekhatian beçala imitaturen duçula penitentian bici çireño, eta hiltcian oukhenen duçula çuré Arimaren paussia: eta Iencoaren benedictioné saindia.

Egun batez Ezechias Erregué handi hura beré ohian çagoen hiltceco pundian eritarssun handibatez colpatia, hala dio Escriturac, *Ægrotauit Ezechias vsque ad mortem;* Iencoac Isaya Propheta igorri ciā Erregué Isay. 39.
eri haren bisitatçera, bisita hartan Propheta mintçatu cen Erreguiari guisa huntan, *Dispone domui tuæ, quia morieris, & non viues.* Erregué Ezechias Iencoaren partez manatçen citut eta abertitcen, emandeçaçun çuré Etcheari, çuré familliari eta çuré eguitecoei beharden ordria, eta errequeitia, eguiçu çuré ordeignia bihar hil behar duçu çuriac eguindu. Erregué harc, entçun cian beçain fité Prophetaren ahotic beré herioaren berria eta meçia, Escriturac dio, beré beguitartia paretiari itçuliric othoitz hau egutñ ciala Iencoari, Iauna othoy, orhitcité, neuré cecuria, eta neure dembora ahal beçanbat, çuré cerbitçuan eta çuré beldurrarē pian emplegatu dudala, çer eré çuré beguien aitcinian vsté beinian, cela on eder iusto, eta laudablé, haren eguitera enxayatu niçala, eta oray, othoy indaçu dohaiñ, eta gratia neuré bekhatiez dolu, eta desplacer içateco; indaçu espatio, dembora, eta termaiñu neuré bekhatiez penitentia eguiteco, eta ber orenian beré orationia akhabaturic beré bi beguietan behera nigarrez, bi ithurri hañdiric eguiñ ciala *Fleuit Ezechias flectu* [50]
*magno.* Ordian guré Iencoa mintçatu cela Erregué hari guisa huntan, *Audiui orationem tuam, & vidi lachrimas tuas, ecce adjiciam super dies tuos, annos quindecim, & de manu Regis Assiriorum eruam te, & Ciuitatem istam, & protegam eam;* Ezechias ené adisquidia, ençun dut çuré orationia, eta othoitça eta ikhussi ditut çuré beguietan behera ialqui diren nigarrac, sendo cira, aldi huntā emayten drauçut bicia, eta çuré egunac luçatcen ditut hamabortz vrthez, çuré contritioniaren, eta nigarren amorecatic, Assiriaco Erreguia, baita çuré etxaya haren escuetaric, çu çuré hiria, eta çuré Erresuma oro deliuratuco ditut eta deffendatuco, mundu ororen contra. Neuré Adisquidia, soguiçu herioaz orhitciac cenbat indar, botheré eta bertuté dian, bihotzbat beratçen du, den gogorrena hantic idoquitendu nigar, Iencoari edequitendu beré colera, eta armac, escuetaric, eta haren arestac, eta decretac eré aumens cominatorioac cambiatçen ditu, luçatcen, ematçen, eta moderatçen, educaçu solamenté herioa çuré gogoan, eta çuré bihotciañ, hura hau baduçu ber, eguiñen duçu Iencoaz nahi,

eta bahar duçun oro, Iencoac eré beré aldetic eguiñendu çuc placer duçuna oro, hambatequi Iencoa, eta çu, biac bat içanen ciraté, çu Iencoarequin eta Iencoa çourequin gratiaz lurrian, eta ceruan gloriaz.

Ezta edireiten legué çaharrian Coraje bat vertute bat, constantia bat, eta patientiebat Iencoaren cerbitçaren artian haiñ handiric, ederric, miragarriric, eta quasi adorableric, nola içan baita Iob saindiaren
[51] Corija vertutia, constantia, eta patientia, orienteco herrian cen iaunic handiena, lehena, edo lepenetaric bat cen Iob saindia, Iencoaren cerbatçari handi hura, hala dio Escritura saindiac. *Erat vir ille magnus inter omnes Orientales.* Iencoac eman cian guiçon hari çazpi semé, eta hirur alaua beré emastearen ezcoutcian eman ceron oraño guré Iēcoac guiçon hari çazpi mille ardi, hirur milla Cameleon, bortz ehun idi paré, bortz ehun asto ama, lur etché, borda, eta bertcé onic, eta ederric Franco, eta egunbatéz ikhussi cian beré buria goician ohetic laudan orienten cen iaunic handiena, eta aberatcena, eta arratzian oheracoan ikhussi cian beré buria orientē cen guiçonic miserablena, eta ezqueleric handiena, deabruac sathan gaixtoac, Iencoarē permissionez aldé orotaric Iob saindia attaccatu cian, afligitu, eta ruinatu, bena harc eduqui on sathanen tentationé ororen contré, eta iagoiti ez galdu Iencoaren beldurra, eta haren amudioa deabruac onsa attaccatu cian, eta Iobec hobequi deffendiatu, trompurra trompatia gueldituu cen attaccatçaliac ohoria, combata, eta victoria galdu, eta attaccatia çenac, ohoria, combata, eta victoria irabaçi.

Berri tristiac, eta dolorosac Iob saindiari heldu dira beré etchian, meçubat heldu da campotic, eta dio Iob saindiari guisa huntā, Iauna sabæa herritic çuré etxaiac ginic armaturic, çuré bortz ehun idi pariac, eta bortz ehun astoac oro, alchaturic elguetic eraman dituscté, eta hayen beguiraçaliac oro nitçaz berzeiac elguian hillic colpez, eta massacraturic heda heda diaudeçu, ni ihessi escapaturic helduniz çuri berriaren condatcera.

[52] Heldu da bertcé meçubat, eta dio, Iauna Cerutic subat erorida mendian çuré ardietan, eta artçaiñen burietan behera, eta ardiac, eta artçaigñac oro su harc berac erratcen hassiric, bortcha escapatu niz çuri berri haren contatçeco.

Hirurgaren mecia heldu da eta dio, Iauna chaldea herrico gendec çuré etsayec, gende handibat, eta armada handibat, eguinic Infanteria, eta Caualeria helduric, choriac luma ayrian beçala, çuré hirur milla Camelonac altchaturic, herriz camporat eraman, eta idoqui dituzté, çuré Caualia, eta acienda oro galdu da hil da etanic colpe eguindut itçurciaz çuri berri hunen errayteco.

Laur guerren meciac dio, Iauna çuré cazpi semiac, eta hirur Alauac çuré haurrac oro, semé primiaren eta guehienaren etchian elkharrequin

bona chera eguiten cirela, eta mahatx-arnoric hobenetic elquarren gratia onori beiriac beteric edaten cirela, eta elquarrequin beré ian, edanian placer hartçen, eta alagueratcen haicé hegoa handibat eta furiosbat, eguoerdi aldetic ialquiric, etchia, beré laur erro etaric, eta laur goncetaric piaz gora eçarri diçu bat batian, eta beré pian oro etchiac erorten dela, arrabascatu, çitiçu herraustu, eta porrocatu, çuré haurrac oro, çuré familia oro galdu da, eta peritu, hayenac eguindu, aita çira haur gabé guertatu.

Berri tristé hoyen ondoan, Iob saindiaren gorpitça aztalian hassiric haren buru tinira draño, ezcabia, tigña, hazteri, çaccar lodibatec, hartu cian, eta beztitu, beré gorpitça, gorotzaté batetan gaigñian hedaturic çagoela harrec haren gorputceco haraguia biciric iaten çuela, Iob saindiac ikhussi çiã, eto oraño manera hartan çagoela, beré emazté propiac, [53]
milla des ohoré, eta milla mesperechu, beré beguien aitcinian, eguin cioen eta deabru gaixtoac Iencoaren permissionez, aldé orotaric, beré onetan, beré ohorian, eta beré personan, arima salboric, milla inuirio, eta milla mesprechu eguin ciã guiçon saindu hari, eta harc oro soffritu, eta patitu, Iencoaren amorecatic, patientia handitan, eta patientia harc hura errendatu, Iencoaren, eta guiçonen aitcinian patientia ororen exemplu, eta mirail handia. Neuré adisquidia nahi ducia iaquin, nola, eta çer guisaz Iob saindiac, miracullu handi hec eguiñ çutian erranen derautçut, bere hiltciaz, eta beré herioaz orhitu çen, eta herioaren herhautzaz armaturic, beré buria garaitu çian diabrua accaçatu, bere ohoriaren beré haurren, beré onen galcia, beré emastearen mesperechioac, beré gorpitceco eritassunac, eta penac curagosqui eta patiẽtqui suffritu, eta errecibitu, sobat eguin çian beré sortciari eta beré hiltciari, consideratu çian, nondic giten çen, eta norat ioan behartcian, eta ené bidiaz orhituric, beré buriaren contra, eta beré etxay ororen contra victoria ederbat, eta khoroa handibat irabaci çian, eta ardietsi, ené errana, eguia dela berac dio, ikhussi cianian beré buria estatu eta postura miserablé hartan, beré beguiac behera lurrerat ap-haldioric hassi çen Iencoari guisa huntan mintçatcen. *Nudus egressus sum de vtero matris meæ, & nudus reuertar illud, Dominus dedit, Dominus abstulit, sicut Domino placuit, ita factum est, sit nomen Domini benedictum.* Iauna badaquit, billuz gorri gorria, neuré amaren sabeltic ialqui niçala eta badaquit halaber hil behar dudala, eta billuz gorri gorria lurrerat [54]
itçulico nicala, çuc emanic nituen gueiac eta çuc boteré cinduen beçala, edequi derauztatçu, çuc placer duçun beçala eguinda, dela benedicatu çuré icen saindia. Adoratçen çaitut, maytatcen, eta laudatcen, eta nahi çaitut bici naiceño, adoratu, maytatu, eta laudatu, estut ansia neuré onen galciaz, çu baçaitut ber, asqui aberatx, eta iaun handi içanen niz.

Neuré adisquidia, Iob saindiaren arma hori harturic, ordu onez,

Iesv Christorex soldadu on bati emanden beçala, orhit cité herioaz, *Memento mori*, eta çuré orena gin dadiñian, çuré arima khoroaturic iarrico da içarrac baño gorago, Ceruric goren gorenian, eta nola egui-teco orotan particularqui arimaren eguitecoan luçamendiac baitira dangeros, eta perillos guerotic guera, egunetic egunera, luçatu gabé, çuré herioaz orhituric, ené bide hontan sarcité, eguiçu penitentia, onsa hiltceco eztaquiçun guerta, noizpait guertatu cena bekhatoré gogortu, harritu, eta obstinatu handi bati ; Surcus historiano deuotac dio, guiçon gaixto harc erraiten ciela ardura, ardura, asqui ciela hirur hitcez saluatceco, eta bere hiltcian beré hirur hitçac erranic saluatuco cela anartean etciala ansia trufatcen cela penitentia eguitiaz, beré confessoraz eta
1 haren conseillu, eta auisu orotçaz, hirur hitz hec ciren, *Miserere mei*
• *Domine,* Iauna nitçaz misericordia euçu : çer heldu cen tiñian, Iencoa,
P. on beçala, baita iustu, permetitu cian, behhatoré gogor hura, igaran ladin çubi batetan, eta igaraiten cela çamariz çubi haren gaiñian, vrité, oragé, vhazté, eta tempesta handibat ginic, çubia eraman cian vrac,
[55] çamalduna eta Camaria berequin erortian vrean behera çamaldun gaix-toac erran lekhuan beré espechoan, beré hirur hitçac, *Miserere mei Domine,* deabruac haren memoria eta iuiamendia nahassiric, hirur hitz malhurus eta tristé hauc erran cituē hiltcian, *Rapiat omnia Dæmon,* erran nahi baita, deabruac eraman detçala guciac eta manera hartā guiça gaixto harc beré hiltciaz orhitu faltaz asqui ordu onez, eta beré penitentiaren sobera luçatuz, beré buria miserablequi galdu cian, eta damnatu.

Neuré adisquidia, vstedut capitulu vhuntan ediren duçula, çuré herioari çorduçun ohoria, amorioa, eta orhitcia eta vstedut edirenen duçula giten den capitulian, haiñ bertcé occasioné herioaren maitatceco, hartacotz bidé huntan goacen aitciña.

× × × × × × × × × × × × × × × × × × ×

× × × × × × × × × × × × × × × × × × ×

# ONSA HILTCECO

## BIDIAREN

## HIRVR GVARREN CAPITVLIA

*Capitulu huntan frogatçen da Escriptura Saindiaz, hambat legué berriaz, nola Eliçaco doctor saindiez, nola onsa hiltçeco bidia den herioaz orhitçia.*

IGVZQVIA orienten aguertcen, eta ialguiten den beçain fité, lurrian arguiada, gaüac, eta ilhumpiac ihessi doaz, arguiçaguiac ere, eta bertcé Ceruco Içarrec, eta planetec, ala dutē beré arguia eta beré [56]
claritatea, beré naturaz, edo empruntuz, eta iessanez harganic, oro haren ahalquez gordatcen dira itçalcen, eta ezcapatcen, harc orienten goician beré beguitaté ederra, beré bisturac, edermen handiac, eta leignuriac, mundu huni aguercen dutian pundu berian. Errana eré hala da latiñez. *Quando, Sol lucet, Luna, & Stella latent,* Igusquiac argui euguitē dianian, arguiçaguia, eta bertcé içarrac oro gorda bité, bihoaz ihessi, itçal bité.

Ber forman, eta maneran, herioaren veldurra, eta memoria çuré arimaren, eta bihotçaren barniā deño, cer eré han ahal bailiçatequé, concupiscentia, Colera, Auaritia, Vrguillu, Luxuria, eta desircudé gaixto, hurac oro igusqui harc, herioaren orhitciac, accaçatcen ditu beré presentiaz hiltcen, eta deseguiten, et Igusqui hura guré espiri tuan deño, nola han egonen dira bekhatiac, daducat, hala nola suya, eta vra, hotça, eta beroa, churia, eta beltça, leccubatetan, materiabaetan dēborabatez impossiblé baita elguarrequila egon ditian, elguar, eguar ahal deçaten, hala hala impossiblé dela, herioaz orhitcia eta bekhatiac biac elguarrequila, arimabaten camberan, beré egoitia, eta loiamendua ediren ahal deçaten : gratia, eta bekhatia, contrario dira, exai herioaz orhoitcea da gratiaren dispositionea : herioaz ez orhoitcea Bekhatura Ioaitea : hartaracotz herioaz orhoitcen den Arima gratiara doa, eta herioaz orhoitcen esten Arima, Bekhatura Doa, manera berean norc eré baitu herioaren memoria, erran beça gratiara Doala, eta norc eré ezpaitu herioaren memoria ; erran beça Bekhatura doala.

[57] Bata içanen da bidé onean, eta Bertcea bidé gaixtoan, bidé huntaric campoan, Iesv-Christo Iauna, guré Arimen salbatçalia mundu huntarajindenian, Eliça saindiaren, beré Esposaren edertcera, eta beré exẽplu onez, eta predicu sainduez escolatcera, guiten beha nola mintçatu den beré Euangelio saindian herioaz, eta ordian ikhussiço dugu, bidé hau onsa hiltceco, herioaz orhitcia, bidé segura dela.

S. Math. Euangelista minço da guisa huntan : *Si sciret pater familias qua hora fur venturus esset, vigilaret, nec sineret perfodi domum suam, ideo*
Mat. 24 *& vos estote parati, quia nescitis qua hora filius hominis venturus est.* Balaqui Aita familiacobatec, ohoiña gauaz cer orenez gin ladin, iratçariric egon laité presto, eta bigilant loac eliro attrapa ; eta beré etchia eliro chillatcera vtci : hartaçotz ciec eré çaudezté presto, bigilant, eta iratçarriric, ceren ezpaitaquicié, cer orenetan ginen den Guiçonaren Semia.

Ecin hobequi guré Iaunac passagé huntan abertitçen guitu eta manatcen egon guiten presto gratian, bekhaturic campoã herioaren orena heldu deneco, hargatic comparatcendu herioa ohoiñari, guri eracasteco, hala nola ohoiñac beré colpia eguitẽ baitugultien vsté dugunian, hala, hala, herioac eré beré colpia eguiñen diala guc gutienic vsté dugunian, edo nahi dugunian, hargatic dio, *Estote parati*, çaudesté presto, eta presto egoiteco, hiltciaz orhit citezté.

Halaber materia hunteaz beraz mintço delaric S. Marc Euangelistac,
Marc 13 edo guré Iaunac haren mihiaz, dio ederqui. *Videte, vigilate, & orate, nescitis enim quando tempus sit,* so eguicie, beilla citesté, caudeté bigi-
[58] lant, eta othoy eguicié, ceren ezpaitaquicié noiz den, edo noiz içanen den dembora, hitz, guti, labur, eta on, erran nahidu guré Iaunac, ené mecia herioa ginẽdela segurda baiña noiz ginenden eztaquicié meçu harc herioac trompa etcitcen, edo atrapa hirur gauça gomendatcẽ drauciet, so eguitea bigilantia, eta orationia, hirur arma hec ciequila badira, norc eguinendu cier guerla, nor içanenda cien contré, herioa içanenda flacco, cien peco, eta ciec azcar, eta haren guehien.

Luc 21 S. Luc Euangelistac eré emandu eguiteco huntan bere abisu, eta conseillu ona, *Vigilate itaque omni, tempore, orantes, quæ futura sunt, & state ante filiũ hominis.* Dembora oroz çaudezté bigilant, eta orationetan, herioaren orenian ginen diren malhur, desordré, eta confusioné orori ihessi eguin ahal deçacien, eta guiconaren semia gin dadinian, cien iuiatcera edo hilic, edo biciric, edirẽ citcen ez lo, eta iarriric, baiña çutic beré aitciñian, eta iratçarriric.

Guré Iaunac lekhu huntan abertitcen guitu, eta mehachatcen herioaren veldurra, memoria, eta orhitmena eduqui deçagun oren oroz guré gogoan, eta guré bihotcian nahi baguira onsa biciric, onsa hil, edo nahi

ezpaguira, gaixtoqui biciric, gaixtoqui hil manatcen guitu eta abertitcen, *Vigilate omni tempore,* gauden bigilant, dembora oroz, ez solamēte gaztetarcunian, Caharcian, Vdan, Neguian, Asté oroz, Vrthé oroz, Egun oroz, baiña dio, *Omni tempore,* Dembora oroz, ceren nola baiquira dembora oroz mortal, herioac dembora oroz baitu bothere guré hiltceco, eta biciaren edequiteco, hambatequi mania, eta abertimendia dugun beçala Iencoaren gratia oren oroz, *Omni tempore*, beguira deçagun eta conserua, herioaren oren oroz estatu onian, ené [59]
bidian, eguruquiteco, eta haren colpiarē alegueraqui errecebitceco.

Lekhu huntan berian gure Iaunac auertitçen guitu egon guiten presto orationetan, *State ante filiū hominis*, çaudezté bigilant presto prestoa ené aitciñian ni cien aitciñian nago ikhustē çutiet oro, cer hari cireten, eta çer eguin nahiducien badaquit, ni cien beguien aitciñian ikhuzten banunducié beçala, çaudezté çutic gogoa eman eçacié, beguiraucié galduco çuctiet ené mecia baita herioa, cien aldian da, heldu da, meciaren ondoan heldu nitz, bai juiamendu particularrian, bai juiamendu generalian hilic, edo biciric ené escuetara erorico cirate, eztut ordian eguiñen gratiaric, ez misericordiaric, iustitia handibat eta rigorosbat eguinendut ordiā, Cerua eta lurra deseguiñen ditut, eta cien Arimac, eta cien Gorpitçac sutan eta odoletan eçarrico ditut, *State ante filium hominis,* herioaz orhituric, ené beldurra eduquacie cien bihotcetan, eta forma onian, estatu onian, gratian, bekhaturic campoan iguruçacié cien azquen orena.

Ioan-doné Ioannes Euangelistac beré aldian eztu vtci ahatcera materia saindu, hau orhitu da beré rebelationé, eta visioné handietan bidé Apoc. 3
saindiaz huntçaz erran dianian ederqui, eta sainduqui, *Si nō vigilaueris veniam ad te tamquam fur.* Ezpalin bacité egon bigilant, eta iratçarriric, ginen nuçu çugana, ohoinbat beçala. Guré Iaun Apostolu, eta adesquidé handi honec hitz gutiz, hanitz errandu, *intelligenti pauca* adimendu onac hitz gutiz asquidu eta Arima onac eré Arimaz denian questione, manu gutiz asqui du.

Segurda guré Iaunac beré Apostolier Misterio handiric beré Espi- [60]
ritu saindiaz erakhutxi eta reuelatu ciala, ceren beré Ministré beçala hayetçaz cerbitçatu nahi baitcen, beré legué sacratiaren, eta Euangelio saindiaren mundu orotan barrayatceco, eta beré hitz benedicatiaren aciaren lur orotan ereyteco mania eré emancian eta boteria orori, Ministerio, Officio, eta functioné sacratu haren eguiteco, obratceco, eta exerçatceco, noiz eré beré aho sacratiaz erran betcerayen, *Predicate* Marc 16
*Euangelium omni creaturæ,* predica eçacié ené Euangelioa, eta ené Erresuma, creatura orori : baiña segurnitz bateré etcela haiñ barna penetratu Iaunaren secretietan, nola Ioandoné Ioannes Euangelista, Escritu-

rac eré badio, *Recubuit in cœna supra pectus eius, hic est discipilus, quem*
Ion. 21. *Dominus valdé diligebat,* beré buria paussatu ciala Iaunaren altçoan, eta haren bularretan golcoan, eta hura cela dicipulua, çoin Iaunac handisqui mayté baitcian.

Beharda sinhetsi altço chahu, eta bulhar golco delicatu hartan, dicipulu mayté harc ikhassi, eta ikhussi ciala gauça ederric, eta miragarriric, segurnitz halaber han berian Iaunaren dicipulu digné harc ikhassi eta ikhussi çutiala guri orori, bidi hontçaz, Iaunaren partez erakhussi dutian hitz saindiac, errandudan lekhuan. *Nisi vigilaueris, veniam ad te tanquam fur,* ezpacité egon iratçarriric, ginen nuçu çugana ohoinbat beçala.

Labur laburra Apostolu saindu hunec eguitendu mentioné guré biciaz, eta guré hiltciaz, nola bici behar dugun abertitcen guitu, eta
[61] gaizqui hillen guirela mehatchatcen haren escola, eta haren doctrina saindia mesperecha badeçagu, biciaz dio, *Si non vigilaueris,* ezpacira egoyten bigilantian, eta sentinelan, ezpadeçaçu beguira, eta goarda onsa çuré arima gratian, epacité trauailla onsa Iencoaren baratcian, eta minatcian, haren manu saindiac, eta haren Eliça saindiarenac deuotqui, eta religiosqui obserua, etsaya, baita bekhatia, vtci badeçaçu sartcera çuré Arimarē gaztelian, eta çuré Arimarē camberan, *Veniam ad te tanquam fur,* ginen nuçu çuré edireitera ohoiñ anço, ohoingbat beçala, noiz eré içanen baitcira barnago bekhatian sarturic, ordu hartan, bat batian ez vztian, çuc vste gabiric, ginenitz gauaz, surprenituco cirut, atrapatuco citut çuré bekhatiaren loan, eta lohian, eta beréhala hillen citut, eçarricodut, eta ehortcicodut çuré gorpitça lurpian eta çuré Arima iffernu çolan badea deus, biciaz, edo hiltciaz haiñ ederric, edo garbiric, nola theologo diuino hunen errana eguia bada, den beçala, ençunic, eta behaturic, haren erraney bai biciaz, bai hiltciaz, guiten, othoy, onsa bici Iencoarequila batian haren gratia saindian, affiñ eta ohoiñ trompur hura, herioa gin dadinian, edo egunaz edo gauaz guré contré, guc hura trumpa deçagun eta, ez harc, gu.

Laur Euangelista saindiac arcordu honbatetan dira, guri eracasteco herioa ohoiñbat dela, eztela hari cer fida, trompur bat dela, nor içanenda persona haiñ simplia eta haiñ elguerra, non daquielaric etsaya bortan diala, eztadin egon iratçarriric armac escuan, beré ohoiñaren, eta beré etsayaren beré etchetic, eta beré bortatic accaçatceco, eta
[62] hantic apart Ioan eraciteco, halacoac behardu coffessatu, itxutu dela, erhotu dela etxaya bortan, loac har badeça bada herioa oren oros inguru, inguru guré aldian dago, eta haren veldurra, eta haren memoria galduric bekhatian barna sarturic, lo eguin badeçagu, erhoac, elguerrac, eta galdiac eternalqui içanen guira.

Eztugu cer dudaric har herioa, eta Iaunaren mecia, ohoiña beçala ginendela, lau Euangelistec eguia eder hori erandute, hala dio oraño Ioan doné Petri Apostoliac, *Adueniet dies Domini sicut fur*, ginenda Iaunaren eguna ohoiña beçala. 2. Pet. 30.

Hala dio oraño Ioan doné Paulé Apostoiac, *Ipsi diligenter scitis, quod dies Domini sicut fur in nocte, ita veniet.* Badaquicie onsa, hala nola ohoiña gaüaz desorenian, ez vstian giten baita, hala hala herioa, Iaunaren mecia ginendela. I. Thess. 5.

Badaqui mundiac, eta egun orozco vsantçac emayten du aditcera, communzqui ohoiñac beré iocoa iocatu nahi dianian eta beré colpia eguin, gaüaz ichilic, nehorc ikhussi gaberic, ebilten dela, gaüaz bertceren onac ebasten dutiala, gaüaz ohoiñqueriac, eta gaxtoqueriac eguiten dutiala, ilhumpian gendia lodatçala, etchiac ; eta haciendac arrobatcen, eta ebasten dutiala, ceren egu arguian ezpaitu corageric aguertceco, eta beré colpu gaixtoē complitceco, lotzaz eta beldurres, egu arguiz beré gaxtoqueria eguin baleça haren falta aguerturic, eta iusticiac harturic, eta condamnaturic, beré faltaren punitionetan, edo recompensutan presonteguia, açotia, galera, edo vrquauia errecebileçan bolurbatec ere publiqui bidé handian, nahi dianian arrogatu [63]
marchanta, bideianta, passanta, ata messaiera, cer vsté duçu eguiten diala, bolurrac gordatcenda oyanean edo bertcé lekhu secretu batetan, bidé handiaren aldian, eta noiz eré marchanta, eta bideianta heldu baitira, bolurra eguertcenda armac escuan, hayen aitcinera, eta pistoleta bandaturic, eta daga punta, çunçurrera eçarriric, dio marchantari, dugun molsa edo bicia, dugun vrrea cilharra, dirua, eta hacienda, ordian marchant miserabliac, beré onac galtcen ditu, eta hanitz orduz beré bicia, eta beré onac, iaquin faltaz bolurra bidé hartan gorderic çagoela manera hartan, bai aita familiazcoa, bai marchant passanta galduric, eta arrogaturic, guertatcen dira, baita iratçarriric gaüaz egon ohoiñaren aidura, eta beha, eta bertcia, iaquin faltaz, cein lekhutan, bolurra bidé handian, beha, aiduru, eta goaita çagoen, eta bidé hura vtciric, bertcé bidé onbaten eduqui faltaz.

Beré guisan eta maneran eguitendu beré iocoa, eta beré colpia herioac, ezta halaco ohoiñic, ez eta bolurric nola baita herioa, noiz eré baitcira bekhatiaren ilhumpian, Iencoaren arguia galduric, baita haren gratia, gau hartan çunçurretic lotturic, çuré loric hobenian, larrutcen citu hiltcen citu, eta bicia edequiric, çuré haraguia, eta larria, ohoiñ harc dohaiñ, ez deusian saltcen du lurrari, eta çuré arima gaichoa deabruari, iratçarriric gratian, egon faltaz.

Volur harc bidé handian, egu arguiz, erran nahidut çuré ossaguarriaren hobenian, çuré adiñaren hobenian, çuré placeren erdian, goitatcen

[64] citu eta nahi bacira, eta ez çuré bicia; eta çuré onac oro edequiric, çuré haraguiaz eguitendu lur, eta çuré Arimaz Iffernuco suaren egur, eta bazca.

Neure adisquidia, hementic escola cité, ohoiñbaten, eta bolurbaten artian gaüaz, eta egunaz bici cirela, ohiñac gauaz bolurrac egunaz, trumpatu nahi çutiela, çaudé othoy gaüaz gratian iratçarriric, eta egunaz goitan çuré azquen orenaren beha, hala eguin badeçaçu, herioac emanic eré beré colpu mortala çuré haraguiari, eztu emanen çuré Arimari, baiña, çuré Arimac emanēdu azquen colpia herioari, haraguiaren hiltcian, eta guero, guré Iencoa baita, biciaren eta herioaren Iauna, harc emanendu beré gloria çuré Arimari.

Gaztelu, eta Iaureguy eder, eta bortizbat, etxayac campotic inguru, inguru, assetiaturic eduquiten dianian haren edo bortchaz, edo compositionez hartceco, eta haren guehien, eta nabussy içateco, gaztelu eta Iaureguy haren barnian balin bada garnisoné onbat, guerlaco, eta ahoco munitione franco, eta ororen burian Capitaña, eta soldadoa, badira coraiosac, eta deliberatoac behar denian, onsa deffendiatceco, eta onsa attacatçeco, barnecoac truffatcen dira campocoez, eta azquenecotz Gastelu, Iaureguia, ohorian gulditcenda, eta etsaya, beré pena, eta beré dembora galduric, desohorez betheric, beré gendiarequila retiratçenda.

Baiña Iauregui hartan ezpada armaric, ezpada cer Ian eta edan, ezpada Capitanic, eta soldaduric, edo içanic eré ezpadira coraios, eta deliberatu, eta diren poltroignac, eta bihotz gabiac, adios Gaztelia, adios Iaureguia, *Ville gaignée*, hiria hartuda, etsayac eguinendu Iauregui, eta gaztelu harçatz nahi diana.

[65] Guré Arima da, gaztelu, eta Iaureguy ederbat, eta bortitzbat, momento oroz gaztelu haur, campotic, eta barnetic assetiatuda, attaquatuda furiosqui, eta pausu gaberic, haren etsayac dira, deabrua, mundua, haraguia, eta bertcé etsay visibliac, eta inuisibliac, guerla campotic, eta barnetic, etsay gaixto hec, Iauregui eder hari, Arimari, eguiten duté, hala, nola, Lehoiñ furiosac, eta otso gossé minthiac, ardi gaichoari eguiten baitu, hala dio Apostolu batec, *Tanquam Leo rugiens circuit*
I. Pet. 5. *quærens quem deuoret.*

Baiña noiz eré arima eder haren camberan, gaztelian, eta Iaureguian, munitionia, baita franco, erran nahidut, orationia, bigilantia, humilitatia, eta bertcé bertatiac elguarrequila baitira iuntatcen, noiz eré Capitañ çuhur hau, herioaren, hilciaren memoria, orhitcia, eta veldurra, soldado coraios, resolutu, eta deliberatu hau Iencoaren veldurra edireiten baitira adios campoa, adios etsayac, ohoria barnian, desohoria campoan guelditcenda baiña halaber arima haren, gaztelu Iaureguy haren Camberan, ezpada prouisioneric, ezpada bertuteric, ezpada Capi-

tanic ez soldadoric, ezpada herioaren, hiltciaren veldurric, ez orhitceric, ezpada Iencoaren veldurric, ez amorioric, hartu da Gaztelia, hartu da Iaureguia, Ioanda Arima, galduda arima, *Ville perdüe,* hambatequi, neuré Adisquidia, has, eta akhaba, *A primo ad ultimum,* herioaren veldurra baduçu, asqui duçu, herioaren veldurra ezpaduçu galdu cira.

Arquabusariac churia honquitu nahidianian, eta ehiztariac beré ehicia [66]
caussitu, eta hil, nahi dianiã, batac eguitendu so beré churiari, eta bertciac beré ehiçiari, esquin, ez ezquer, beré beguiac, beré bessoac eta beré Arquebusa makhurtu gabé, eta ordian bai batac, bai bertciac, badulé esperança, norc beré colpia onsa, eta hurosqui eguiñen diala, batac honquituco diala beré churia, eta bertciac beré ehicia : baiña den mendrena beré beguiac apartatcen badituzté batac beré churitic, bertciac beré ehicetic, colpiaren artiquitian dangerosda, lumac haraguia eraman deçan, eta Arquebusaria, beré bala, beré bolbora, beré drageac eta beré pena galduric, confusionetan, eta desohoretan gueldi dadin, eta haren irabacia oro içanen den bi çehabeté sudur, erran comuna den beçala.

Neuré Adisquidia Iencoac mundu huntan eçarri citu onsa biciric, onsa hilçeco, eta onsa hilic, Ceruco gloria eternalaren emaiteco çuré hiltcé onaren pagutan, eta recompensutan hiltcé ona nahi baduçu, eguiçu so ardura, ardura herioari, herioac çuri oren oroz so eguitendu, çuc hari eguiçu so, çuc hura, edo harc çu trompatu behar çutu, locoa eta partida colpubatez doa, edo çuc herioa edo herioac çu trompatu eta enganatu beharducié, ezta itçultceric, ezta bihurtçeric, edo gal, edo irabatz, lehen colpian doa gauça oro, onsa hil bacité, Parabissua çuré gaixqui hil bacité Iffernua çuré hartacotz errãdu ederqui, eta çuhurqui Apostoliac mundu gucier. *Statutum est omnibus hominibus semel* ad Hebr. 9
*mori.* Ordenatu dela guiçon eta emazté orori, behin oroc behar dutela hil, ezta biric, ezhiruric, erranda behiñ, *Semel,* colpu hari ; gogoa emaçu, hari faltaric ez eguiteco, çaudé presto gratian, bekhatutic campoan, [67]
hala eguiteco, herioaz eta hiltçiaz orhitcité, eta colpu hartan iagoiticotz çuré Arquabusac herioaren contré eguiñendu colpu, eta herioaren arquabusac eztu eguiñen colpuric, çuré hiltcian, çuré Arimaren contré.

Æsopus, espiritu aleguera, eta placent harc, cõdatcendu ederqui beré librian, eta beré fabuletan, egun batez lehoiña, baita animal ororen Erreguia, eta noblena eritu cela, eta çahartu, edo aumens eguiñ ciala, eriarena, eta lecé barnabaten çolara Ioanic, han çagoela heda heda etçanic, noiz lo, noiz iratçarriric, lehoiñ hunen eritassunaren berria bertcé animalec entçun çutenian, oroc, norc beré aldian, bedera, bedera, beré visita eman çutela lehoiñ hari, eta oro Ioan cirela haren ikhustera, cer vsté duçu lehoiñ harc, cer finecia, eta ioco eguiten

ciala, Ioan beçanbat, hiltçen çutian oro, eta çuntçurretic loturic, odola orori edaten, eta egosquiten, eta moyen hartçaz eri çela eztacuria hartan, beré chilotic, eta beré lecetic higuitu gaberic, bonachera eguiten cian eta beré dembora onsa, eta alegueraqui igaraiten, animalé miserablé hayen odolaren despendioz, finalqui cer heldu cen? Acheria, baita Animalé ororen fiñena, Ioanda beré tornian lehoiñ hunen visitatcera, eta beré Erreguiari beré eguiñ biden errendatçera, heldu denian, lecé, et chillo haren tinira eta mugala, sobat eguiñic lecé hari ikhussi ditu gaiñeti behera Ioan ciren Animalen hatçac eta herechac, eta eztu ediren, ez ikhussi bateré hatcit, ez herecharic, peti gora, lecé çolatic goiti itçultcen cenic, hambatequi iuiatudu çuhurqui Acheriac
[68] lecé hartrat Ioan ciren Animaliac oro galdu eta peritu cirela ceren ezpaitcen batere goiti itçuli, ez bihurtu, juiatudu halaber, etcela on, eta segur leçe hartã, behera ioaitia, pensamendu hartan çagoela, noizpait hassida Lehoiña mintçatcen, eta dio, ma comere, sarcité, auança cité bertcé oroc, çuc baici ikhussi nuté, neuré ohian, eta visitatu neuré eritassunian, çuc eré ikhus neçaçu, acheriac arrapostu emaitendu ederqui, lehoiñari, eta dio, ené Erreguia, eri bacira, sendo cité, ordu honian, hementic çuré ikhustiaz contentniz, enaité haboro auantça, bidia ikhustendut çuganat giteco, baiña eztut ikhusten bideric çuganic hunat giteco, Iencoa lagun daquiçula, eta sendo çitçala, çuganat gin direnac, giteco balira, bat eliteçu gin, guisa hartan acheriac beré bicia salbatu cian, eta itçuli guibelerat.

Neuré adesquidia, guré aitcinecoac oro Ioan dira, hil dira, gu eré hillen guira, eta guré ondocoac eré bai, behiñ hil dira seculacotz, bat ezta itçultçen herioaren chilotic, eta hobetic, behiñ hari, othoy gogoa emaçu, ordian falta eguin badeçaçu, iagoiticotz galdu cira, eta azquen oren hartan, çuré azquen urhatssa, eta Iaucia, onsa eguin deçaçun, curé bici orotan prepara cité çaudé sentinelan, çuré dembora orotan eztuçu behar ikhassi lectioné baicoitzbat baici, horida onsa hilcia, ikhas eçaçu onsa çuré lectionia gaüaz, eta egunaz, orena gin dadiñiã, çuré lectionia onsa ikhassiric, eta onsa erranic, Iencoa baitan onsa hil citian, eta ceren lectione hori ecin ikhasten baitigu, guré bician, herioaz ezpaguira orhitcen, bertcé eguitecoac oro vtciric ala part, educaçu, çuhur
[69] bacira, oren oroz, çuré hiltciaren, eta çuré herioaren memoria, eta veldurra, çuré beguien aitciñian, eta çuré Arimaren camberaren erdi erdian.

Laborariac beré elguian, beré oguia, edo artoa vrté batian galçen dianian, harria, chicherra tempesta, oragia, odeia, eta lanoa dela causa, eztu galtçen hargatic beré esparantça, ondoco vrtian beré damia, eta beré galtcia vsté du reparatuco diala, vrtia gin badadi aberatz, eta prospero.

Arçaignac mendian beré ardia, eta aharia vrté batian galduric eré, edo berac hillic edo otsoac, eta hartçac Ianic, eztu galtcen beré coragia, eta beré esperantça, vstez ginen den vrtian, guehiago fortuna, eta prosperitaté vkhanen dian beré Ardietan, eta beré aharietan.

Erreguiac, Princiac, Capitaigñac, Soldadoac, beré combata, eta bataiila guerlan egun galduric, eré vstedu biharamenian, dicha, eta fortuna hobé, vkhenen diala, eta egun haren etsayac badu hartan auantailla, harc bihar, hartan vkhenen diala.

Iocalariac beré urhia, cilharra, eta morsa oro galdu dianian, eta iocatu, edo cartetan, edo datoetan, edo bertcé çoinbat iocotan, badu esperantça, lehen iocoan, iocatu cian dirua, irabacico diala, eta nola iocoa, eta armac baitira erorten behin aldé batiala, guero bertciala, Iacolariac, eta soldadoac, badutė esperantça, egun içanic eré malhuros, bihar içanen direla dohatsu eta huros, bata beré Iocoan, bertcia beré armetan, hala dio eré poetac latinez, *Victorem a victo superari sæpe videmus,* ikhustē dugu hanitz ordus garaitiac, garaiçalia, garaitçen diala hitzbatez hanitz erran deçadan ezta mundian gauçaric haiñ gal- [70] duric, eta desperaturic non eztiā cerbait erremedio, eta confortu, herioac baici harc eztu, eta ez vkhenen, hargatic, neuré Adisquidia, çaudé beha, ceiñ aldetaric ginén den, behiñ ginen da, baiña ez guehiago, behiñ hartan, haren colpiac atrapatcen bacitu estatu onian, gratian, Iffernuaz, Deabruaz, ikhatiaz, eta herioaz, iagoiticoz truffatuco cira, Aingueruē artian, Arima hurosen artian, iarriric egonen cira. Baiña haren colpiac estatu gaixtoan, bekhatian, atrapatçen bacitu, erraçu adios, çuré Paradisuco parte onari, eta segurta cíté iffernian edirenen duçula Cambera gorribat, oro suz eguiña, eta han iagoiticotz chispilduric, eta erreric egonen cirela gauaz, eta egunaz, erraiten dian beçala Escritura saindiac, minço delaric Dæmonioez, eta Arima damnatuez, *Cruciabuntur die, ac nocte in sæcula sæculorum,* Turmentatu içanen direla sæculacotz, gauaz eta egunaz.

Hala nola erran baitu, mintço delaric Aingueruez, eta Àrima benedicatiez, hurosez, eta salbatiez, Propheta Royalac, *Beati qui habitant in domo tua, Domine, quoniam in sæcula sæcularum laudabunt te.* Iauna huros dira, çurequila çuré Eresuman, çuré Etchian, çuré Camberetan, çuré Glorian egoiten, eta habitatcen diren gendiac çeren halacoec, eternalqui benedicatuco çutié, eta laudatuco.

Hautia guré da, edo Paradusia, edo Iffernua, Paradusia nahi dianac, orhit bedi beré hiltciaz Iffernua nahidianac eguin deçan lo aleguetaqui beré hiltciaz orhitu gabé salbatu nahi denac, eta damnatu nahi denac, eztiro ediren conseillu, manu, edo erremedio hoberic, enia baiño. [71]

Nahi nuque Guiçonac, eta Emaztiac, goician beré ohetic ialquitian,

pensamendu hau, beré gogoan harleçan, egun aguian, arratssa, eta ilhuna gabé, neuré oherat Ioan gabé, hillen nitz deçadan iguruqui neuré orena estatu onian.

Nahi nuque halaber, bai Guiçonac, bay emaztiac, arratsian, ilhunian, oherat loaitian, beré bihotcian, eta beré Ariman eduqui leçan abisu on hau beré buriarequila, aguian bihar goicianneuré ohian hillic edirenen nuté aguian gaur hillen nuté edo hillen nitz, egon behardut estatu onian herioaren aiduru, cer hel eré nagoen presto, enian usteric hel eztaquidano, hala haridiren guiçon eta emaztiac, edo oro, edo habo roac salbatiac doaça, hala hari eztiren Guiçonac, eta Emaztiac, edo oro, edo haboroac galdiac, eta damnatiac doaça, eta ceren hala haridirenac baitira guti, eta hala arrieztirenac, hañitz, guti dira salbatiac, eta
Math. 20 hanitz damnatiac, Euangelistac erraiten dian beçala, *Multi sunt vocati, pauci vero electi.*

Figura, eta parabola ederbat dago iarriric Escrituran S. Matheu baitan, çeren onsa heldu baita bidi hunçaz ikhusi behardugu ceiñen ederqui, espiritualqui éta goraqui mintço den, onsa hiltceco bidiaz, baita, hiltciaz, eta herioaz orhitcia.

Math. 25 Dio Euangelistac parabola sainctu hartan, *Simile est regnum Cælorum decem virginibus quæ accipientes lampades suas exierunt obuiam sponso, & sponsæ quinque autem ex eis erant fatuæ, & quinque prudentes.* Cetuco Erresuma hamar virginac idurida, eta hayē paré da, hamar vir-
[72] gina hec Ioan ci ren beré lampac harturic espos, eta esposaren bidera, hayen beha egoitera, eta hayer beré lampequin ohoré eguitera, hamar virgina hetaric bortçac heldu ciren erhoac, eta elguerrac, eta bertcé bortçac, çuhurrac, dicretac, eta modestac, bortz virgina erhoec etçuten cōduric eguin, lampen hartcian berequin olioric hartcera, baiña bortz virgina cuhurrec eguiñ çuten ordu onez prouisioné gauça guciez eta beré onciac eta lampac olioz, onsa garnituric eduqui, virgina hec hābat çuhurrac, nola elguerrac, aidura daudiala, eta beha espos esposaren, hayen asqui orduz gin, edo arriuatu faltaz egunaz gau ilhuna, eta beltça bilhatu çuten, hambatequin hamar virgina gaicho hec, nola berandia baitçen, eta desorena, loac inganaturic, eta trompaturic, oherat Ioan ciren, gaüerdiaren ingurutan açantz, eta oihu han dibat heldu da erraiten dialaric, espos esposac huna dira, ialqui citezté hayen errecibitcera, ordian virginac oro çutituric, norc beré lampac, çuhurrec, bereré ornatu çutien, eta preparatu, virgina elguerrac hassi dira erraiten çuherrer, igucié parté cien oliotic, guré lampac hil dira, eztugu arguiric, baiña çuhurren arrapostia çen hau : çoazte ordu onian marchanten botiguetara, eros eçacié guc beçala, guretic cier parté emanic, ezcunduqué asqui cien, eta guré, arté hartan, elguerrac olio erostera

ioaten cirela, espos esposac, eta hequi la bortz virgina çuhurrac eztei-tan sartu dira banquetian, eta ostatiaren portalia guiltçaz cerratu, *Clausa est Ianua* noizpait bortz virgina erhoac heldu dira oihuz portaliaren truccatcera, Iauna, Iauna, othoy idequiçaguçu portalia, baina barneco [73] arrapostiac dio, çoazté passeura, etçutiet eçagutçen, egon citezté bigi-lant, eta presto, ceren ezpaitaquicié eguna ez orena, *Nescio vos.*

Hamar virginen Euangelioa eçarridut eusquaraz ossoqui, çeren ederra baita, eta hantic esperança baitut idocico dugula gauça ederric ené onsa hiltçeco bidiaren fauoretan.

S. Augustin Eliçaco lehen doctorac dio bortz virgina çuhurrac sal-batu cirela, eta Esposaren ezteietan vkhen çutela beré partia, çeren beré virginitatia Iencoaren amorecatic, baitçuten beguiratu, eta ez mundiaren amorecatic, oro Iencoagatic, eta ez deus mundiagatic.

Halaber bortz virgina erhoac galdu içan cirela, ceren beré virginita-tia bai tçuten conseruatcen ez Iencoagatic, baiña munduco ohoriagatic, oro mundiagatic, deusere Iencoagatic, bortz virgina çuhurrac salbatu cirela humilitatia çela causa, eta bortz, virgina elguerrac galdu, vrguil-lia cela causa, hala dio Doctor saindiac. *Sed quia ista continentia partim* Hom. 5 *coram Deo fit, ut illi placeatur interiore gaudio conscientiæ partim coram* Aug. de verb. *hominibus tantum, vt gloria humana capiatur, quinque dicantur sapientes,* Domin. sec. Math. *& quinque stultæ, vtræque tamen virgines, quia vtraque continentia est,* Serm. 22 *quamuis diuerso fomite gaudeat.*

Virginitatia, eta chahutassuna, bi aldetic consideratcenda, edo con-cientiaren barneco placeraren, aldetic, Iencoaren amorioz conseruatçen denian, edo munduco aldetic, noiz eré mundiaren eta guiçonen amo-roz beguiratçen baita, hargatic bortz virginac ciren çuhurrac, eta bortz erhoac, oro virgina baiña bortcec Iencoa gogoan, eta bortcec munduco laudorioac gogoan.

Eguia hori hala dela, segurtatçenda, ceren doctor saindu harc berac, [74] erranden lekhuan baitio, *Multi enim quamuis de Christi bonitate pluri-mum sperent, gaudium tamen non habent, dum continenter viuent, nisi in laudibus hominum.* Haiñitz personac esperança duté Iencoaren ontassu-nian, eta misericordian, beré virginitatian eta puritatian baiña bere bihotcetan, eta concientian ez hartçen placeric, munduco laudorietan baici aguerida hantic, hamar virginen fortuna bortz çuhurrac saluatu humilitatiac, bost elguerrac galdu vanitatiac.

Galda baneçaçu nontic heldu çen hamar virgina hayen dicha eta ventura differenta, erranendut, bortz çuhurrac orhitu cirela herioaz eta bortz erhoac etcirela orhitu herioaz.

S. Gregorio doctorac dio eztela asqui gaizquiric ez eguitia, saluatceco, baiña oraño behardela onsa eguiñ, euitatu bekhatu mortalac, eta eguiñ

obra onac, *Minus est mala non agere; nisi etiam quis studeat bonis operibus insudare :* Gutiché dela gaizquiric ez eguitia, bat bedera, ezpadadi enseia obra onen eguitera Doctor saindu harc berac dio oraño erran den lekhuan castitatia, virginitatia eztela on, gutti dela, ez deusa dela, castitatia, eta chahutassuna gabé. *Nec castitas ergo magna est sine bono opere, nec opus bonum est sine castitate.*

Hementic neuré arraçoiña idoquitendut bortz virgina çuhurren aldé, eta bortz virgina erhoen contré, eta diot bortz virgina çuhurrac, ezçutela solamente, haraguiaren bekhatia euitatu, faltaric ezçutela beré ohoriarē cōtré eguin baina guehiago beré obra hónetan, misericor-
[75] dian, caritatian eta bertcé actioné honetan perseueratu cirela beré lāpac olioz betheric, pizturic eta arguirica presto eduqui çutiela, hartacoz espos esposac gin cirenian, ediren çutiela bekhatu gabé, eta obra honetan, eta forma, eta dispositioné hon, eta eder hartan ediren çutialacotz, errecebitu çutiala beré companian, eta iuiatu digniac beré ezteyen banquetian hayequila batian placer hartceco.

Eta çeren bost virgina erhoec vkhanic eré beré ohoria, eta beré virginitatia osso, ezpaitcuten beré lampetan arguiric ez olioric, erran nahidut, ezpaiciren emplegatcen obra honetan, misericordian caritatian, eta bertcé actioné ederretan, eta meritorio direnetan, hori dela causa priuatu içan, ciren espos, esposarén compagniatic, eta hantic, eta hayen ezteyetaric, desohoré handirequi accaçatu.

Erran den beçala, saluatceco, bi gauça beharda, ez eguin bekhaturic, eta eguin obra honic, bost virgina çuhurrec, bi gauça hoc baçutien, baina bost virgina erhoec, etçuten bi gauça hetaric bata baicy, baina seconta ez, çeren hayen lampac hilic çaudian, olio gabé, argui gabé, hori da arraçoiña, çergatic, bost çuhurrac baitciren salbatu, eta bost erhoac damnatu.

S. Gregorio doctoraren pensamendu saindia cōfirmatçendu guré
Math. 12 Iaunaren erranac, guisa hontan, *Sint lumbi vestri præcincti, & lucernæ vestræ ardentes in manibus vestris.*

Cien haraguia, cien erraignac, cien gorpitçac, onsa guerricaturic iduqui itçacié, cien haraguiaren acculiac, eta tentationé gaixtoac, daudian, onsa bridaturic, esteccaturic, eta mortificaturic, ez eguin bekha-
[76] turic, eta guehiago cien lanternac, eta lampac ez beudé pisturic, eguin beçaté argui mundu orori, eguin eçacié obra honic, mundu gucier, cien obra honen moyenez eman eçacié exemplu honic, eta çeren hori, amorecatic, mundu guciec, chipiec, eta handiec, guiçonec, eta emaztec, cien obra honac, cien exemplu honac ikhussiric, eta admiraturic, glorifica deçaten, lauda, mayta, eta adora, ené ayta eternala, çeruco, eta lurreco Iencoa.

Soguiçu nola nabussia, eta dicipulua, biac accordatcen diren bertcé gaucetan beçala, pundu huntan eré eta biec bat erraiten, saluatceco bi conditioné direla necessario, bekhaturic ez eguitia, eta obra honic eguitia, eta çeren ezpaita damuric, ez desohoreric, gauça ederren eta honen, biguetan, erraitia, *repetita placent,* biguetan erranendut, virgina çuhurren ventura eta fortuna hurosa içan cela cerē espos Iaunac ediren baitçutian gau erditan, bekhatu gabé, eta obra honen barnian.

Halaber bost virgina erhoen ventura, eta fortuna idorra, eta malhurosa içan cela, ceren ediren baitçutian bekhatu gabé, baina ez obra honen barnian.

Hemen soguiçu orano, nola ederqui guré Iaunac explicatcen dian doctor handi haur, eta doctorac guré Iauna.

S. Gregorio doctorac aipatu, eta icentatu dugunac dio guehiago, dialaric explicatcen hamar virginen Euangelio saindia, gendé batçuc, beré buriac abstinentia,˜ eta continentia handibatetan mãtenatcen dituzté, beré gorpitzac, beré haraguiac, açotatcen eta mortificatçen, beré esperançac cilian eçarten, beré obra hon, eta triuaillu honegatic, munduco, [77]
eta lurreco ohoriac, eta laudorioac reffusatçen, halacoec beré ohoria, eta beré gloria eztuté eçarten guiçonen mihian, eta ahoan, baina beré obra honen meritia, eta ohoria beguiratçen beré arimaren eta concienciaren camberaren barnian. *Hi nimirum gloriam suam, non in ore hominum ponunt, sed intra conscientiam contegunt.*

Bada bertcé gendé batçu, eguiten baituzté obra honic, eta ederric, beré gorpitçac, beré haraguiac; beré passioniac bridatçen, garaiten, eta manatcen, baina guero, beré obra hon eta ederrē ondoan, mūduco ohoria, eta laudarioa chercatcen, eta desiratcen, oro mundiagati, deu˜ seré Iencoagati, halacoē obra, hilac dira, alferac, eta inutilac. Hala dio doctor harc berac, erran den lekhuan, *Sunt plerique qui corpus per abstinentiam affligunt, sed de sua abstinentia humanos fauores expetunt.*

Hala guertatu cen bost virgina çuhurrer, hec beré ohoria gincoagati beguiraturic, espozaren banquetian honqui gin içan ciren.

Eta ceren bost virgina erhoec, beré ohoria mundiagati baitçuten beguiratu, eta ez Iencoaren gloria gati ; espos, espozaren, gratia honac galduric, portalia ediren çuten cerraturic, eta galdu miserablequi espos, eta espozaren banqueta, eta bona chera handia.

Neuré adisquidia erranen duçu, sobera lucé niçala hamar virgina hoyen istorian, bada orano behar duçu pacientia hartu, nahibaduçu ikhussi istoria hontan onsa hiltceco bidiaren secretu, eta abantailla honbat, eta ederbat, S. Augistin, eta S. Gregorio, biac arcord dira, baquian dira, hamar virginen eguitecoan, hetaric landan emanendut [78]
neuré abisu eta conseillu hona, eta diot S. Augustin Iaunarequin batian,

bost virgina çuhurrez, endelgualçen direla, arima salbatiac, eta bost virgina erhoez, eta elguerrez, arima damnatiac, Iencoari datsala, eguitecoa erditi Ioan dadin, hain veldurniz, damnatien parti handiago, içanen den, eciez salbatiena, cerē erran baitu Escriturac, Math. 25. *Multi sunt vocati, pauci vero electi,* deitatiac hanitz direla, baina bereciac gutti.

Ené pundura gin nadin, bost virgina çuhurrac dira salbatiac, eta Hom. S. August. de verbo Domini secundum Math. bost erhoac damnatiac, hala dio S. Augustinec, *Decem Virginum quod quinque admittuntur, quinque excluduntur, bonorum, & malorum discretionem significat.*

Onsa hiltceco bidia, hementic poroga deçadan, erayten dut, eta eranendut, guré azquen orena gin dadinian, Iesv-Christo Iauna baita guré arimen esposa, iuiamendu particularian ginen dela guré arimen iuiatçera, eta iuiamēdu generalian, guré arimen, eta guré eta guré gorpitcen, hilic, edo biciric seculacotz iuiatçera, iustoac edirenen ditu gratian, bekhatu gabé, beré lampac pizturic, halacoer emanendu bere gratia, eta beré gloria.

Gaixtoac edirenen ditu bekhatian, beré lampac hilic halacoer emanendu punitioné ifernuco su eternala, iustoac vkhanendu Paradusia, ceren herioaz orhit içan baita, bekhatoriac vkhanendu ifernua, çeren herioaz ezpaita orhit içan ené érrana hala dela porogatçendut, loa, eta herioa biac bat dira, differencia ezta handi, poetac eré hala dio, *Stulte quid est somnus gelidæ nisi mortis imago.*

Erhoa, çer uste duçu dela loa, herioaren imagina eta figura baicy,
[79] guiçona, eta emaztia loac artuz gueroz, beré lotic irat çar artino, hilac dira, sendimendu oro galduric, hila ere, hilez gueroz, considera badeçaçu hilaren gorpitça, azquen iuiamendia gin artino, loan dago, hila da, eguia da hilaren arima bici dela, ecin hiltçen da, nola baita immortal beré naturaz, hambatequin loa eta herioa biac bat, arima eternalqui bicicoda Paradusian, edo Infernian, edo Purgatorioco penetan, gratian mundu hontaric partituric, beré bekhatien penaren pagatçen beré çorrac paga arteno.

Escritura saindiac eré loa eta herioa biac bardin estimatçen ditu, noiz eré Lazaro, Iesv-Christo. Iaunaren Adesquidé handia, Maria Magdalena, eta Maria Martha anderen anayé propia, hilez gueroz guré Iaunac piztu, eta resuscitatu baitcian beré, hitz saindiaren vertuté han-
Ioan. II. diaz, guré Iaunac erran cian, *Lazarus amicus noster dormit, sed vado, vt a somno exciten eum.* Guré adisquidia Lazaro lo dantça, baina banoa iratçar deçadan. Lazaro hila cen, ala baina lo çagoela dio Escriturac, nic eré diot loa eta herio biac bat direla.

Iondoné Paulé Apostoliac eré erraytendu loa, eta herioa, biac bardin

direla. *Nos qui bibimus, qui residui sumus in aduentu Domini, non præueniemus eos qui dormierunt.* Ad Thess.

Hilac, hil dira, guré aitcinecoac Ioan dira, gu orano bici guira, mundian guira, baina Iaunaren eguna gin dadinian, lo dançanac eta gu bardin Iaunaren aitcinera helduco guira, soguiçu nola Apostoliac, loa, eta herioa biac baten hartçen dutian.

Iaun apheçac eré aldaré saindian, meçaren sacrificio saindia Ienco handiari, beré, eta beré populiaren partez, hilegatic, eta biciegatic ohorescatcen dianian, beré azquen mementoan erraitendu, *Memento etiam Domine famulorum, famularunque tuarum, qui nos præcesserunt cum signo fidei, & dormierunt in somno pacis.* Iauna orhitcité çuré çerbutçariez, mutil, eta nescatoez, guré aitcinian Ioan direnez, fedé honian, eta lo honian lo eguiten dutenez. Soguiçu nola Eliçac olhoy eguiten dian meça saindian hilegatic, eta nola herioa, eta loa, bata bertciaren hartçen dutian. [80] In can. Missæ.

Hamar virginen historian eré irakhurtçen dugu : *Dormierunt omnes, & dormitauerunt,* oro loac hartu çutiala, hambat çuhurrac, nola erhoac, hantic errā nahida, iustoac, eta bekhatoriac oro reserbu gabé loac hartuco dutiala, oro hilen direla, ordonançac erran dian beçala, *Statutum est omnibus hominibus semel mori,* lehen eré passage haur allegatu gundian Apostoliac erranic, ordenatu dela guiçon, eta emazté orori, behin hil behar diala, ordu hartan iuiamendu particularian, eta generalian, espos Iauna, baita Iencoaren semia, jugé ororen jugia, Iaunen Iauna, ama virgina baten sabelian gugati guiçon eguina, ginenda, eta arima miserabliac, eta galdiac, baitira rapresentatcen, virgina elguerrez beré lotic iratçarriric accaçatuco ditu beré ezteyetaric, beré mahañetic eta beré gloriaren portalia çerraturic, igorrico Ifernuco sura, eta penetara. Hala nola arima hurosac, eta salbatiac errecebituco baititu beré ezteyetara, beré mahañera, eta beré gloriaren portalia idequiric, eta çabalturic, emanen çelian seculacotz beré contentamentu, eta felicitaté æternala, çeren hori? çeren arima honac, ardura, ardura beré hilciaz orhituric, edirenen baititu espos Iaunac hiltcian, bekhatu gabé, beré lampac pizturic gratian barnen, eta aldiz arima gaxtoac, beré hilciaz, iagoiti orhitu faltaz, edirenen baititu, gratiati campoan, bekhatiaren loan, eta lohian. Ad. Hebr. 9. [81]

Hambatequi neuré adesquidia, iaquin eçaçu segurta cité esteçaçula dudaric har, salbatiac salbatu direla, beré herioaz, eta hilciaz ordu honez orhitu direlacoz, bost virgina çuhurren paré, eta arima damnatiac, damnatu direla, bost virgina erhoen paré, beré herioaz, eta beré hilciaz, ordu honez orhitu faltaz. Bide haur çombat hon, eder, eta segur den, hortic iuiaeçaçu, eta nahibacira onsa, bici onsa hil ; eta espos

launaren banquetian plaçer harlu seculacotz, çoaça chuchen bide hontçaz herioaz orhitcité, *Memorare nouissima tua, & in æternum non peccabis.*

Egunbatez Espagnol bat beré bidian çoala edirē cian horbat bortabatetan, eta horac vssiqui cian Espagnola igaraitian çancotic, horalen contré asqui onsa deffendiatu faltaz, bertcé egun batez Espagnolac hor hura bera ediren cian borta hartan berian lo çantçala eta ezpata baitcian beré saihetxian, idoquiric eta buluciric beré maguignatic, eta beré furreuotic, hora hilcian, ezpata colpubat emanic, eta guero ikhussi cinian hora hilic, edo hilçen, erran cian horari, beré lenguagian, Espagnolez, *Inimigos tienez, é dormés,* erran nahi baita guré lenguagian euscaraz, etsayac vkhen eta lo eguiten duc.

Arraçoin cian Espagnolac hala erraitera horari, çeren etsayac dutia-
[82] nac, ezpaitu behar lo eguin, baina bai egon iratçarri, çoin aldetic ginen den egunaz, edo gaüaz, haren attaquatcera.

Bada neuré adesquidia, herioa baita guré etsaya, eta Iaunaren mecia, eta haren mandataria arraçoin vkhenendu çuri, eta niri, erraiteco, gin dadian, ezpaguité egon presto gratian haren aiduru eta beha, *Inimigos tienes, y dormés,* etsaya oren oroz bortā dugu, guré etchian dugu, guiten egon prest, gratiā, nahi ezpadugu ikhussi guré arimen hilcia, galcia, eta ruinamendu totala.

Æsopus, filosopha eder, eta maitragarri harc dio, cicada deitatçen den hegaztin, eta chori cantaçalé harc, vdan beré dembora oro, cantuz, eta alagaranciaz, emplegatcen diala, eta inihurria baita, animalé chipibat, eta çuhurbat, beré vda oro emplegatcen diala, triuailluz, eta penaz prouisioné eguiten, eta bazca biltcen, beré neguiaren onsa igaraiteco, gossiaren contré, eta guero neguia heldu denian, cicala elguerra gossiac hiltcen diala, vdan, neguiaren igaraiteco, beré bazcaren biltu faltaz. Baina gauça contria helçen dela inihurriari, nola harc vdan çuhurqui, eta ordu honez beré bazca, eta prouisionia eguiten baitu, beré neguian, alegueraqui emplegatcen diala, cicada neguian gossiac hiltçen, inhurria neguian assiac, eta bona cherac, entertenitcen, eta allegueratcen.

Hala dio philosophac beré fablian : *Cicadæ olim æstate assiduis cantilenis indulgebant, formicæ vero laboribus, fructibusque colligendis studebant, hieme aduenïente, cicadæ fame perierunt, formicæ vero, ex ijs, quæ collegerant vescebantur.*

[83] Neuré Adisquidia, hala içanenda arima honez, eta arima gaixtoez, mundu hontan guireno, bici guireno, vdan guira onsa guira ginenda neguia, ginēda herioa, ezpadeçagu ordu honez eguin prouisioné obra honez, ezpaguité ordu honez hilciaz, eta herioaz orhitçen, guré arimac

bertcé mundian gossiac hilen ditu, Iaunaren auharian eztugu vkhanen parteric, ez bochiric cicada miserablé, eta elguer hayer, heldu cen beçala, helduco çaucu, guri eré.

Hala nola segur baita, inihurriac beçala eguin badeçagu, gure vda, guré gaztetarçuna, emplega badeçagu, obra honetan, Iencoaren çerbutcian, gin dadinian guré neguia, herio beltça, hotca, eta tristia, vkhanen dugula Iaunaren auharian guré parte hona, ohoré, laudorio, benedictioné, gratia, eta gloria, halaxeman cian beré promesa guré Iaunac beré Apostolier, eta hayen personan guri orori, bat bederari; *Gaudete & exultate quoniam merces vestra copiosa est in Cælis.* Ené Apostoliac, ené Dicipuliac, ené Fidelac, eta leyalac, cien paguia, cien recompensia, celian dago handiric, eta çabalic, cien aiduru, cien beha, edukhacié hon amorioan, ené cerbutcian, ené beldurrian, ené leguian, eta Euangelioan, ez branla, ez cordoca, ez cambia, ené pian, enequin, enegatic, bicitçeco, eta hilçeco hartu ducien deliberamendu, eta resolutioné saindia. Math. 5.

Coroa irabaci nahi dianac, behardu onsa combatitu mundia, deabrua, haraguiá, eta beré passioniac oro, beharditu, gormandatu, açotatu, crucificatu, eta garaitu, berteela, eztuqué bertcé mundian Coroaric, hala errandu Apostoliac, *Non coronabitur nisi qui legitime certauerit,* ezta coroatu içanen coraiosqui eta legitimoqui combatitu eztena.

Neuré adisquidia ciren othoy, mundu hontan inihurria iduri, inihuria- [84]
ren paré eguiçu othoy prouisione obra honez ordu honez, hurac baituco çautçu bertcé mundian, Iencoarē aitcinian, eta Ainguririen aitcinian, Ainguriē oguia, çuré gogara, placer duçunian ianen duçu.

Et cirela, othoy, cicada elguerra iduri, cicadaren paré, chori erho hura imita badeçaçu, mundu hontan, iaquin eçaçu, Luciferren oguia, baita Ifernian, suz, eta khez eguina, içanen dela seculaçotz labé gorri hartan, çuré oguia.

Eta çeren communsqui herioac guré arimari edequiten, edo emaiten baitu beré Coroa, edequi eztiçaçun pundu hertsi hartan çuri çuré arimarena, herioaz orhitcité ahal beçain ardura, prepara cité aicinetic, bilhoa vrdintcera, eta churitcera vtci gabé, cer guisaz, eta nola, harequila comparituco ciren, nola haren colpu mortala errecebituco duçun, nola haren so beltça velçuri, odeicia, eta beguitarté ichussia, eta horriblia, sofferituco duçun, pensamendu, eta meditationé saindu haur, çuré gogoan eduqui badeçaçu eçarniro ehun, hamarren contré, edo mila ehunen contré deabruaren despit, bekhatiaren despit, herioaren despit, çuré arima mundu hontaric, gratiaz, eta coroaz beteric, çelurat ioanen du.

Baina medailla bertcé alderat itçul deçadan, enuqué nahi apostatu

biga, milaren contré çuré gratiaren eta gloriaren aldé, ezpaduçu ardura herioa bihotciā, eta gogoan ceren, neuré espissoa, veldur niz gal neçan, eta çuc, çuré arima, nic daducat fermoqui, eta fedé hartan
[85] nahinuçu bici, eta hil, herioaz orhitçen eztiren gendiac oro, galdiac, eta damnatiac direla.

S. Augustin Iauna da ené bermia, eta ené autora rencontru hontan, erraiten dialaric ene aldé, eta ené fauoretan, *Vix potest bene mori, qui male vixerit, & vix potest male mori, qui bene vixerit*, nequez, eta borchaz gaixqui hiltçen ahal da, onsa bici içan dena, hala nola, nequez eta borchaz onsa hiltçen ahal da, gaixqui bici içan dena.

Eta nola quasi imposible baita, nehor onsa bicy ahal dadin, herioaz orhitu gabé, hargati diot, miraculuz campoan, impossiblé dela nehor onsa hil dadin herioaz orhitu gabé, eta herioaz orhitçen dena gaixqui hil dadin.

Guré Iaunac orano egun batez itxu sortuçenbat arguitu cian, eman beré vista, beré ikhustia. Escritura saindiac dio, Euangelioan agueri
Ioan. 9. den beçala, *Expuit in terram, & fecit lutum ex sputo, & liniuit lutum super oculos eius :* thu eguin ciala lurrari, eta thu hartçaz lohibat eguinic lurrian, itxu haren beguiac, lohi hartçaz busti, eta vrintatu çutiala, eta guisa hartan itsua arguitu, vista & ikhustia hari emā,

Cer faiçoin, eta çeremonia dira hoc? guré Iaunac etciana asqui boteré itxu haren arguitceco lurrari thuric eguin gabé, bai, bacian asqui boteré, çelia, lurra, laure elementiac, hitz bacoiz batez eguin ditu,
Psal. 148. *Dixit et facta sunt, ipse mandauit, & creata sunt,* errandu, eta eguin círen, manatudu, eta creatu ciren baina ocasioné hontan, guré Iaunac thuz eta lurrez eguindu lohibat, orhebat, lohi eta orhé hartçaz, itxu harē beguiac sendotu, eta arguitu, eracusteco hari, nontic ialquiten cen,
[86] norat itçuli behar cian, lur çela, mortal cela, orhit ladin beré herioaren lohiaz, eta munduco vrguillia, eta vanitatia mesperechaturic, onsa hiltceco bidia, herioaren memoria, beré actioné ororen guida, eta regla har leçan.

Neuré adisquidia, bekhatiaren loac, har etcitçan edo hartu baçutu, hantic ialqui citian, çuré herioaren lohiari eguiçu so ardura, lohi harcaz çuré beguier argui eguiçu, argui ororē arguia, eta vthurria, baita Iencoa, nahi baduçu ikhussi bertcé mundiā, celuco Eresuma eternal, eder, eta hādi hartan.

Escritura saindian ikhussi dugu passagé eder asquï porogatceco, onsa hiltceco bidia dela herioaz orhitcia, hambat legué çaharrian, nola graciazco leguian, baina orano dugun ikhussi bidi honcaz eliçaco doctor saindiac nola minçatu diren beré pensamendu, eta meditationé saindietan.

S. Bazilo handiac dio, eta othoy, behacité haren abisu honari, nahi bacira onsa biciric, onsa hil, *Si quando te senseris ad aliquod prouocari peccatum, ad mentem reuoca, formidabile illud, nec vlli mortalium tolerabile Christi iudicium, & hoc quasi freno animum cohibe.* Bekhatu eguiteco voruntatia, eta intentionia iagoiti gin badaquiçu, bekhatura erorteco tentationiac sæcula, attaqua bacitça eçarçu çuré gogoan, çuré beguien aitcinian representa eçaçu Iesv Christo Iaunaren iuiamendu icigarria, horriblia, eta latça, eta brida harçatz, çuré tentationearē acculiac bridaturic, çuré espiritua, çuré arima educcaçu Iencoaren leguiaren pian humil, eta captiuo, eta çuré haraguia den humil, eta nescato arimaren leguiaren pian. Hom in Psal. 33.

Ezta moyenic juiamendiaz orhit citian, herioaz orhitu gabé, biac, bata bertciaren ondoan heldu dira, bataz orhit bacité, bertcia, etçauçu ahatçeco, bata duçunian gogoan, biac han diraté, çaudé han, eta erremedio hoberic eztucu adirenen, bekhaturic ez eguiteco, eta onsa hilceco, nola herioaz orhitcia, nahi baduçu onhetsi S. Bazilo Iauna. [87]

S. Hieronimoc eztu guitiago erraiten pundu hontan, *Siue comedam, siue bibam, siue aliquid agam, semper insonat auribus meis vox illa horrifica, surgite mortui, venite ad iudicium.* Ad. ver. lapsam. Cap. 8.

Ala niçan neuré Ianian, edo edanian, edo bertçé çer nahi baita lanian, musica, airé, cantu, eta botz tristé haur neuré beharrietan, beti ençutendut hãtic ecin accaça dirot, hilac çuti citezté, ciaurizté ené juiamendiaren ençutera. Cer soldadoa çen doctor saindu haur, ian edanac ez deusec eré haren gogotic ecin idoquiten cian herioaren, eta juiamendiaren memoria, hala eguin baguendeça, erran niro oren honian sorttu guinela, oren hobenian hilteeco, eta hala eguiten eztianagatic, erranendut, euãyelio saindiac, Iudas traidoriagatic errandiana, *Vœ homini, per quem filius hominis tradetur, bonum erat ei, si non natus fuisset homo ille.* Maradicatu dela guiçona, coignec guiçonaren semia tradituco baitu, eta salduco, hobé çuquian eliçan iagoiti sorttu. Halacoaz ere nic erranendut, ezpada herioaz ordu honez orhitcen, hobé çuquiala elian sæcula ekhia iguzquia ikhussi. Eliçan iagoiti amaren sabelian conceuitu, eta hantic mundura ialqui. Math. 26.

Autor deuotbatec Climacus deithatcen denac dio, *Sicut qui esurit, recordatur panis, sic qui saluari cupit, non potest non recordari extremum iudicium :* gossiac onsa honquituric dagoenac eztu bertcé pensamenduric nontic beré oguia iateco ukhenen dian baicy, hala hala, saluatu nahidenac, beré gogotic eta beré bihotcetic, ecin galteendu beré hilteia, eta beré iujamendia. [88]

Gossé denac nahi du mundu hontan ikhussi beré oguia, saluatu nahidenac eré behardu consideratu beré herioa, eta beré arimaren

iuiamendia, hala eguin ezpadeça, bertçé mundian vkhanendu gossé erraviatia, hor erraviatiac dian beçala, eguia haur erran cian,
Psal. 58. badu dembora lucé, Propheta Royalac, *Conuertentur ad vesperam, & famem patientur vt canes, & circuibunt ciuitatem,* Berandian conuertituco dira, ibilico dira, inguru, inguru, hiriarē, eta ciotatiaren murraillen aldian, edirenē dituzté portaliac çerraturic, eta gossé gaitça, eta gossé erraviatia, horec beçala, horen paré, patitu, eta sofferitu behar vkhanen duté, oguiric ecin edirenez, nor vsteduçu direla gendé hurac, herioaz, orhit eztirenac.

Bertcé autor deuot batec segurtatçen guitu guré azquen malhurra, eta, azquen bekhatia dela, noiz eré guré herioaren, eta guré iuiamendiaren orhitcia, eta memoria galdu baitugu, eta halacoaz nehorc
Eusebius Emissen. etssitu behardiala, conduric ez eguin, eduqui galduçat. *Magna iam est pœna peccati memoriam futuri perdidisse iudicij.*

Ad. Potianuna. S. Hieronimo Iaunac dio, berritz, *Facile contemnit omnia, qui semper cogitat se moriturum.* Norc eré egun oroz, consideratçen baitu, sinhesten eta ikhusten hilen dela, hil behar diala, halacoac mundia, munduco
[89] gauçac, vrrhiac, cilharrac, placerac, ohoriac, pena gabé, facilqui quitatcenduditu, mesperechatcen, hetçaz condu gutti eguittendu mundu haur ezta deus, eguiçu condu bertcé mundiaz, hala eguin cian, eta
Ioan. 18 erran, guré Iaunac beré passionian, Pilato Iugé gaixto hari, *Regnum meum non est de hoc mundo,* ené erresuma ezta mundu hontaco.

Saluatu nahi bacira, beharduçu, mundu haur mesperechatu, eta truffatu, eta perechatu eta ohoratu bertcé mundia, hala eguitecoz, doctor saindu honen mania eguiçu hilciaz orhitcité, eta içanic eré mundu hontan esquale eta miserablé, içanen cira bertcé, mundian Princé, eta Erregué.

Aug. ser 10 de sanct. tom. 10 S. Augustino Iaunac dio, *Hac animaduersione percutitur peccator, vt moriens obliuiscatur sui, qui dum viueret oblitus est Dej,* punitioné iustobatez açotatcē dela bekhatoria, hiltcian eztela orhitçen beré buriaz, ceren bician, ezpaitçen orhitu Iencoaz. Orhitu içan baliz bere herioaz, bician orhituco çen Iencoaz hilcian, hambatequi bekhatoriac fin gaixtobat eta malhurosbat eguitendu herioaz orhitu faltaz.

Guiçona eta deabrua guduccan, disputan, eta procesian bici dira, guiçona sortuz gueroz mundu hontan, guiçona hil den pundu, eta momenta berian, procetza finalqui, eta azquen ressortian iuiatcenda guiçonac nahidu arima Iencoarençat, iustoden beçala, deabruac nahidu arima vsurpatu eta arrimatu beretçat, sprocezaren pieça fondamentalac dira, obra honac, eta gaixtoac, eta nola proces handi eta important horen arima, eta preçaric hobena baita hilciaz orhitcia, herioaren
[90] memoria, guttun haur procezaren çaquian ediren badeça iugiac, baita

Iencoaren semia, gugatic guiçon eguina, iuiamendu emaitendu favorablé guiçonaren aldé, deabruaren contré, eta arima guelditçen Iencoaren, eta desohoria deabruaren baina, guttun hura, pieça eder, eta handi hura herioaren memoria, ezpada çaquian edireiten, guiçonac galtcendu proceza despendio, damu, intrez ororequin, *la taxe reseruée,* eta arimarē Iaun, nabussi, eta guehien deabru gaixtoa iagoiticoz gueldituçenda, eta arima gaichoa infernura eroric labé gorri hartan beré çorren ecin pagatuz egonenda Iencoa, Ienco deno, ezparanca gaveric campotic iagoiti vkhanen diala socorriric, ez gratiaric, çeren haraz gueroz ezta redemptioneric, *In Inferno nulla est redemptio,* Infernuco portalia hayençat egonenda iagoiticoz guilçaz cerraturic, clausa est ianua, hantic ezta bat ialguico, hala nola Paradusutic. Iencoaren gloriatic, arima hurosetaric, bateré ezpaita ialguiten, ez ialguico, Iencoa Ienco deno.

Arima gorpiztcetic ialqui denian, beré hala iuiatçen dela, segurda, hala dio Apostoliac, *Oportet nos manifestari ante Tribunal Christi, vt recipiat vnusquisque propria corporis, prout gessit, siue bonum, siue malum.* 2. Cor. 5.
Bat bederac behardu presentatu Iaunaren gortiaren aitcinera, han erreceui deçan onsa, edo gaixqui cer eré beré personan eguin baitu hura oro.

Apostoliac dio orano, bat bederac errecebituco diala beré recompentia, eta bere salarioa, beré triuailliaren, eta penarē arau, *Vnusquisque recipiet mercedem suam secundum laborem suum.* Cer da hori, IESV-CRISTO Iaunaren tribunalera presentatcia baici, han dira arimac iuiatcen eta hayer emaiten meritatcen duten paguia, hilez gueroz, Tribunal hartan nahi denac ongui gin, eta ohoré erreçebitu, hara heldu beno lehen, harcatz, eta beré herioaz, ordu honez orhit dadin, çuhur bada bertçela erho handibat içanenda, eta iugé iusto haren sententiaz, halacoac vkhanendu, açotia, galera, vrkhavia, eta damnationé eternala. I. Cor. 9. [91]

Iuiamendu particular harçatz, çoin eguinen baita hil ondoan, guré arimaz iuge iusto haren Tribunaliã exemplu garrazbat, & icigarribat irakhurtçē dugu Pariseco doctor handibatez, doctor handi hura, fama eta reputationé handibatetan biciric, guiçon saindia, sauanta, guiçon perestia, mundu gueiec, particularqui Parisé oroc estimatcen cialaric, gin çen hilcera hil ondoan, biharemanian, cleroa, eta compagnia handibat bilduric haren oheretara, haren gorpitçaren beré tombara, eta hobera eçarteco, cleroa hassi çen obsequioen cantatçen eta heldu çeniã Iaun Ap-hezbat lehen nocturnia accabaturic hilen officioan, iobē lectioniarē cantatcera, *Responde mihi,* hilac erran cian mundu gucier bici içan baliz beçala, *Accusatus sum,* accusatianiz berri tristé, eta icigarri harc cela causa cleroa, eta compagnia oro iciturie, eta harriturie, cleroa retíratu çen eta compagnia oro, biharamonian, hassi

In vita S. Brunonis apud Surium & alios.

da cleroa cantatçen obsequioē, eta Iaun Ap-hezbat hassi denian errai-ten, *Responde mihi,* ioben lectione haren beraren, hilac dio, *Iudicatus sum,* iuiatuniz, herenen aldian eta heren egunian, cleroa eta quasi Parise oro bilduric, Iaun Ap-heçac erran ciē beçain, *Fite responde mihi,* hilac eman cian heren, eta azquen arrapostia, *Condemnatus sum,* con-
[92] demnatia nitz. Hantic harat, cleroac et Parizé oroc ikhussiríc dam-natia cela doctor handi haren arima, haren gorpitça, bela piquer hiriz, camporat eman, eta vrtiqui çuten, eta ez bateré ehortci lur saindian, çeren indigné estimatu baitcuten, doctor damnatu haren eçurrec, lur saindia honqui leçaten.

Accident tristé eta deplorablé harc eman cian ocasioné Pariseco Iaun, eta anderé handiri beré bekhatiez, penitentia handiric eguitera, eta mundia quittaturic, desertietan, eta ermitagietan Iencoaren çerbu-chatcera, hala eguin cian S. Bruno Chartruzē religioniaren lehen fon-daçaliac eta lehen autorac, çeren doctor damnatu haren desastria, eta malhurra ikhussiric ezpaitcian mundia edireiten segur, beré arimaren salbatceco.

Neuré adisquidia dudaric ezta, çuré arimac behar diala iuiatu Ienco semiaren tribunalian, eta çuré arima eta gorpitça iuiatuco direla, iuiamendu generalian, iugé iusto haren beraren gortian, bi iuiamendu hetçaz orhitcité, nahi bacira salbatu, eta ceren herioa lehen heduco baita, eci ez bi iuiamendu hec educaçu, çuré hiltcia, çuré herioa, çuré gogoan, hala eguiten duçularic, jugia, içanenda çuré adesquidé, eta çu jugiaren, biac arcord, eta ordian erranen duçu onsa hilceco bidia, dela, ordu honez hiltciaz orhitcia.

Neuré adisquidia capitulu haur lucezco içanda, giten dena ezta han-bat lucé içanen, consola cité ciauri ené ondoan, ikhussi behar dutuçu ené arraçoiñac porogatçeco ené bidia çonbat eder den, segur, eta hon, obra coroatcendu finac, veldur nuçu lana, eta languitia eztiren içanen
[93] çuré gogoco, baina aguian, lan eguiliaren vorundaté hona ikhussi duçu-nian, lana, eta lanquilia maitatuco dituçu. Goacin aitcina ené bidian, educaçu hon, ené pena, eta trauaillia, ezta galdu içanen, çuc çuria har badeçaçu ené ordoen, çuré arimaren salbatceco, herioaz orhituric, onsa biciric, onsa hil bacité.

× × × × × × × × × × × × × × × × ×
× × × × × × × × × × × × × × × × ×

# LAVR GVARREN

*Capitulia Capitulu huntan frogatçen da arraçoiñez onsa hiltçeco bidia, dela herioaz, eta hiltciaz orhitcia lehen arracoiña*

ERRANDVT, eta porogatu onsa hilceco bidia, dela herioaz orhitcia, oray presentian azquen capitulu hontan nahidut porogatu, eta erakhussi laur arraçoiñ differentez bidia haur hanbat bidé hona, eta segura dela, non ezpaita hoberic, neuré adisquidia beha cité onsa lehen arracoiñari, communzqui lehenac baliadu bigua, penaric eztuçun hilciaz orhitceco, harçaçu eneganic secretu honbat, eta ederbat, soguiçu çuré miseria, çuré cõditionia, çuré içatia çembat den flaco, ez deus, miserablé, fragil, eta corruptiblé quant e quand orhituco cira çuré herioaz, eta çuré hilciaz, haur da ené lehen arraçoiña porogatceco onsa hilceco bidia dela, herioaz orhitcia, considera deçagun guré miseria, guré conditionia, guré içatia, guré corruptioné handia.

Eguin behar dugu pauoac, chori vrguiluxu, eta superbios harc eguiten dian beçala, chori harc beré lumac ederrac ditu ahal den beçanbat chori harc beré luma ederrac çabaltcen ditu, eta hedatcen, eta arrotabat, edo mirailbat eguinic beré lumez, hetan glorificatcen da, eta beré placerac hartcen principalqui noiz eré igusquia clar eta garbi baita haren leinhuru, eta listurec chori haren lumagia guehiago aguertcen, eta edertcen baitituzté, baina cer guertatcen da chori harc, hanbat ditu beré çangoac, eta hoinac ichussi, eta difformé, nola baititu beré lumac eder, eta vrguilluxu ; eta sobat eguinic beré çango eta hoiñ ichussier, beré lumagé ederra gorderic, ihessi doa, eta gordatcenda. [94]

Guc eré hala eguitendugu, edo behar eguin, guré parté guehiena, eta superiora, baita gure arima ederra da, noblia da, Iencoaren imaginala, eta semblanciala creatuda. *Creauit Deus hominem ad imaginem, & similitudinem suam,* baina guré parté appala, eta inferiora baita guré gorpitça, ichussi da, difformé, lur eta erhautz, hala dio, Genesian, *Formauit Deus hominem de limo terræ,* eguin diala Iencoac guiçona lurretic, hambatequi eder guira eta noblé arimaren aldetic, eta ichussi, eta miserablé gorpitçaren aldetic. Hala erran cian eré Genesian Iencoac Adami, eta Euari bekhatia eguinez gueroz, *Puluis es, & in puluerem reuerteris.* Lur

Gen. 1.
Gen. 2.
Gen. 3.

cira, eta erhauts, lurtu, eta erhaustu behar duçu eguin badeçagu so guré miseriari, eta guré sortciari, consideraturic nola ialguiten guiren lurretic eta erhautxetic, guré vanitatiac eta guré vrguilliac vtciric
[95] orhituco guira, guré hilciaz, bidé hoberic çer nahidugu onsa hilceco.

In histor de Berla & Iosap cap. 12.

S. Damasceno Iaunac, guré miseria, onsa, eta ederqui eracustendu, figura, eta parabola eder hõtçaz, dio saindu harc, guiçonbat egun batez, animalé gaixto, eta cruel baten ihessi, çoela, çoin deitatcen baita vnicornis, erori cela, lecé, ocin, eta chilo handibatera, erortian lecé bartara, lotu cela ting tincea, çuhaincé edo arbré chipibati; çoin baitcen lecé haren bazterrian, ezparança cialaric, segur cela beré hoñac leçé haren çolan bermaturic, eta beré escuyes, eta beré bessoez pareteco arbria tinccaturic, so eguinic, guiçon harc lekhu tristé hari, ikhussi du, bi sagu, bata churi, bertcia beltz çuhaincé haren çaiñen eta racinen, iaten, eta trenkatçen, eta quasi, çuhaintça, çaiñac trenkaturic erortera çoela, ikhussi du halaber ociñ, eta lecé haren çolan, dragon terriblé, eta horriblebat, ahotic su, etazé, vrtiquiten ciala, iduri eci ingurunecoac biciric, iretssi, eta deuoratu behar çutiala ; ikhussi du haboro lece ociñ haren bi bazteretaric laur sugué handiren buriac ialquiten cirela, ikhussi du goiti so eguinic, çuhaincé haren adarretan behera erorten cela, ezti goterabat, eta consideratu gabé pian, eta bazterretan, dangerac çombat ciren handiac, guiçon hura çagoela, ahoa çabalturic, ezti haren goteraren iateco, eta goçatçeco.

Figura, eta parabola honen explicationia ençun eçaçu, nahibaduçu ikhussi, eta eçagutu onsa çuré miseria, eta conditioné miserablia, Vnicornis, bestia gaixto, eta cruel hura da herioa, guiçonari, eta emaztiari guerla oren oroz eguiten diana ocin eta lecé hura da, mundia,
[96] tribulationé, eta calamitaté oroz bethia, çuhaincé edo arbré ttipi hura da, guré bicia, edo guré biciaren içaria, eta mesura, çoinen çaiñac, bi sagu hec, churiac eta belçac, gauaren, eta egunaren orenec, iaten, mutçen, hertçen, eta trenkhatçen baitituzté. Laur suguiac dira, laur elementen, laur qualitaté differentac, hotça, beroa, idorra, bustia, dragon hura da infernia, ezti haren gotera da munduco placera, eta voluptatia, guré trompa garria, gure gal garria, hari beha gaudé, bertcé dangerac oro ahatcera utciric.

Neuré adisquidia, considera eçaçu çuré miseria çonbat handi den, gaüa, eguna, beroa, hotça, idorra bustia, mundia, infernia, çuré contré dira, hayen artian gaixqui cira, miseria horcaz orhituric, orhitcité çuré hilciaz, nahi bacira saluatu onsa hilic.

Curé biciaren corda oren oroz trenkhatçen da, soguiçu certan ciren, beharduçu onsa içan itssu, ezpaduçu nahi ikhussi çuré miseria, eta çuré dangera, eta hurac ikhussiric, nahi ezpacira çuré hilciaz orhi-

turic,conuertitu Iencoaganat, eta eguin penitentia çuré bekhatien gaiñian.

Iob saindiac baçaquian onsa guiçona çombat miserablé cen, erran dianian, *homo natus de muliere breui viuens tempore, repletur multis miserijs, qui quasi flos egreditur, & conteritur, & fugit velut umbra, & numquam in eodem statu permanet.* Guiçona, beré amaren sabalatic ialqui denian, arté eta dembora laburrez, miseria, eta doloré handiz betheric, bicida, lilia beçala, liliaren paré aguertcenda, eta gordatcenda, badoa itçala beçala, ezta jagoiti egoiten, ez baratcen ohi beçala estatubatetan, bethi mutatcen da bethi cambiatcenda, ezta behinere ohicoa. Job. 14.

Badeia deus eré mundian hain simpleric, hain flacoric, eta hain fité galtcen ahal denic, nola baita lilia igusquiac çoinbat orduz ikhustendu lilia goician sortcen, eta arratssian hiltcen, goician eder, fresco, esperança handitaco; arratssian ichussi, tristé, beltz eta hil coloré. Goician amuros, maitagarri, aleguera arratssian haistiogarri, illumpé, gratia gabé. [97]

Bada Iob saindiac guiçona comparatcendu lilibatequi, eta lilia bada gauça simplebat; guiçona ecin daté gauça miserablebat, eta simplebat baicy. S. Gregorio handiac, liliaren, eta guiçonaren comparationia hon edireitendu, guisa hontan, *Quid sunt nati homines in mundo, nisi quidam flores in campo : homo etenim more floris procedit ex occulto, & subito apparet in publico, qui statim ex publico, per sortem retrahitur ad occultum.* Cer dira guiçonac mundian, liliac elguetan diren beçala baici, liliaren paré guiçona luppetic aguertcenda mundiã eta guero mundutic, guttien vsté dianian, badoa lupperat, gordatcenda, ezta haboro mundian aguertcen, lilia beçala aguertcenda, eta gordatcenda, *Quasi flos egreditur, & conteritur.* S. Grég. Moral 17, cap. 17.

Iob saindiac, eta S. Gregorio, aita saindu, eta Eliçaco doctor handiac, erraiten baduté, guiçona, eta lilia, biac bardin simplé eta flaco direla, neuré adisquidia, dugun erran cuc, eta nic, guiçona gauça miserablebat dela, eta beré miseria ikhussiric, ezpada beré herioaz mundu hontan orhitcen, erho handibat datequiala, eta bertcé mundian galdubat, eta miserablé handibat içanen dela.

Iob saindiac dio haboro, guiçona ihessi doela itçala beçala, *Fugit velut vmbra,* dugun ikhussi itçala cer den, iaquin deçagun guré ez deusa cer den, itçala gauça falsubat da, eta gauça hila, erran ciniro, gauçabat mouitcen denian, eta lekhutic, lekhurra iguitcen, eta igarayten, haren itçala eré; gauça bicibat dela, ala baina itçala gauça hila da, eta ez deusa, ezta deuseré arguiaren priuationebat baicy, gorpisbat representatcen du itçalac, eta gorpitça ezpalis artian, itçala, arguia licaté, ceren arguiaren eta itçalaren artian, gorpizbat, cer eré baita iarriric, arguia [98]

empachatcendu gorpitçac, eta itçala hâtic formatcenda eta eguiten, hambatequi itçala ezta deus, arguiaren priuationia baicy, gorpitçaren aldetic heldu dena, hala dio haren icenac, *Vmbra nihil est aliud, nisi defectus luminis ex obstaculo corporis.* Guré bicia, guré dembora, guré içatia, guré honac eztira deus eré itçalbat baicy, gauça hilbat, eta miserablebat.

Guré bicia, guré dembora oro hirur gauçac eguiten duté, igarenac, presentian denac, eta gitecoac, hala emayten du eré philosophiac demborari beré diuisionia, *Est ens secundum prius & posterius, & constat, præterito, præsenti, & futuro,* dembora da gauçabat, igarenaz, presentecoaz, eta gitecoaz eguiten baita, eta ceren hirur parté hayetaric guré biciac ezpaitu posseditcen bat baicy, bata presentecoa, eta bat hura baita bi priuationé hayen erdian, igarenaren, eta gitecoaren erdian, ala baina ezta ez bata, ez bertcia, hambatequi guré bicia ezta deus eré itçalbat, baicy badoa itçala beçala, *Fugit velut vmbra.*

Igarena ezta guré, gitecoa ezta guré, ezta guré presentian dena baicy,
[99] cer da presentian dena, igarenaren, eta gitecoaren artian pundu, eta momento bacoizbat, bata bertciaganic erdiratceco, eta berhetceco, pundu eta momento bacoitz hura, hambat da labur, mehar eta ez deus, non, quasi ezpaita moyenic ediren eta attrapa ahal deçagun, ezta iagoiti gueldítcen, lasterrez doa, haren içatia oro lasterrian da, *Consistit in continuo fluxu, fluit semper, & fluet,* hala doen gauçaz, erraçu itçalbat dela, eztela, gauça bicia, baina gauça hila dela.

Erraiten dugunian guré biciagatic bicia dela, trompatcen guira, eguiaren erraiteco, behargunduqué erran, guré bicia heriobat dela, ceren dena beno guehiago da, eztena, badu icena, baina ez içana, guré biciac hirur partetaric, eztu bat baicy, eztu igarena, eztu ginendena, eztu presentecoa baicy, eta present dena eré eztaquigu noiz dugun, hala guré bicia ezta bicibat, baina propiqui minçatcera da eguiazco heriobat, hargatic S. Gregorio handiac errandu, *Temporalis vita æterna vitæ com-*
Homil. 27 in Euang. *parata, mors est potius dicenda, quam vita :* mundu hontaco bicia bertcé munduco bicitcé eternalarequin comparaturic, ezta erran behar bicia, dela, baina erran beharda herioa dela, herioa bada, ezta deus eré biciaren priuationia baicy, priuationia bada, itçala da, eta Iob saindiaren errana eguia da, guiçona itçalbat da, eta haren bicia badoa itçala beçala. *Fugit velut vmbra.* Propheta Royalac eré ederqui erran du guré miseria
Psal. 101. combat handi den, gure bicia comparatu dianian itçalarequi, *Dies mei sicut vmbra declinauerunt, & ego sicut fænum arui.* Ené egunac, eta ené
[100] dembora itçala beçala loan dira, igaren dira, eta belharra sorhoan dailliac ebaquiz gueroz beçala, ni eré ayhartu, eta idortu niz, Propheta
Psal. 143. harc berac dio. *Homo vanitati similis factus est, dies eius sicut vmbra*

*prætereunt.* Guiçona guertatuda vanitatiaren, eta vrguilliaren paré, haren egunac Ioan dira eta ioaten dira itçala beçala.

Erran nahidu, guiçona erhobat, elguerbat, eta superbiosbat da, eta içanda, usté cian haren honac segur eta osso içanen cirela, eta haren bicia lucé içanen cela, baina beré vanitatian eta beré esparançan trompatu içan da, ceren haren honac falsu dira, hilac dira, haren bicia laburda, heriobat da, itçala falsu, eta trompur den beçala, guiçonac nahi luqué sinhetz araci eztena badela, baina miserablé elguerra, berandian ikhussicodu, ordu eztenian, dena eré eztela, ikhussicodu guiçonac guiçonaren bicia heriobat dela, haren egunac eta haren honac itçala beçala Ioayten direla. *Dies eius sicut vmbra prætereũt.*

Guiçonaren bicia itçala idurida, ceren, hala nola gauaz, ilhumpian itçalian deno veldurti baita, eta ezpaitu corageric, hala hala guiçona mundu hontan deno, ala den gratian, ala den bekhatian veldurrian bethi, bethi, bicida, bekhatian bada, veldurda, herioac beré bekhatian atrapaturic, Iencoaren iustitia eternalac, Infernuco pena eta su eternalera condemna deçan, hargati errandu Escritura saindiac, *Pauor his qui operantur malum.* Gaixqui eguiliac, bekhatoriac, eta bekhatoressac, veldurrian oren oroz bici dira. Gratian bada guiçona, eta emaztia, orobat beldurrian vici dira, lotsaz, Iencoaren gratia, galdeçaten hargati erraiten cian Propheta Royalac, *Timor, & tremor venerunt super me, & contexerunt me tenebræ.* Ené spiritia eta ené gorpitça, ené heçurrac, eta ené çaiñac, lotsatu dira, ikharatu dira, ilhumpian, eta itçalian banintz beçala, çuti bortcha nago, ceren veldur cira Erregué handia, lotsa nitz eta veldurnitz neuré Ienco honaren gratia gal deçadan. Guehiago diot, guiçon iustua eré ezta segur ala den gratian, ala bekhatian, beré confessioné hona eguin dianian Iaun Ap-heçaren aitçinian, harganic errecebitu absolutioné saindia, eta aldaré saindian sacramendu saindia, behardu esperança hartu, gratian dela, eta guero eré bai, bekhatu mortalic eguiten ezpadu, obra honetan perseueratcen badu, baina segurta dadin dudaric gabé, infallibiliter, espiritu saindiac, edo çoinbat aingu-ruc Iencoaren partez, ezpadici reuela, eta berria erran, ecin diro. Hala dio Salomon çuhurrac, *Nescit homo vtrum odio, vel amore dignus sit,* eztaqui guiçonac ala den gratian, ala bekhatian.

Psal. 54.

[101]

Ecclsi. 9

Hambatequi guiçona mundu hontan deno, ilhumpian eta ignorantian bicida, ala den iustu, ala den bekhatoré, eta haren bicia itçala idurida, itçala beçala doa, *Fugit velut umbra.*

Guiçonaren bicia itçala idurida, hala nola itçalac guiçona hotcen, eta frescatcen baitu, hala hala, mundu hontan deno, bekhatian bici denian Iencoaren gratiaren, eta haren amorioaren suya galduric, bekhatiaren itçalac, eta lanhoac, hotcendu, eta larrointatcen eta manera hartan,

guiçonaren bicia itçala idurida, guiçona eta itçala biac bat dira, *Dies eius sicut vmbra prætereunt,* gaüaz itçalian, eta ilhumpian guiçona hotçac hobequi, eta guehiago honquitendu, eciez egunaz, ceren egunaz igus-
[102] quiac lurra eta guiçona arguitcen eta berotcen baitu, eta gaüaz aldiz ez, egunaz bai, gaüaz manera beriã, nola guiçona bekhatiaren itçalian guehiago bici baita ; iciez lencoaren amoriaren arguian, guiçona itçal, eta itçala guiçon guertatcen da. *Dies eius sicut vmbra prætereunt.* Vda gorrian eta beroan, beroaren contré chercatcendu itçalbé honbat frescatceco, eta negu hotcian, eta gogorrian su honbat, edo iguzqui berobat, onsa berotceco, eta nola vdan itçalac guiçona hotçen, eta frescatcen baitu, eta neguian suyac eta iguzquiac gortcen, eta berotcen, hala hala bekhatian denian, bekhatiaren itçalac hotcendu, eta itçaltcen haren bihoca, hala nola Iencoaren amorioac, subatec, eta iguzquibatec beçala, baitu azcartcen, eta berotcen, eta ceren guiçonaren bihocian mundiaren amorioa hobequi, eta barnago lantaturic, eta iossiric egoiten baita, eciez lencoaren, eta ceruco gaucen ohoria, mundiac, eta bekhatiac haren bihoça, hotçac, eta itçalac beçala deseguiten duté, desbistatcen, hotcen, eta itçaltcen, hargatic errandu Apostolu Euangelistac,
1. Ioan. 2 *Qui diligit mundum, non est charitas patris in ipso.* Mundia mayté dianac, eztu caritateric, halacoaren bihoça hoztu da, eta larrointatu, ceruco sutic eztu parteric.

Ionas Propheta Niniue herritic ialquiten cela orienteco herrian, igusquiac, bidian çoela, subatec beçala hurren chilpiltu, eta erré cian, gure Iencoa, dolu eta compassioné vkhan cian beré Prophetaz, eta eraguinic itçalbé honbat huntz orstoz, itçalbé hartan, Propheta goiçoa frescatu, cen, paussatu, eta desalteratu. *Præparauit Dominus Deus hede-*
[103] *ram, & ascendit super caput Ionæ, vt esset vmbra super caput eius, & protegeret eum, laborauerat enim, & lætatus est Ionas super hedera, laetitia magna.*

Itçalbé hartan ceno, Ionas Prophetac, etcian ikhusten igusquia, ez senditcen eré haren bero handia. Figura handibat cen itçalbé hura, guiçon bekhatoriaz mundu hontan, guiçona mundu hontan bekhatiaren itçalbian deno Iencoac, igusqui eder harc, eztu ikhusten, haren arguiac, haren suyac, eztu arguitcen, eztu berocen, huntz orsto hayen pian gorderic dagoen bekhatoriaren bihotca, guiçon harc eré, bekhatiaren itçalbé hartan deno, eztu ikhusten, ez senditcen ceruco suya, espiritu saindiarẽ suya, hambatequi belz belça, hotz hotça, itçala beçala, dago guiçona mundu hontan, eta norc eztu erranen guiçona itçalbat, dela eta itçalac beçala beré egunac, eta beré dembora igaraiten diala. *Dies eius sicut vmbra prætereunt.*

Guiçonaren bicia itçala idurida ceren itçalac eta ilhumpiac guiçonari

loa lehen emaiten du, eciez egunac, edo arguiac, lo eguin nahidianac eré egunaz communzqui beré camberaren bortac, eta leyhoac cerratcen ditu loaren eta paussiaren hobequi hartceco. Hala hala guiçona mundu hontan munduco hon demboralen itçalaren pian, loac hartcendu, eta celuco gaucer beré beguiac cerraturic, Iencoaren cerbutcian, eta obra honnetan aurher, lacho, negligent, eta berandiar guertatcenda bekhatiaren loan eta lohian, auaricitiaren suyac erreric, haren egarriac alteraturic, haren gossiac ianic, munduco honen itçalbian bicida iagoyti beré pausia ediren bagué, eta alterationia frescatu gabé. Elias [104]
Prophetac ené eguia eder haur, beré demboran figuratu cian, eta representatu, egun batez beré etsayen ihessi çocla desertian behera, genebria deithatcen den çuhaintcé baten itçalian loac bartu cian, eta aingurubat celutic ginic, iratçarri cian eta minçatu guisa hontan Iencoaren partez, Propheta Elia, çuti cité ian eçaçu, edan eçaçu, eta oguizco opilbat eguinic, hauspian erreric, eman ceron ogui opil hartaric iatera, eta vr edatera, eta erran, ian eçaçu, edan eçaçu, bidé lucebat, eta handibat orano iguaren beharduçu. Propheta gaiçoac, beré ian edana eguinic, eta azcarturic beré ian edanaz, berrogey egunez eta gaüez ibilicen desertu hartan, eta arriuatu hurosqui, Oreb, Iencoaren mendi benedicatu hartara. Hala dio Escritura saindiac, *Obdormiuit Helias in vmbra iuniperi, & ecce Angelus Domini tetipit eum, & dixit illi, surgé, & comede, grandis enim restat via, ecce ad caput suum panis subcinericias, vt vas aquæ, comedit ergo, & bibit, & ambulauit in fortitudine cibi illius, quadraginta diebus, & quadraginta noctibus, vsque ad montem Dej Horeb.* Hala hala eguitendu guiçonac mundu huntan, beré placeren, beré honen, beré bekhatien itçalaren pian loac hartcendu, lo eguitendu, ala baina beré loan, eta beré placerian, lo honic eztu eguiten, ez placer honic hartcen, ceren haren loa, haren placera, baitira labur, falsu, eta trompur, hala eré representatcendu, geneura, çuhaincé idor harc, haren frutiac, eta haren itçalac guti valia duté, haren frutiac eztira hon, eta haren itçala eré ezta çabal edatcen bertcé çuhaintcen itçala beçala, haren orstoac, liliac, frutiac, itçalac, ez deus dira. Halaco dira mundu hontaco, placerac, ohoriac, honac, eta boteriac, ala baina guiçona hayen itçalaren pian, laquetda, placer hartcendu, lo eguitendu, eta ezpaleça lo hartaric çoinbat ainguruc, iratçar Propheta Elia, eguin cian beçala herioac lo hartan atrapaturic, Infernura seculacotz, lo eguitera Ioan laité.

3. Reg. 19

[105]

Norc nahi du erran guiçona eztela itçalbat ené raçoiñac libru hontan ikhussiric, eta ezpadeça, beré miseria ikhussiric, beré herioaren memoria, beré beguien aitcinian ardura ardura eduqui, nic erranendut, guiçona dela arstobat, çamaribat, eta brutalbat.

Itçalbé hontaric ialquiric, dugan ikhussi, guiçona cembat miserablé den eta cembat obligationé dian beré hilciaz orhitceco, nahibada mundu hontaric landan, hilez gueroz, Iencoa baitan bici, eta saluatu.

2 Cor. 4 Apostoliac, hari nahi bacirabehatu, erakhutxico drauçu çuré miseria, erran dianian, *Habemus thesaurum istum in vasis fictilibus.* Badugu thresor handibat, badugu gauça aberasbat, baino thresor, eta gauça aberatz haren vncia, lurra da, lohiada, guré arima eder da, noblé da, baina gorpitça, baita haren vncia, cerda lur, eta lohi, herioac beré colpietaric mendrenaz honqui badeça, Ioanda vncia, gorpitça lurturic, lurrerat doa, lur eta erhautz guertatcenda.

Psal. 2 Propheta Royalac eré, lur guirela dio, eta minço denian, bekhatoré gaixtoez, hayen contré, guisa hontan bere othoycia Iencoari eguiten du, *Tanquam vas figuli confringes eos.* Bekhatoriac, gendé gaixto hec obstina-
[106] tiac, lurreco vnciac beçala, deseguin, itçaçu, gal itçaçu, mila pieçatan iarbité.

Apostoliac, eta Propheta Royalac, biac arcord dira, biec dioté guiçona lur dela. Iur bada, cerda appalagoric ez miserabliagoric, nola baita guiçona.

Psal. 75 Propheta Royalac, dio, guehiago, onsa consideratcen dianian guiçonaren miseria, eta haren itsutarçuna, *Dormierunt somnum suum, & nihil inuenerunt omnes viri diuitiarum in manibus suis.* Lo eguindute, eta ametz lurrian, beré dembora oro Ioan, eta ametzetan igaren duté, lurreco gendé aberatzec, eta guero beré lotic, eta beré ametzetic iratçarri direnian, ezquiac hutxic guertatu dira, gendé gaiço hec, eztuté deuz ediren beré escuetan :, *Nihil inuenerunt in manibus suis*, çuré mendian heldu cira, gaüaz Ioan çuré ohian ametz eguiten, eta çuré ametsian iduri eci, guiçon pochantbat, Iaun handi bat círela, vrré, cilhar, hacienda, eta honic asqui escuetan baçundiala eta guero, edo gaüaz, edo arguitcian, çuré ametxetic iratçarri cirenian, çuré escuetan eztuçu deus eré ediren lehen baino guehiago, *Nihil inuenerunt in manibus suis,* ametsa hassiz gueroz akhaua artian, aberatz cira, ametza akhauatuz gueroz, pobré cira lehen beçala, ohicoa cira. Erran communa eré bada ametz oro, gueçur ezpada ametsa celutic gina, Iencoaren reuelationez, edo haren manuz, çembait ainguruz errana. Ametsa, eta guecurra biac bat dira, eta guiçona bada amestbat Prophetac errayten dian beçala, erraçu, ametsa, guecurra, eta, guiçona, hiruracbat direla.

Enian vsté, baina orano minçatu behardugu itçalaz, eracusteco, guiçona mundu hontan, çombat miserablé den San Bernard doctor
[107] deuotac dio, *Dies hominis sicut vmbra super terram, nulla est nora, & tunc*
S. Berna. in *propè nihil est cùm stare videtur : cur ergo thesaurisat in terra homo,*
medit. cap. 17 *cuim sine dilatione transeat, & illud quod colligitur, & ipse qui colligit. Et*

*tu homo quem fructum expectas in mundo cuius fructus ruina est, cuius finis mors est.* Guiçonaren egunac badoaz itçala beçala lurrian ; vste dianian guiçonac cerbait dela, ezta deus, badoa guiçona baratu gabé.

Bada guiçona, cergatic hanbat hon lurrian biltçen duçu, honē bilçalia, eta hon bildiac, hain filé, garaicen, galtcen, deseguiten, eta itçaltcen direnaz gueroz, çuc guiçona cer esperança duçu mundian, haren irabacia oro, eta fructia, cer da galcia, eta ruina, haren azquen fina, cer da, hilcia herioa.

Saindu deuot harc berac dio çuri, niri, eta mundu orori, guré miseria ikhussi dugunian mundu hontan, considera deçagun guré arimarē noblecia ; eta handitarçuna, mundia quitaturic, Iencoaren onsa maytatceco, minço da guisa hontan.

*In omni namque creatura, quœ sub sole mundi vanitatibus occupatur, nihil humano corde sublimius, nihil nobilius, nihil Deo similius reperitur,* S. Bern. *quapropter nihil aliud à te quœrit, nisi cor tuum, munda ergo illud per* in medit. *puram confessionem, & assiduam orationem vt mundo corde Deum videre* cap. 11 *possis.*

Iguzquiac eztu deus, ikhusten celiaren pian, hābat ederric, hambat nobleric, hambat Iencoa, iduriric, nola baita guiçonaren bihoça, eta haren arima, dio saindu deuotac, hartacoz eztu galdatcen guiçonari beré bihotçabaici, bada, guiçona, chahat eçaçu, purga eçaçu çuré bihotça, confessione hon batez, eta orationé honbatez, amorecatic, çuré Iencoa chahuqui, eta purqui ikhuss ahal deçaçun. [108]

Saindu deuot honec dio, miserablé guirela, eta noblé, guirela, miserablé gorpitçaren aldetit, noblé arimaren aldetic, gu nur baguira, biez içanen, guira noblé, eta huroz, baina ezpaguira nur, biez içanen guira miserablé, eta malhuros, guiten orhit guré miseriaz, orhitceco onsa hiltciaz, dugun guré bihotça, eta guré arima, onsa purga eta chaha, guré Iencoa chahuqui, et purqui ; egun batez ikhussi eta contempla ahal deçagun, *munda cor tuum, vt mundo corde Deum videre possis.*

Guré conditionia, eta guré içatia combat den miserablé, behacité S. Augustin Iaunari harc dio ederqui, *Magna miseria, cū nihil sit certius morte ignorat tamen homo finem suum, & cùm stare putat, colliditur, & perit spes eius, nescit enim homo, quando, vel vbi, vel quomodo moriatur, & tamen certum est, quod eum mori oporteat.* S. Aug. sollilog. cap. 2

Miseria handia da haur, ezta deus hambat segur denic, nola baita herioa, ala baina eztaqui guiçonac beré azquen eguna, eta azquen orena, vsté dianian çuti dagoela, lurrian daté eroriric, vsté dianiā cerbait dela ; hura, eta haren esparançac oro hilen dira ; edo hilac diraté. Eztaqui guiçonac çombat agudo ahal beliçaté, noiz, edo non, edo nola hilen den, ala baina segur da hil behardiala.

Miseriaz hontçaz egunian be.in orhitcité, hala eguin badeçaçu, ni sartuco nitz çuré bermé, hilcé honbat eguinen duçula, çuré orena gin dadinian, mundu hontan, eta bertcé mundian bicitcé eternalbat vkhenen duçula.

[109] Guré miseria dela, hilciaz orhitceco, bidé hobena, segurda, baina guc bidé contria eduquiten dugu : badaquigu guré arima dela immor tal, eta guré gorpitça mortal, badaquigu guré arima dela anderia, eta gorpitça haren nescatoa : badaquigu guré espiritua dela Iauna, eta gorpitça haren mutila, gorpitça, ala baina anderiaz eguitendugu nescatobat, Iaunaz mutilbat, eta gorpitçaren gogara eguiten, arima et mesperechaturic, eta herioaz orhitu faltaz, gorpitça, eta arima deabruari largatcen, emayten, eta saltcen.

Suri, hist. Eccl. lib. 4 cap. 18

Hermita saindubat, Pambus icena cianbat, egunbatez S. Athanasio Iaunac othoituric, Alexandriaco hirira Ioancen, eta ikhussiric Anderé vrguilluxubat beré buriaren, bilhoen, beguitartiaren, eta gorpitciaren soberaché edertcen, eta affaitatcen, nigar eguin cian bi beguietan behera, eta interrogatu cenian, cergatic nigar eguiten cian, arrapostu eman cian, bi arraçoiñez nigar eguiten ciala, lehenic ceren anderé hura, galcera çoela, ikhusten baician, bi garren arraçoiña, ceren ezpaitcian harc hãbat pena eta triuaillu hartcen Iencoaren cerbutcian, Iencoari placer eguiteco, nola anderé harc hartcen baitcian tormenta, eta fatigu, guiçoner placer eguiteco. Anderé harc haboro estimatcen cian beré gorpitçaren, eta haraguiaren placera, eciez beré arimaren osagarria, eta salbamendia, ceren ezpaitcen beré herioaz, eta hilciaz orhitcen, baina Hermita saindu harc Iencoaren ohoria, eta beré arimaren salbamendia haboro estimatu cian, eciez, beré gorpitça, eta beré haraguia, ceren beré hilcia, eta beré herioa oren oroz beré beguien aitcinian eduquiten baitcian.

[110] Thomas morus, personagé saindubatec communsqui beré adesquider erraiten cian prouerbio, eta sententia eder haur, *Quam plurimi in hac vita Inferni mercari solent, cuius vel dijuidio Cælum lucrati fuissent.* Hanitz gendec pena, eta triuaillu handirequin infernia aquisitcen, eta ardiasten duté, eta nur balira, edo nahi balira, pena eta triuialu haren erdiaz Paradusia, eta Celuco Erresuma, irabaz, eta ardiaz liroité.

In vita Thom. Mori. cap. 12

Saindu harc berac dio, egunbatez ikhussi ciala andere ederbat, beré bilhoen, eta arropen arrankhura handirequin eta delikhatuqui trenatcen, iresten, eta chuchentcen, eta ikhussiric haren pena, eta haren arrankhura handia, erran cerola, *Nisi Deus tibi pro hoc tuo tanto labore Infernum reddat, magnam tibi profecto iniurian faciet.* Anderia eguiaz erran behar drauçut, çuré penaren, eta triuailliaren recompensutan, eta pagutan, Iencoac ezpadiçaçu eman Infernia, oguen handibat, eta

Ibidem

iniurio handibat eguin, drauçu. andere harc mayté cian beré gorpitça, eta saindu harc maytiago beré arima eta çuc neuré adisquidia, nahi baduçu salbatu bertcé mundian çuré arima, eta çuré gorpitça, lurrian çuré gorpitça onsa gaztiga eçaçu, corregi eçaçu, arima den anderé, eta gorpitça nescato ; orhitcité hilciaz, onsa hilceco, eta herioaz orhitceco, othoy ené adesquidé maytia, çuré miseriaz orhitcité, haur da ené lehen arracoiña, nahi bacira onsa hil, hilciaz orhitcité, nahi bacira, herioaz orhit citen, çuré miseria considera eçaçu çuré miseriaz orhitcité, lur cira, itçalbat cira, ametsbat cira, figurabat cira, ez deus bat cira, oren oroz hiltcen cira, éçoaça ihessi, gordicité, eta eguin ducinian niguar çuré [111]
bekhatiez, gincit bidé hontaric bidé hontçaz gin dadina, ezta galduco, salbatucoda, Iencoac placer badu.

X X X X X X X X X X X X X X X X
X X X X X X X X X X X X X X X X

# BI GARREN ARRA-

*çoiña frogatceco, onsa hiltceco bidia, dela herioaz, eta hiltciaz orhitcia.*

CAPITAN onbat, eta generosbat, aitciña duenian armac escuan beré etsayaren cõtré combatitcera, eta erakhusten beré soldadoer, nola behar duten combatitu eta gouernatu victoriaren hayen contré irabasteco eta reportatceco, dudaric gàbé halaco Capitañac amorio, eta borondaté hãdibat erakhustendu obraz badiala beré soldadoençat, eta soldadoa ezpadadi onsa gouerna, nahi ezpada coraiosqui combatitu beré Capitañaren ondoan Ioanic, beré guida, beré guehiena, nahi ezpadu onsa seguitu eta imitatu, eta guero nahi ezpadu soldado harc, beré Capitañ Iauna, remerciatu eta ohoratu, norc eztu erranen, soldado hura ingratu, dela bihotz gabia, poltroiña, eta legué gabia, Capitañ Iauna, on, noblé, eta maitagarri, daté, baiña soldadoa, gaixto, ohoré gabé, eta hastiogarri içanenda.

Baiña noiz eré Capitañ hura, baita hain on, eta bihotz bera, non beré bicia ioca deçan, odola issurdeçan, beré buria liura deçan, eta aban- [112]
dona burreun escuetara, eta bocheria hartan, massacra dadin, eta hil dadin beré soldadoen, eta armadaren salbatceco, eta beré hilciaz, beré armadaco gendé ororen bicia salbatcen dianian, ber bera orogati hilcē, eta soldadoac oro beré hilciaz salbatcen, erran beharda ordu hartan, Iaun Capitañ hura, dela onen, hobena, noblen noblena, maita garrien, maitagarriena, eta soldadoa datequiala gaixtoen gaixtoena.

desohoratiena, eta ororen artian, hastiogarriena, ezpadeça beré guida, beré guéhiena, onsa ohora, lauda, mayta, remercia, eta orhituric beré Iaunaren hilciaz, epadeça haren hilciaren dolia ekhar, eta eduqui beré bihotcian, ezpadeça considera mortal dela, eta hil behardiala, soldadoa ezta handiago Iauna baiño, Iauna hilda, soldadoac eré behardu hil, iuiamendu hura ezpadu, ezdeusbat beno sordeich içanenda nic errandudana içanenda, ezdeusaz baiño haboro gendé pereztuec, eztuté eguinen casuric, ez conduric, halacoaz, eta halacoetçaz, eta Iaun Capitaño haren plaçan banintz, halacoer, so onbat eniro eguin, ceren halacoa ezpaitabila bidian hontan çouin baita onsa hilceco bidia, erran nahi du hilciaz orhitcia.

Bada neuré adisquidia, çu eta ni, eta mundu gucia han guira. Iesv-Christo guré Iauna da guida, guré guehiona, guré Capitañ handia, eta gu oro guira haren soldadoac, hura Ioanda gurutcia escuã, gure aitcinian, gu oro cumitatcen guitu, Ioan guiten haren ondoan, guré buriac arnega ditçagun, ezteçagun eguin eta compli guré berondaté propria,
[113] baina bay harena, harde çagun norc guré curutçia, eta guero haren hatçari iarraiquiric huna segui deçagun, hala, Euangelistac dio, *Qui vult*
Mat. 16 *veni re post me abneget semetipsum, tollat Crucem suam, & sequatur me.* Ené ondoan gin nahi denac, beré buria arnega beça, har beça beré curutcia, eta segui neçã. Iaun hon harc orori erakhustendu bidia, bera lehenic doa, armac escuan, eta gu miserabliac, gu galdiac, gu erhoac ezquira ioaiten haren ondoan, haren bidia vtciric, bekhatiarẽ bidé gaixtoaz gabiltça mundu hontan, guida honda, Capitanoa honda, baina soldadoa, gaixto, ceren ezpaita haren bidiaz ibilten : considera baleça soldadoac, nola guida hãdi hura Iesvs guré salbatçalia, hargati hil dẽ, haren salbatceco, haren herioaz orhituric, beriaz orhitlaité, eta elaité makhur haren bideric, ez esquin, ez ezkhuer.

Gugati, eta guré salbamendiaren amorecatic celuti iautxi da, eta incarnatu espiritu saindiaz, Maria Virgina ganic, eta guiçon, eguin, gugati crucificatu, herio, eta passioné igaren eta ehortci, Pontio Pilato
In symb. Nicaeno iudiaren pian, dio çonciliobatec, *Propter nos, & propter nostram salutem descendit de Cœlis, & incarnatus est de Spiritu Sancto ex Maria Virgine, & homo factus sst, crucifixus etiam pro nobis, sub Pontie Pilato, passus & sepultus est.*

Hilda gugati, et guré bekhatiac direla causa, eta piztu eta resuscitatu,
ad. Rom. 4 guré iustificationia dela causa, dio Apostoliac, *Traditus est propter nostra delicta, & resurrexit propter iustificationem nostram.*

Guré herioa hildu, eta ruinatu beré herio propiaz hilcian, eta guré bicia reparatu, eta alegueratu, pitciã eta resuscitatcian, cantatcendu
[114] In Prefa. Temp. Pasch. Eliçac prefacioan, pazco demboran. *Mortem nostram moriendo destruxit, & vitam resurgendo reparauit.*

Gugati celuti lurrera iautxi da, incarnatu, eguin guiçõ, hartu arimabat eta gorpitcbat, Virgina ama baten sabel benedicatian, sortu bederatçu hilabeteren burian, onci sacratu hartaric, beré amaren virginitatiari oguenic deusetan eré eguin gabé, hala nola Prophetac erran baitcian lehenago dembora lucez, *Ecce Virgo concipiet, & pariet filium,* Issay. 7
virgina batec concebitucodu, eta sortuco du semebat, gugati bici içanda lurrian hoguey eta hamirur vrtez, eguin erran hanitz signo, eta miraculu dandiric, beré passioné dolorosian, odol eta hur icerdi egoitci, beré buru sacratian ilhoriz coroatu, borreuen escutic, bost edo sey mila açoté vkhaldi recebitu, tustatu, cholleztatu, vsticataz colpuz, maredictionez beté, gossia egarria soffritu, curutcia soiñen carreyatu, Curutcian, Calnarioco mendi tinian, bi ohoinen artian vrecatu, eta crucificatu.

Gugati horic oro soffritu ditu guré guidac, guré Capitano handiac, IESV-CHRISTO Iaunac, Trinitaté saindiaren second personac, aita eternalaren semé naturala eta bacoitz.

Neuré adisquidia, othoy considera eçaçu çuré Iaunaren amorioa, çuganat çombat handi içan den, orhitcité çugati hildela, ordian, çu baitcira haren soldadoa, çuc eré behar duçula haren ondoan hil, orhituco cira, eta bidia haur hon edirenẽ, ezta possiblé norc eré Iesu-Christen hilcia eta passioné dolorosa bere bihotcian eduquiten baitu, eztadin beré herioaz orhit, eta bekhatu mortaletaric ezteçan beguira beré arima gaichoa, haur da remedio handibat, beré hilciaz orhitceco, [115]
IESV-CHRISTEN herioaz orhitcia, eta haur da ené bigarren arracoiña, çoinec obligatcen baicutu guré hilciaz orhitcera.

Gugati çombat vrhatz, çombat iauci, eta laster eguin dian, guré Iaunac, considera eçaçu, esperança dut iauci eta laster hetan, edirenen duçula, haren herio delorosa, eta ezpacira, iudu, edo mairu, orhituco cirela çuré hilceco orenaz, behacité S. Gregorio doctor handiari, nola minço den guré Iaunac gugati eguin dutian vrhatsez, eta lauciez. *De* D.Greg. Papæ
*Cœlo venit in vturum, de vtero venit in præsepe, de prosæpe venit in Crucem,* Hom. 29
*de Cruce venit in sepulchrum, de sepulchro redijt in Cœlum̃. Ecce vt nos post se currere faceret, quosdam pro nobis saltus manifestata per carnem veritas dedit.* Celuti ginda sabelera, sabeletic ginda establiala, establiatic ginda curutciala, curucetic ginda tombala hobiala, tombatic itçulida, eta ioan da celurat ; soxeguiçu çõbat laster, eta vrhatz eguin dian haraguiaren pian aguertu, eta manifestatu içan den eguiac, guré beré ondoan lasterres ioan eraciteco.

Neuré adisquidia, çuré herioaz orhitceco, guré Iaunaren bide lucé, vrhatz, laster, eta passeyu handi horiez orhitcité, bidia luceohé baçauçu, passu orotan nahi ezpacira gueldítu, aumens gueldicité curucian, han edirenen duçu haren ohia, haren herioa, han edirenẽ duçu

Iesusbat çugati hilic, Ienco guiçonbat, eta guiçon Iencobat, çugati vrkhaturic, crucificaturic, beré bessoac çurbaten contré hedaturic, eta itçaturic, beré hoiñac elkharretan gaiñen plegaturic, eta içaturic, çuré çorren pagatcen, beré odolaren despendioz, eta çuré baquiaren eguiten
[116] bere aita eternalarequi batian, egunian behin passeya bacité bidé hartan, hambat sobera içanen cira Iesus haren adesquidé eta hura çuré, non bician ohoratu, eta adoratu duçun curutciac, hilian çuré etxayen contré deffendiaturic, guidatuco baitcitu chuchen celuco resuma handi hartara.

Guré amorecatic, guré salbatcera ginda celutic lurrera, guré Iauna, erran dugun beçala, eta erran dian beçala Apostoliac, *Commendat*
Ad Rom. 5 *autem charitaten suam Deus in nobis, quoniam cum adhuc peccatores essemus, Christus pro nobis mortuus est,* guré Iencoac, beré ontatçuna, beré charitatia, eta misericordia gutan handizqui; eta goraqui erakhustendu, ceren bekhatoré, eta indigné guinelaric, gugati hil baita.

Iencoac baciã bertcé moyenic eré natura humanaren redemptionaren, eta erospenaren eguiteco, baina ororen cruelena, eta garratcena hautatudu, çoiña baita herioa, guri beré amorioaren eracusteco, eta guré bihotcen bereganat eracarteco.

Lehenic Iencoac guiçona redemitcen, erosten, eta salbatcen ahal cian placer vkhan balu, *Per merã condonationem,* beré faltaz hari barkhamendu eguinic, beré misericordiaz, eta beré liberalitatez, guiçonari beré oguena, falta eta bekhatia barkhaturic, Iencoa cen offensatia, guiçona offensaçalia, offensatiac placer vkhen balu. Offensaçaliari barkhatu beré offensa, norc cer erranen cian Iencoaren contré, edo erranic eré deus cer ansia çuquian Iencoac neoren erranaz, Iencoa sobera da handi, poderos, eta infinito, non ezpaita obligatu conduric rendatcera beré
[117] actionez, beré buriari, baicy, oro dira haren peco, hura ororen guehien, celia eta lurla, Ainguriac, eta guiçonac oro haren pian ikharatcen dira, eta harc orori leguia eguitendu, hargati dio Theologiac, *Deus est Ens à se.* Iencoa da içatebat, eta gauçabat bera beraganic, berebrutic eguina; hambatequi Ienco handi harc, celuco, eta lurreco Iaunac, hitz bacoitz batez, Adam eta harẽ posteritatia oro, placer vkhen balu, salbatcen ahal cian, erran balu hitça Adami, Adam, gratia misericordia, eguiten draucut, çuré culpa, eta bekhatia, barkhatiada mundia oro salbatu cen, redemptioné, eta erospen sacratu hura complitu çatequian, baina remedio, hura vtcidu, guri beré amorioaren hobequi eracusteco.

Secontian, mundia redemitcen, eta salbatcen ahal cian guré Iencoac, *Ex imperfecta iustitia, per qualemquamque satisfactionen,* recebitcen cialaric guiçonaren aldetic beré faltaren punitionetan, eta hari eguin cian oguenaren reparationetan, cerbait satisfactione, ez hain graué, eta hain

handi, nola baitcen oguena eta iniurioa, bena apalago, mendriago, eta gutiago satisfactionia, eta cer eré baitçatequian guehiago eguin behar satîsfactioné, guehiago hura, Iencoac guiçonari barkhatcen cialaric, guisa harlan, mundia salbatuco cen, Iencoac guiçonari bere faltaren, eta çorraren partebat pagueraciric, eta çorraren bertcé partia, liberalqui hari barkhaturic, çorra parté pagatu, parté quittatu, eta Iencoa, eta guiçona biac contēt, eta satisfatu. Baina ezta nahi içan cerbutçatu erremedio hontçaz guré Iencoa, guri hobequi beré charitatiarē aguertceco.

Herenian guré Iencoac mundia salbatcen ahal cian, *Ex prefecta iustitia,* edo. *ex vigore iustitiæ,* cialaric recebitcen reparationebat, eta satisfactionebat, hain handiric, eta infinitoric, nola baitcen offensa handi, eta infinito, hautic Ioanda eguitecoa, bertcé moyenac quitaturic, ororen garratcena, eta vigorosena hautatu du, çoin baita herioa, eta beré herio propiaz, eta beré odol pretiosaren issorciaz, mundia oro salbatu du, eguin beré Aitari reparationebat offensa beçain handiric, offensa infinito cen, reparationia eré infinito içanda, çorra vigorosqui pagatu içanda, bata hain handi, nola bertcia, biac bardin, biac egoal. [118]

Reparationé admirablé, eta miraculos hartçaz, guré Iencoac guri beré amorioa ahal beçain goraqui erakhassidu, eta guri manifestatu camporat beré hirur perfectioné, eta attributo handiric, çoiñ baitira, iustitia, misericordia, eta çuhurtcia, eta çonbateré, hirur perfectioné handi hec iduri baita, beré artian contrario direla, eta elgarren artian, elgar ecin eguartē dutela, harc elgarrequila redemptioné vigoros hontan, iuntatu ditu, eta arcordu ederbatetan eçarry.

Erakhutxi du beré iustitia, ceren beré semé propia gugati incarna eraceric eta gugati hileraciric, recebitu baitu guiçonaren aldetic satisfactioné infinitobat, nola offensa baitcē infinito. Erakhutxidu beré misericordia, eta bere ontarçuna, ceren eman baitu guiçonari gratia moyena, eta boteria eguiteco beré satisfactioniaren iustoqui eta egoalqui, deuseré corretic pagatceco ginbelerat vtci bagué.

Erakutxidu beré çuhurtcia, ceren lan batetan eta obrabatetan bi vertuté, eta bi perfectioné elgarren artian contrario cirelaric, iuntatu, iossi, eta tincatu baititu, çoin baitira iustitia handibat misericordia handibatequila, arcordu eder, eta handi hartçaz, minçatu cen aspaldian Dauid Erregué Propheta, errandianian, *Misericordia & veritas obuiauerunt sibi iustitia & pax osculatæ sunt.* Misericordia, eta eguia heldu dira eta rencontru eguin dutē elgarrequila, iustitiac, eta baquila, elgarri pot bessarkha eguin duté. [119] Psal. 84.

Guiçonac Iencoari ecin eguiten cian, behar cen peparationia, ceren nola offensa baitcen handi eta infinito, eta guiçona baita, herssi, flaco,

pobré, eta finito, ecin emaiten cian paguric, çorra beçain handiric, ezpaitcian nontic eman. Iencoac eré Ienco beçala ecin eguiten cian berac reparationé hura, ceren reparationé eguiliac behardu içan apalago mēdriago, behardu içan inferior, eta suiet, norc baitu recebitcen reparationia, hari : baina Iencoa ecin daté nehoren eré peco, nehoren muthil, ez baichal, guisa hartan, ez guiçonac berac, ez Iencoac berac, satisfactioné behar cena ecin eguiten çuen, guiçonac Iencoa gabé, eta Iencoac guiçona bagué lan handihura ecin complitcen çuten, cer eguin du Ienco Eternalac, makhilarē bi buriac, bi bazterrac, batetan bildu, eta iuntatu ditu, eguindu beré semé Iencoa guiçon, guiçona Ienco, virginabaten sabel sacratian, eta Ienco guiçon harc eguindu mundu orogatic, beré Aita Eternalari satisfactionebat hain handiric, eta infinitoric, nola baitcen offensa eta iniurioa handi, eta infinito, guiçon beçala mendriago cen eta apalago, eciez Iencoa, Ienco beçala bardin cen eta egoal beré aita Iencoari ; hambatequi paguia hain handi, nola çorra,
[120] *Vbi abundauit delictum, super abundauit & gratia,* dio Apostoliac, falta, eta culpa, handi içanda, baina, gratia, eta paguia orano handiago ; reparationé harc behar cian bi conditioné, mendre tarçuna eta bardintarçuna, biac baçutian, mendre tarçuna guiçon beçala, Iendo beçala bardin tarçuna eta egoalitatia, hala reparationia içanda hain handi nola offensa, paguia hain handi, nola çorra, ceren reparationiaren eguilia, baitcen Iesv-Christo Iauna, eta haren actioniaren vitioa meritia, eta pretioa baitcen handi eta infinito, eta lan handi eta adorablé hartan guré Iencoac colpubatez erakussiditu beré hirur perfectioné handiac, iustitia, misericordia, eta çuhurtcia.

Neuré adisquidia, çuré Capitano Iauna hilda çuri biciaren salbatceco beré hilciaz, eta çuri hobequi beré amoriaren aguertceco, çu cira haren soldadoa, eztadin othoy çuré gogotic haren hilcia, iagoiti ialgui, orhituco cira çuré hilciaz hala eguiten baduçu, çuré bicia, çuré hilcia, eta çu, hirurac huros, eta benedicatu içanen ciraté, baina, neuré adisquidia çuré Iaunac, çuré salbatceco eguin dutian miraculu handiez eta principalqui haren hilciaz, ezpacira ardura orhitcen, nola orhituco cira çuré hilciaz, eta çuré hilciaz ezpacira orhitcen, nola nahi cira onsa bici, ezpacira onsa bicitcen, nola nahi cira onsa hil, ezpacira onsa hiltcen, nola nahi cira salbatu, den ardura çuré gogoan, eta çuré bihotcian Iesv Christo Iaunaren herio, eta passioné dolorosa, onsa biciric, eta onsa hilic, deabruaren despit, çuré arima gaichoa salbatucoda.

[121] Egun batez Franciaco Princebat, çoin deithatcen baitcen Lovis de Bovrbon, Comte de Montpensier, eta çoin baitcen Charles çortci garrena, Franciaco Erreguiaren Naples, Erresuman, Bisarregué, eta Lotenant Generala, heldu cen Italietan, Pouzols deitatcen den hiribatetan,

eta ioanic Eliçabatera, çointan haren aitaren gorpitça ehortciric baitçagoen hobebatetan, halaco guisaz beré aitaren doluz hassi cen nigarrez, hazperenez, cincuritz, eta heyagoraz, non beré hala, hobiaren gañian çagoela beré aitaren dethoratcen hil baitcen, eta arima Iencoari rendatu, Princé gazté harc erakhustera eman cian, semé hon beçala, beré aita maité ciala, eta haren hilcia, beré bihotcian barna, baino barnago eduquiten ciala.

Neuré adisquidia, çu non cira, cer ari cira, nola bici cira nola nahi cira hil, Iesv-Christo Iauna duçu, çuré Erreguia, çuré Iauna, çuré Princia, çuré aita, çuré anayé Curutcia duçu haren hobia, ohia, thõba, eta sepultura, han çugati hilda, vrkhatu, eta crucificatu, hari eguiçu ardura so, eta hari so eguinic, eguiçu nigar haren doluz, haren hilciac eçarricodu curé hunian, çuré herioaren orhitcia, onsa hilceco, non da bidé hoberic.

Franciaco eta Poloñé herrico Erregué, Henry, icē hartaco hirur garrena Pariseco hiria assetiaturic eduquiten ciala, saint Cloud, dethatcen den hiri tipito hartan, hilcen, eta massacratu bi ganibet colpuz, Fraide gaixto baten escutic çoin deithatcen baicen Iacques Clemēt, Dominicano Fraidé gaixto, Erregué gaiço haren bihotça, eta haren erchiac, Saint Cloud Eliça hartan ehorciric, hobiaren eta thombaren gaiñian, çoin baitcen harri marbrez egina, epitaphio, eta deuisa eder haur, iarri cen carta batetan beçala ezcribaturic moldé hontan. Andraeas Fauinus in Historia Nauarræ [122]

*Cor Regis in manu Dej,*
*Asta viator, & dole Regum vicem.*
*Cor Regis isto conditum est sub marmore,*
*Qui iura Gallis, iura Sarmatis dedit,*
*Tectus cucullo hunc sustulit siccarius.*
*Abi viator, & dole Regum vicem.*

Erran nahi baita euscaras guré lengagian, Erregueren bihotça Iencoaren escuan da.

Bara cité igapailia, Erreguen sortia deithora eçaçu Erregueren bihatça harri marbré honen pian estaliric, eta gorderic diagoçu. Francia, eta Poloiñe, harc manatu dutu çapabatez estaliric çagoenbatec haur hilduçu, eta degoillatu. Çoaça igaraila, Erreguen sortia deithora eçaçu.

Neuré adisquidia, çuc eta nic Iesvs guré Erreguia hil dugu guré bekhatiez, eta guré iniquitaté gaixtoez, Iudas traidoria, eta Iudu gaixtoac içanic eré instrumendu haren hilceco, eta haren crucificatceco, guré bekhatiac içan dira ganiuetac, eta dagac haren massacratceco, gu içan guira haren herioarē causa principalac, harc guré bekhatiac beré bizcarrian curutciala eramanic, eta carreitaturic, han hayetcaz eguindu behar den paguia oro, Apostolubatec erran dian beçala. *Peccata nostra* 2

*ipse portauit in corpore suo super lignum,* hilda gugati eta gu oro beré herioaz salbatu; possiblé dea, ikhusten dugunian haren ohia, eta harē thomba, baita curutcia, edo Eliçan, edo guré camberan, hain ingratac, [123] eta gaixtoac guiren, non ezquiten orhit, gugati hil den Iaunaz, eta Erreguiaz; eztaquit norat nahi guiren Ioan, baina vsté badugu celurat Ioan, guré hilciaz orhitu gabé, eta vste badugu guré hilciaz orhituco guirela, Iesv-Christen hilciaz orhitu gabé, nor içanenda trompaturic, eta damnaturic gu baicy.

Andræas Fauinus in Histor Nauarræ

Franciaco bertce Eregué handibatec, Henri handia, icen hartaco laur garrenac, erraiten cian conmunzqui beré gortian beré adesquider, proberbio, eta sententia eder haur, *Qui bien aime, tard oublie,* erran nahi baita, norc eré onsa mayte baitu, berandian ahatcera vzten diala. Princé handi harc, bi persona bertcen artian ahal cen beçanbat mayté çutian bata cen beré areba propia, Princessa Catharina, Lorrenaco Princiaren emaztia, eta ezposa, bertcia cen Marquisa ederbat, çoiñec beré qualitaté ederrez abantailla handiric, eta gratia handiric, Erregué haren bihotcian ardiatsi baitcian, hain barna, non herioac ezpalu sobera sarry mundu hontaric arrapatu, Erreguec deliberatu baitcian anderé eder haren beré emasté eta esposa legitimotan meçatcera, edo erromec et çuquian boteric hari dispensaric emaiteco, cer guertatu cen, nola herioac egoalqui beré colpia emaiten baitu handier, chipier beçala, Erregueren bi anderé maytiac, hil ciren, bata beré herio naturalaz, bertcia violenciaz, borchaz, eta poçoaz bi creatura mayté hayen hil berria ençun cianian, Erregué handi harc, ardura ardura, erraiten cian, bi persona hayen dolia, eta regreta, bici ceno Beré bihotcian eduquico ciala, eta deusegatic eré, egun oroz, bici ceno, etcela hambat beré [124] hilciaz orhituco, nola bi persona mayté hayen hilcia cela causa.

Iencoari datsala pensamendu saindu hura cian beré gogoan guc esperanca dugun becala, egun, eta oren tristé, eta malhuros hartan, noiz eré Pariseco hirian, egunaren erdian beré carrossan, François Rauaillac, sacrilego murtrer gaixto, eta maradicatu harc bi ganiuet colpuz Franciari edequi, eta arrapatu baitcian, franciac egundano ikhussi dian Princeric handiena, hobena, eta maytena.

Neuré adisquidia, ezta adisquidé hoberic, ez halacoric, nola noiz adesquidiac, beré adesquidiaren aldé, eta fauoretan beré bicia galtcen, Ioan. 15 eta iocatcen baitu, hala dio eré euangelioan espiritu saindiac, *Maiorem charitatem memo habet quam vt animam surm ponat quis pro amicis suis.* Halaco da cuganat, eta çureçat, eta niganat Iesv Christo Iauna, gugati hilic, beré odol pretiosaz erossi guitu eta celietrat iganez gueroz eré, Eliça saindian, aldarian vtci dian sacramendu saindiaz, beré odol adorabliaz, eta haragui propiaz, eta sacratiaz, behar dugunian, eta placer

dugunian, guré arimac hatcen, entertenitcen, eta sainctificatcen ditu, gu nor baguira, gutan ezpada faltaric, dignequi presenta baguité ber mahay sacratu hartara, berac erran dian beçala, *Caro mea verè est cibus, Sanguis meus verè est potus*, ené haraguia da eguiazco edatecoa. Badea Ioan. 6.
halaco adisquideric, hain iealic, honic, eta seguric? ez, ezta içan ez
içanen nola hura gugunat, *Amicus est alter ipse*, dio batec, adesquidia Cicero de
dela gu guihaur den bat, gu iduribat; guré adesquide handiac Iesus amicitia
honac, ezcutu solamenté mayté vkhen beré buria beçanbat, baina orano
mayté vkhen gutu beré buria beno haboro, ceren beré bicia eçarriric [125]
comparationetan guré biciarequin, eta guria, beriarequila, beria galdu baitu eta iocatu, eta guria salbatu, eta hartan eracussi obraz, bata habaro estimatcen ciala eciez bertcia, haren amorio handia guganat consideraturic Apostoliac manatcen gutu bat bedera, elgar maita deçagun, harc gu maitatu gutian beçala : *Ambulate in dilectione, sicut & Eph. 5
*Christus dilexit nos & tradidit semetipsum pro nobis oblationem.* Ibil citezté caritatian, eta amorioan, elgar maita eçacié Iesv-Christoc gu maitatu gutian beçala, eta harc beré buria gugati eman, eta ohorascatu dian beçala, guré Iesus hona, guré adesquidé hona mayté eztiana, içanenda desnatura tu gaixtobat haren hilciaz ezta orhituco, eta ez beriaz eré halacoa nola nahi cira onsa hil dadin, nola nahi cira salba dadin, ezta lekhurric, ez remedioric, oray guerozco, halocoa biciric dagoela, galdia datça, eta damnatia, ceren ené segond arracoiñaz ezpaitu conduric eguiten, çoiñec baitio, guré hilciaz orhitceco, behar dela orhit içan Iesv-Christen hilciaz, eta passioné dolorosaz.

Istoria ederbat irakhurtcen dugu bi adesquidé handiz, eta leialez çoi- Cicero lib. 3.
ñac deithatcen baitciren, damon eta Pythias, biac adesquidé fidelac, de Officiis
eta segurac, bi adesquidé hayetçaz eguitendu mentioné, Ciceron, et Valerius
Valerius, bi author handi hayec, istoriac dio, eta ederra delacoz, nahi- de amicitia
dut ené libruto hõtan ezkhiribuz ecarri, Denis Syracusaco Tyran handi harc bi adesquidé braué, eta leyal hayetaric bata condematu ciala hilcera, criminelac gualdo eguin cian hamabost egun heppé, eta
spatio, presonteguitic ialquiric, beré adesquiden, eta ascacien ikhustera [126]
ioaiteco, iusticiac reffuzatu cian criminelari galdatu cian heppé, eta spacioa, ueldurrez behin larguança balu presonteguitic ialguiteco, eladin bihur carcelura, eleçan beré hitça eduqui, eta iusticiaz truffa ladin behin campoa, eta libertatia ardiaz baleça : cer eguindu bertcé adezquidiac, sartcen da carcelian adesquidé condematiaren bermé, pacto, eta conditioné eguinic, cõdemnatia ezpaliz bihurtcen hamabost egunen barnian, harc iguaren behar cian pena, eta suplicioa patituco ciala haren lekhutan, pacto horren azpian, bata ialguida carceletic, eta bertcia han sarthu haren plaçan, cer guerthatu da, hitça cen beçala,

hamabost egunen barnian, criminela itçuli cen presunteguiala, beré adesquidiaren beré bermeguoatic deliuratcera, Denis Tyranac ikhussiric bataren amorioa, eta bertciaren leialtatia, eta amiraturic bi adesquidé hayen coragia, criminelari, eta condematiari eman cian bicia, eta biac othoitu, bera heren adesquidé beré compañian recebi leçaten hayen adesquidé nahicela bici, eta hil.

Norc eztu amiraturen, eta ohoraturen bi paganoren artian amorioabat hain leialic, eta religiosic, eta hayen alderat, Tyran handibaten cortesia, eta clementia handia. Baina neuré adesquidia, norc eztu amiratuco, eta adoratuco, Iesus guré Iaunac, gratiazco leguian, guri orori erakhussi dian amorioa, eta adesquidetarçuna, gu oro, natura humanoa oro, personer çagoen, eta captiuo deabruaren carcelian, cer eguindu guré Iaunac, guré adesquidé handiac, eta leialac, carcelian sarthuric guré
[127] plaçan, hantic idoqui guitu oro, eman orori bicia, eta libertatia, eta berac beria galdu, eta iocatu, guré salbatceco, *Exinaniuit semetipsum forman serui accipiens, & habitu inuentus, ut homo,* beré buria, ezdeüstu du, eguindu beré buria esclauo, eta captiuo, eguinda guiçon, guiçonaren salbatceco. Eztu nahi deus guguanic guré adisquidiac, bere amorioaren, eta adesquidetarçunaren recompensutan guré amorioa, guré bihotça, guré borondaté hona eta guré adesquidetarçuna baici, hura baita guré adesquidé, erraitendu gu haren adesquidé içanen guirela, haren maniac eguin baditugu. *Vos amici mei eritis, si feritis quæ præcipio vobis,* ené adesquidiac içanen ciraté ené maniac, eta ené leguia beguiratcen baduçué. Guré honac, guré ohoria, gure bicia, guré içatia, guré conseruationia, guré Iaunari, eta guré bermiari, çor dugu dugun othoy ohora, eta maita guré honqui eguilia, guiten haren adesquidé hura guria içan den beçala, eta nola guré obligationiac harganat, handiac baitira, guré amorioac harganat, eta guré adorationiac, iusto da handi diren eta ceren, hura guré adesquidé den beçala, gu ecin beiquiraté harenac, ezpaditçagu haren maniac onsa beguira, eta ezpadugu haren legué saindia, eta berondaté saindia complitcen, guré borondaté propia abandonaturic, dugun harena bessarkha, han bici, e'a han hil, resolutioné saindu horren hartceco, guré hilciaz behardugu orhitu nic eztaquit remedio, ez secreta, ez bidé hoberic, eta guré herioaz orhitceco, dugun ezquiriba vrhezco leteretan beçala, guré bihotçaren erdian Iesv-Christen passioné saindia, eta haren hiltcé dolorosa. Adesquide-
[128] batec beria gaztelutic, presonteguiticidoquiten dianian, harē bermé sarturic, eta haren çorra beré gain harturic, hartceduna beré morsatz, eta diharuz, beré hō propitic pagatcen dianian eta guero hari oroz quitança eguiten, eta donationé, promez emaiten hari iagoiti ez deus galdatcera beré hartciaz, eta beré pretentioniaz, baina solamenté errai-

ten drauconian content nuçu çuré borondaté honaz, maita neçaçu, eztut nahi cuganic deus, çuré amorioa baicy, erran beharda ordu hartan halacoa, adesquide hona dela, leiala, fidela, eta quasi pare gabia, amens egunco egunian, elaite ediren ehunetaric bat, edo bigua ; cecuria hambat da gaixto, eta corrompitu, non adesquidetarçuna mundutic akhaçatu, eta arras galdu baita, ezta edireiten, tromperia, perfidia, gaixtakharia, eta adesquidé falsuric baici.

Bada Iesvs guré Iaunac halaco adesquidia içanda guganat, non guré çorrac oro pagaturic beré odalaren despendioz, deabruaren presonteguietaric, eçarri baikhutu libertatian, eman orori bicia, eta berac beria galdu ororen salbatceco. Ez tago deüs guri galdez, guré amorioaren, eta bihotçaren baici, norc eztu halaco adesquidia maitatuco, eta haren herioaz orhituric, nor ezta haren ondoan beré hilciaz orhituco, onsa biciric, onsa hilceco.

Guré Iaunac beré buria çordun eguin du guganat, ez deüs guganic harturic, baina berac beré placeriala promez eguinic. Hala dio S. Augustin Iaunac, *Debitor nobis factus est Deus, non aliquid accipiendo, sed quod ei placuit, promittendo.* Hongui eguilé handi hontçaz, haren hilciaz, eta beriaz orhitcen eztena, ezta nahi onsa bici ez onsa hil, ez eta salbatu. Baina bai, bidé handitic, eta largotic Ioan infernurat. [129]

S. Augus. Serm. 16 de verbis Apostoli

Maitaçaliac behardu maitatu gauça maitatia, harganic deüs honic, esperança gaberic, eta harganic deüs damuric ahal duquienaz, veldur gaberic, adesquidé honac beria behar du diot maitatu, beré adesquidiaren amorecatic, damiaren veldurra, edo honaren, eta prouechuaren esperança consideratu gaberic, hura daté adesquide hona, eta han daté adesquidétarçuna osso, eder, eta complitu, hala dio Ciceronec, *Amare, nihil est aliud, nisi eum ipsum diligere quem ames nullâ indigentiâ, nullâ quæsitâ vtilitate;* amorio, edo adesquidetarçun hura deithatcenda *Amor beneuolentiæ* amorio chahubat, eta purbat, noiz eré, çuré adesquidiac, çuré cihauren amorecatic maithatcen baiçutu, eta çuc hura, hala hala haren beraren amorecatic. Bada bertcé amoriebat ezpaita hain noblé, ez hain eder, nola lehena, hura da, *Amor concupiscentiæ,* noiz eré gauça bat, edo personabat, maithatcen baitugu, hantic, edo harganic esperãça dugun prouetchua gatic, eta ez beraren amorecatic, halacoac beré burua maitiago du, eciez beré adesquidia, eta eliro maita beré adesquidia espalu cerbait harganic esperança eta haren adesquidétarcuna ezta generos, noblé, eta delicatu, lehena den beçala.

Cicero lib. de amicitia

Bada Iesvs guré Iaunac maitatu gutianian, erossi, eta salbatu, eta gugatic hil, eztu deüs eguin beré buriagati, oro gugatic, guré amorecatic eguindu, guc ezcundian deüs hari emaitecoric, eta etcian deusetan eré guré beharric hartan erakhussidu cenbat haren amorioa guganat

handi cen, noblé, pur, eta deliçatu, eta guc nahi ezpadugu hura maitatu
[130] haren beraren amorecatic amens dugun maita, ohora, eta adora, harganic vkhen dutugun eta esparança dutugun dohain, gratia honqui handien amorecatic, edo amens, ifernuco pena handien veldurrez bereré, bertcela ingrataс, eta gaixtoac içanen guira, eta orhitu faltaz Iesv-Christen herioaz, guriaz ezquira orhituco, eta gure hilcia, içanenda hiltcé gaixtoa, eta malhurosa, *Mors peccatorum pessima.*

Alexandré handia egunbatez Ioan cen, Darius Persaco Erreguia guerlan garaituric, haren amarē, emaztiaren eta alauaren, hirur Princessa eder hayen ikhustera, eta visitatcera eta consolatcera, ceren guerlan hirurac presoner hartu baitçutian, andere hayen camberan sarthu cenian, anderé hayetaric guehiena hassi cen lehenic salutatcen Ephestiō deithatcen cen, Alexandrec cian Aitoren semeric maitenaren, vstez hura cen Alexandré : anderé gaiçoa, eçaguti cianian trompatu cela, eta bata berciagatic hartu ciala, ahalqué handibatec beguitartia estaliric, confusionetan baratu cen : baina Alexandrec berehala consolatu cian, erraiten cerolaric, Anderia, etcira trompatu, ephestion bertce Alexādrebat da, *Ephestio est alter Alexander*, Ephestionec valiodu Alexandrec beçanbat. Princé harc consolatu cian anderé hura heldu çaucon vstegabiaz, eta erakhustera eman Ephestion cenbat mayté cian, eta nola beré buria beçanbat estimatcen cian.

Baina Iesvs guré Iaunac erakhustera emandu beré passionian, beré buria beçanbat, eta guehiago maité guntiala, ceren guré plaça harturic,
[131] guc meritatu gundian pena, eta tormenta, berac, guré lekhutan beré personan igaren baitu, eta patitu, deliuratu gutu condemnatuz gueroz burreuen escuetaric eta berac beré buria gugatic hayer largaturic, eta abondonaturic, beré bicia eta odola galdu, eta issori, guri salbatceco guriaren, estimatu gutu, eta maitatu beré buria beçanbat, eta guehiago. Adesquidé maité harçatz, eta haren passioné dolorosaz orhitcen eztena, ezta orhituco beriaz, eta beré behar ordian, eztu edirenen adesquideric lurrian, ez celian, eta bai etsay franco ifernian.

Antiquitatiac bertce orduz amiratu du, eta ohoratu, Orestes, eta Pilades bi adesquidé handiren amorio handia, eta amorio leiala, Erregué Thoantesec, Orestes galdu nahi cian, eta condamnatu hilcera, emandu manu beré soldadoer, orestes har deçaten, eta massacra, soldadoac heldu dira, eta edirē Orestes, eta Pilades elgarequila, eçagutu gabé coiñ, çoiñ cen, iaquin gabé, çoiñ cen Orestes, çoiñ cen Pilades, galdo eguin duté Orestes çoiñ cen, hassida mintçatcen Pilades, eta dio, ni niz Orestes, haur niçala Orestes, orē beriā, Orestes minçatuda, eta dio, ni niz Orestes, cen beçala, bata berteiagati hil nahi ciren bi adesquidé handi hurac, eta inocentac, oguendunari bicia salbatu cian. Thoātes

Erreguiac, eta haren soldadoec eçagutu faltaz, çoin cen Orestes, çoiñ cen Pilades, çoiñ cen ogenduna, çoiñ cen oguenic etciana.

Eguiaz erran beharda bi adesquidé hurac leyalac, eta segurac cirela, ceren inocenta nahi baitcen hil, criminela gatic, eta criminelac ezpaitcian nahi inocenta hayatic hil ladin.

Neuré adesquidia, amira eçaçu, ohora, maita eta adora, guré adesguidé, hona, leyala, eta segura IESV CHRITO Iauna, guc behar gundian hil, bekhatia cela causa, emã cen arresta, prononciatu sententia, leguia paussatu, guiçon oroc, hil behar ciala eternalqui, heldu da IESVS guré adesquidia, oguenic etciana, faltaric etciana, inocenta, guiçona cen oguenduna, falta eguilia, criminela, inocenta hil da, condemnatu cenagatic, iustoa, iniustoagatic, hala dio Apostoliac, *Christus semel pro peccatis nostris mortuus est, iustus pro iniustis.* Eta berac beré bicia galdu guiçonaren salbatceco. [132] I. Pet. 3.

Errandu IESVS guré adesquidiac beré aita eternalari, guiçanaren aldé, bertcé orduz poetac erraiten cian beçala Nisus eta Eurialus, bi adisquide handy.

*Me me adsum qui feci in me conuertite ferrum,*
*O rutuli, mea fraus omnis, nihil iste nec ausus,*
*nec potuit.*

Vir. lib. 9 Enéi

Ené aita eternala, ni niz oguenduna, guiçonac eztu oguenic, nic pati deçadan, eta salba dadin guiçona. Neuré adesquidia, IESVS çuré adesquidé honaz orhit bacité, bide honian cira, çuré azquen orenaz orhituric, onsa hilen cira.

Codrus Athenasaco Erreguiac, ençunic, victoria beré etsayen contre ecin irapaizten ciala bera ezpaladi hil combatian, eta ençunic oracliac eman ciala erraipostu haren etsayer, galdia cirela, Codrus hil baleçaté, ençunic halaber, haren etsayec eman çutela deffensa biciaren penan, beré armadaco soldadoer, oguenic eleçaten eguin, eta ez colpuric eman Codrus Erreguiari, oracliac erran cian beçala, victoriaren hobequi irapaitzteco ; Erregué hon harc, cer eguindu, bere resumaren salbatceco, esquale pobrebaten abitiac harturic, eta bere buria desguisaturic, bere buria hileraci cian colpuz, beré armadaren, eta beré herriaren, beré biciaren despēdioz salbatceco ; Erregué hona cen Codras, harc beré populiaren bicia maitiago cian, eciez beria. [133]

Baina IESVS guré Erreguia, oraino Erregué hobia içanda guretçat, salbatcen ahal cian, lehen erran den beçala, beré populia, bera hil gabe placer vkhen balu, baina guri eracusteco maite gundiala, guré adesquide hona cela, bere Diuinitate adorabliaren abitu ederrac gordé ditu, eta estali, guré humanitaté miserabliaren pian, eta desguisaturic guré haraguiaren pian, beré buria deabruari, eta mundiari quasi eçagutu

eraci gaberic, hilda gugati Caluariaco mendian, salbatu eta erossi beré
1. Cor. 6 populia, beré odolaren despendioz, Apostoliac erran dian beçala, *Empti estis prætio magno,* pretio, eta soma handitan erossiac guirela

Neuré adesquidia, Iesvs çuré adesquidé honçaz orhitcité, nahi bacira, eta ez orhituco cira çuré hilciaz, eta bidé hontan sarturic, onsa hilen cira bidé ederrian ezta behar gueldìtu, goaçan aitcina ikhussi behar dugu hirur garren arracoiña.

× × × × × × × × × × × × × × × × ×
× × × × × × × × × × × × × × × × ×

[134]

# HIRVR GARREN

*arracoiña porogatceco, onsa hilceco bidia dela herioaz orhitcia.*

HERIOAZ minçatu diren guciac arcordu hôtan dira, herio dela be-
2. 2. q. 164. art. 1 khatu originalaren pena, haren arranda, eta haren irabacia, *Mors est pœna peccati originalis.* Herioa ezta deusere bekhatu originalaren pena
Rom. 6 baici hala dio S. Thomasec, Apostoliac ere ber gauça dio, *Stipendia peccati mors.* Bekhatiaren gagia, eta irabacia herioa. Hapalago harc berac
Rom. 8 dio, *Corpus mortuum est propter peccatum.* Gorpitça hil dela, bekhatia dela causa. Epistola hartan berian Apostolu harc berac dio, guisa hon-
Rom. 5 tan minço delaric herioaz, *Per vnum hominem peccatum intrauit in orben terrarum, & per peccatum mors, & ita in omnes mors pertransiit in quo omnes peccauerunt.* Guiçonbat dela causa, bekhatia sartu da, eta ginda mundura eta bekhatiaren moyenez herioa eta herioac gucia direnac oro igaren ditu, colpatu ditu, eta guiçon haren personan, oroc eguin dute bekhatu.

Hambatequi herioa ezta deusere priuationebat baicy, biciarē priuationia, eta ceren gauçabat hobequi nehorc eçagutcen, eta ikhusten baitu, gauça haren contrario eçaguturic, eta ikhussiric, hala nola churia, belçaren aldian, Philosophec erraiten duten beçala, *Contraria contrarijs opposita magis elucescunt,* gauça contriac, beré contren aldian
[135] hobequi aguertcen direla, dugun ikhussi, privationé honen contria baita bicia, çombat manerataco den, hantic ikhussico dugu prouationé haur baita herioa, nolaco den.

Arima da biciaren, eta operatione corporalaren, principiobat, *Anima est principium vitæ, & operationis corporalis.*

Gratia da biciaren, eta operatione spiritualaren, eta meritorioaren

hatsarria, eta principioa, *Gratia est principium vitæ, & operationis spiritualis, & meritoriæ, lunen gloriæ est principium vitæ, sine operationis beatificæ, et æternæ,* Gloriaren arguia da, biciaren, eta operatione beatifico, eta eternalaren hatsarria, eta principioa.

Hargati errayten dugu, bicia hirur manerataco dela, corporala, spirituala, eta eternala : eta ceren herioa baita biciaren priuationia, hantic enseguitcenda, hirur herio suerté direla, corporala, spirituala, eta eternala, herio corporala da arimaren gorpitcetic priuationia, edo separationia, herio spiritualada, gratiaren arimatic priuationia, edo separationia, çoin eguiten baita, culpa, eta bekhatia dela causa. Herio eternala da, gloriaren arguiaren priuationia, çointan baita consistitcen, bicitcé eternala paradusia.

Hirur herio mota hauc, nahiceren aldetic consideraturic, horriblé dira, cruel, belz, icigarri, izaragarri, principalqui lehena, baita corporala, bada guiçona segurda etsay handi, terriblé, horriblé eta icigarri honen escura erori behardiala, eztaqui eguna, ez orena, eztaqui noiz, eta nola, bena badaqui haren colpiari ihesiric ecin eguiten diala, badaqui etsay horriblé haren beguitarté belça, eta terriblia behin ikhussi behar diala, eta ez guehiago, ezteia possiblé guiçona so eta beha egon dadin animale gaixto haren colpia nontic ginen çayon, bay, egon behardu, goyaita, eta sentinelan gaüaz eta egunaz, çuhur bada, bertcela harenac eguin diala condu emaçu. Haur da ené hirur garren arraçoiña, porogatceco libru hontan, onsa hilceco bidia, baita herioaz orhitcia, dela ardura consideratcia, herioaren crueltarçuna, horribletarçuna eta haren malecia handia. [136]

Gauça naturala da, animalé orori beré biciaren mayté vkhaitia, eta haren conseruatceco moyen onroren, eta remedio ororen curiosqui cherkatcia, hala nola bertcé aldetic, baita natural gauça orori, herioaren hastio vkhaitia, hari ihessi eguitia, haren beldur içatia. *Bonum est, quod omnes appetunt,* hona da oroc mayté dutena, oroc desiratcē dutena, dioté Philosophec, eta gaitça, baita haren contria, hura oroc hastio, oro haren ihesi, oro haren beldur dira.

Ardiac eta achuriac, ikhusten dianian hartça, edo otsoa beraganat giten, haren beldurrac iciturik, ikharatcenda, et marrakhaz, lasterca ihesi doa arçaiña, eta arçan hora, non baitira, hayetara, cerē baitaqui onsa naturaren leguiac, eta instintoac erakhutxiric, otxoa dela harē etsaya, eta haren ialia, eta harc attrapa badeça, bicia galdu behar diala.

Guiçona, baita animale ororen Erreguia, baditu harc eré beré leguiac, beré sendimendiac, eta arraçoiñaren arguiac, Philosophec eré hala emayten deraucoté beré içeña, *Homo est animal rationale,* guiçona dela animale raçonablebat, baditu beré etxayac mundu hontan visibliac, eta

[137] invisibliac, baina ez bat hain cruelic, eta hain maleciosic, nola baitu herioa, bertcen contré noicic behin deffendiatcenda, bena herioaren, contré ezta armaric, ez deffensuric. *Contra vim mortis non est medicamen in hortis.* Herioren colpiaren, eta haren maleciaren contré, ezta belhar honic baracetan edireiten.

Halatan natural da guiçonari beré biciaren, eta haren conseruationiaren mayté vkhaitia, eta haren contria baita herioa haren hastio vkhaitia, haren ihessi ioaitia, haren veldur içatia harçatz orhitcia : ala bena guiçona hanbat gaixto da, eta miserablé, nor daquialaric herioaren colputic dependitcen dela haren onsa, edo gaixqui iagoiticoz, içatia, ezpaita, nahi herioaz orhitu, mundiac eta bekhatiac vtsuturic daduca, eta noiz eré içanen baita, herio vtsiac, guiçon vtsiari colpu vtsubat emanic, emanendu vtsiac, vtsiaren gorpitça lurrari, eta haren arima deabruari.

Guiçon vtsia, idequitçaçu çuré beguiac, so eguiçu herioa çonbat den malicios, eta trompur çuganat, haren tromperiez, eta maleciez orhituric, harçaz beraz orhitcitian onsa hilceco.

Herioa, eta otsoa biac bat dira, otsoac iatendu, iresten, eta deuoratcen, otsoac beçala, bena deusec eré ecin assetcen, ianago nahiago, gormand, eta gulos da animalé hura, bertcé ororen artian, deusec eré ecin assé diro.

Halacoda herioa, bere sortcia, eta içatia Adamē, eta Ebaren bekhatutic, vkhenez gueroz, egunco eguniala drano, iandu eta iretsi sey, edo cazpi mila, vrthé hontan, edo vngureno hontan, eztaquit çonbat

[138] milione guiçon eta emazté, condia eztaqui Iencoac berac baicy, iandu eta iretsi, otso harc, ala baina orano ezta content, ezta assé. Natura humanoa oro arras akhaua, ruina, hil, eta atarra artino, eztu honic vkhenen, azquen iuiamendu generalian assecoda iagoiticoz, an hartino ez, ordian Elia, eta Enoc Prophetac, eta Antechristo gaixtoa hilic eçarri dutinian, heda, heda, beré azquen colpia emanendu bici orori, bena egun hura gin artino otso haren hortz haguinetan treues igarendate, eta igarenen bici, sortu oro. Guiçona soguiçu certan ciren, oren oroz otso minthu, cruelbat dabila çuré aldian inguru, noiz ianen çutian, gogoa emaçu ora drano beçala bekhatian egon bacité, bekhatian vssiquiric, bekhatian ianen çutu.

Herioa, Vipera sugué mota gaixtobat idurida. Sugué hartçaz minço direnac, dioté, haren humiac, beré amaren sabelian concebitu, eta formatu direnian ez tutela eguruquiten sortceco dembora, naturac behar dian operationé, eta termaiño ordinaria, bena beré amaren sabela mocoaz chilaturic, eta hautsiric, sortcen direla ordu gabé eta sortcian beré ama hiltcen, hantic ardiatsidu sugué harc beré içena, *Vipera, quasi vi, pariens,* vipera dela violentçiaz, eta bortchaz sortcen diana.

Mo'dé berian herioac eguitendu guiçonaren cõtré, nola sugué hari beré humec, ordu gabé naturac beré corsu eta dembora bethé, eta complitu, gabé guiçona, eta emaztia beré adinic hobenian, beré gaztetarçunian, beré indar, eta ossagarri handieniã atrapatcen ditu hanitz orduz, hiltcen eta massacratcen, eta beré colpu mortala ichilic, ez vstian emanic, hambat gende gastiari ; nola çaharrari prõqui, eta subitoqui, [139]
bortchaz, eta violentiaz, bata eta bertcia hoberat, eta thombalat eramaiten ditu, eta han lurrez estaltcen, aguian, Iesvs, erraiteco, beré arimaz, eta beré eguitecoez, pensatceco lekhuric, ez demboraric eman gabé, halacoen hilcia da, hilce tristia, belça, eta malhurosa, ceren dangeros baita, halacoac hiltcen diren, hirur herio suertez, corporalqui, spiritualqui, eta eternalqui, eta galtçen dutila hirur bicitce suerté direnac, bicitcé corporala, spirituala, eta eternala, hargati Eliça saindiac othoitcé haur eguitendu Iencoari letariñetan beré haur fidelen aldé eta faboretan, *A subitanea, & improuisa morte libera nos Domine.* Iauna othoy, goarda, eta delibra guitçatçu herio subito, ez vstian, pensatu gabe giten den, herio gaixto hartaric. Neuré adesquidia, çombat eré ezpaituçu ikhusten, sugue gaixtobat mocoa poçoaz betheric, çuré aldian dabila oren oroz çuré çaurtu, eta colpatu nahiz, haren maliciaz, eta crueltarçunaz orhitcité estatu honian haren colpiaren errecebitceco.

Herioa, hor errabiatu, gaixtobat idurida horac gendia edo Cabalia vssiquiten dianian, partebat eramaytendu, eta partebat quittatcen, bena eztu peça oro eramayten eta hora errabiatu bada, vsiquiten diã gauça beré vsiqui saxiaz, eta corrompitiaz, coçatcendu eta corrompitcen, halaco moldez, non lehen beno lehen ezpadu itxasoco vrian vkhutcen, eta chahatcen, errabiatcen baita eta hiltcen, beré forman, herioac, guiçona, eta emaztia vsiquitendu, eta beré vsiqui gaixtoaz coçaturic, eta corrõpituric partebat guiçonari eramaitendu eta hiltcen, eta berſcé partia ossoric quitatcendu, eztu hunquiten, gorpitça arras era- [140]
maitendu, eta arima, ecin baitiro, hunqui gabé, quitatcendu ossoric, ceren imortal baita beré naturaz eta ecin hiltcen baita, hargati herioac du icena, *Mors à morsu, siuè à mordendo,* eta harc gorpitçari eginten dian vssiquia, hambat da cruela, eta poçoatia, non haren çauria, eta colpia, baita incurablia, eta erremedio gabia, ezta vric, ezta itxasoric, ezta cõtrepoçoaric, ez barberic harẽ cocia sendotcen ahal dianic, ala den Aita saindia, eta Cardinalia, a la den Erreguia, Princia edo laboraria, aberatza ala pobria, hor harc behin vsiquiz gueroz hil behardu, eztadila nehor trompa, gogoa eman beça hor haren vsiquiari, hargatic errandu Poetac ederqui ; *Mors æquo pede pulsat pauperum tabernas, regunque turres,* bardin bardina, eta egoalqui galtcen, eta ruinatcen dutiala pobren bordac eta cabanac, nola Erreguen torriac, eta

iauregui gazteliac, ezta han differentiaric, reserburic, ez eta priuilegioric aberatzaren, eta pobriaren artian.

Neuré adisquidia, çuc vzté beno lehen hor errabiatu hura ginen da çuré vsiquitera, nontic nahi baita, ala den cangotic, azpitic, burutic, bessotic, bihotcetic, ala sabeletic, vssiqui bacitça, non nahiden, hunqui bacitça ber, ioan cira, galdu cira, hil cira othoy, hor errabiatu haren vsiqui gaixtoaz eta maliciosaz orhitcité, nahi bacira onsa hil, eta salbatu.

Herioa, soldado gaixtobat, Capitano cruelbat, tyranno misericordia gabebat idurida, guerla handibat, eta horriblebat eguitendu guiçonari, eta emaztiari, gorpitça porrocaturic eta arrabazcaturic, guerla hartan erhauts, eta lur guertatcenda, haren çaiñac, eta eçurrac hurturic,
[141] ikhara dabiltça, haren odola nahassiric, heraquitcenda.

Haren arima gaichoa, nahi gabez beré lekhutic, eta engonguiatic ialqui, eztaquianez norat doen, ala infernurat, ala celurat, doloré, eta regretu handirequin beré gorpitcetic, ialquitenda, eta tristura handitan, harganic congit hartcen, eta hari azquen adioa erraiten. Particularqui soldado cruel harçatz colpatia, edo den guiçona, edo den emaztia, bekhatoria bada, eta bekhatian biciric, bekhatian hiltcen bada, beré concientia propiac erratcendu, eta iaten barnetic, eta campotic, aldé orotaric, hala dio scritura saindiac, *Foris vastabit eos gladius & intus pauor.* Ezpata çorrotzbatec campotic deseguinen dutiala gaixtoac, eta
Deut. 32 barnetic, veldurrac eta aprehensioniac, glosac dio, *Foris, id est in corpore, vastabit eos gladius, id est mors, diuidens animam à corpore : & intus pauor diuini iudicij animam condemnantis.* Campotic herioac ruinatuco dutiala, trenkhatcian, eta beretcian arima gorpitcetic, eta barnetic Iencoaren iuiamendiaren veldurrac, ceren arima iuiaturic, condemnatuco baitu pena eternaletara.

Halacoaren concienciac vkhanendu guerla handibat, soldado traidoré harc emanic, beré contré campoan ikhussicodu beré iugia samurturic, eta coleraturic, barnian beré culpa falten accusationia, eta borreua, beré aldian beré etsaya armaturic, çoin baita deabrua, bere pian infernia, ahoa çabalturic, haren hantic barna iresteco.

Guerla hura, pundu hartan icigarri içanenda guiçon bekhatoriari, ezta içanen bat, non eztadin ikhara gudu eta bataïlla hartara gin dadi-
Heb. 10 nian, hargati dio Apostoliac, *Horrendum est in manus Dei viui incidere :*
[142] Horriblé dela, eta icigarri erortia Ienco biciaren ezcura. Prophetac eré minço denian guerla handi harçatz, bekhatore momento tristé hartan
Ezech. 32 sofferituco duenaz, dio, *horrore nimio formidabunt,* veldur eta lotsa handi batec harturic ioric egonen direla. Baina orano handiago içanenda veldurra beno, pena, tormenta, supplicioa, punitionia, çoin arima gaichoa,

miserablé harc infernian iagoiticoz patituco baitu, soldado gaixto harc, herioac, pundu hertsi hartan separa badeça beré gorpitcetic bekhatu mortalaren estatian, haren conditionia hambat içanenda miserablé, eta maradicatu, non haren aypamenac berac ené luma ené escuan ikharatcen baitu, eta nigarra ené beguietan behera ialqui eraciten baitu. *Desiderabunt mori, et mors fugiet ab eis.* dio spiritu saindiac Apocalipsian, nahi diraté hil, bena herioac eguinendu ihesy hayeganic. Arima damnatiec herioaren esqué eta bilha ibilico dira su gar handi hartan, bena eztuté edirenen herioa, hayen ihesi ioanenda, gorderic egonenda. Apoc. 9

So, eguiçu miserablé hec, certara erori diren, herioa da biciaren corruptionia, eta priuationia, bicitcia da içatebat bicidiren orori, *Viuere viuentibus est esse,* eta içaté oro hon da, *Omne ens est bonum,* Philosophiac erakhusten dian beçala, ala bena, miserablé hec, beré penen handitarçuna dela causa, maitiago eta nahiago vkhanen dute ez içatia, eciez içatia, herioa eciez bicia, ceren miseria hartan, sugar hartan biciric egoitia beno, hayençat hobiago baita, ez içatia, eta hilcia, eciez içatia, eta bicia, Philosophen Princiac errandu arrçoiña, *Carere malo est, quoddam bonum,* gaitcic ez vkhaitia baita cerbait hon; eta halaber Doctor Angelicoac dioen beçala, *Melius est non esse, quam male esse.* Hobeda ez içaitea, gaixqui içaitea baino. Hargatic orano, errã cian Iesvs guré Iaunac, ikhussiric eta eçaguturic beré iaquitiaren miraillian, Iudas beré dicipulu traidoriaren bekhatia, desperationia, eta haren damnationé eternala, *Bonũ erat, si natus nõ fuisset homo ille.* Hon çuqueyen sorthu ezpaliz guiçon harc, edo sorthu, eta beré hala hurtu, hondatu, eta ezdeus bihurtu baliz. Eth. 5 [143] S. Thom. 39. q. 9 art. 3. in corpore Math. 26

Hobé liçaté beraz desdichatu oren gaitcian sorthu diren miserablé hayencat, hilcia, eciez bicia, hiltcen ahal balira, bena ibilico dira herioaren ondoan, bena ez edirenen herioa. *Quærent mortem, & non inuenient eam.* Apoc. 9

Neuré adesquidia soldado traidore haur, baita herioa, honen crueltarçunaz, eta misericordia gabiaz, orhituric, bicicité bakhian, Iencoaren gratian haren maleciez, eta tromperiez, haren colpu mortalez trufaturic, munduco guerlac akhabaturic, Iencoa baitan bakhian hilen cira.

Venturaz edirenen da çoimbat spiritu gaizto, eta curioz çoiñec erranen baitu, hor errabiatu harc soldado traidore harc, herioac, beré vsiquiaz, eta beré colpiaz guiçona oro, gorpitça eta arima, biac hiltcen dutiala, eta aguian beré erran gaixtoa, eta falsia, nahi luqué porogatu esquirituraz lekhu hontaric, eta passaie hontaric, *Vnus est interitus hominum, & iumentorum, æqua est vtriusque conditio, sicut moritur homo sic & illa moriuntur.* Aberen eta guiçonen hilcia bat da, guiçona, hiltcen den beçala, aberiac eré hiltcen dira, bien conditionia, bat, da. Ecles. 3 [144]

Horren errapostua ezta gaix emaiten, lekhu errã denian endelguateenda gorpitçaz, eta ez arimaz, çoin baita gauça spiritualbat, eta immortalbat beré naturaz erran dugun bcçala, hala dio ere escriturac
Eclesiast. vltimo *Reuertatur puluis in terram suam vndé erat : & spiritus redeat ad Deum, qui dedit illum.* Bihoa erhautsa, itçul bidi erhautsa beré lurrerat, nontic ialqui baitcen harat : eta spiritua bihur bedi, itçul bedi Iencoaganat çoiñeganic ialqui baitcen eta çoiñec eman baitçian. so eguiçu nola escriturac, deithatcen dian guiçona ; lur, eta spiritu, gorpitça lur, et arima spiritu, erran nahi baita, gorpitça mortal dela, hil behar diala, arima ecin hiltcen dela, immortal dela, eta iagotticoz bertcé mundian immortal içanen dela, bicico dela, edo Iencoarequin haren gloriã eternalqui huros, edo infernuan deabruaruquin eternalqui malhuros.

Erran dugu lehen eré herioa volurbat dela, eta ohoinbat, guré errana eré scritura saindiaz porogatu dugu asqui onsa, eta larguoqui, heben orano dugun ikhussi haren voleriac, eta ohoinqueriac çombat handi diren, eta malicios, guiconaren contré, hobequi consideraturic haren crueltarçuna, haren horriblé tarçuna, eta malecia, hobequi harçatz orhit guitian, onsa eta hurosqui Iencoaren gratian hiltceco, ceren, eztugu bertcé intentioneric libru hontan, haur baici, porogatcia, onsa hilceco bidia dela hilciaz orhitcia.

Herioac guicona, buluz gorri gorria ecartendu hilcian, edequiten derauzco azquen passagé hartan, beré honac, gucia, beré vrhiac,
[145] cil harrac, lurrac, haciendac, echiac, deuseré vtci gabé, hurosdaté athorrabat, mantharbat, edo mihisebat badu hoberat ioaitian, hala er-
[Iob. 1 raitendu Iob saindiac, *Nudus egressus sum ex vtero matris meœ, & nudus reuertar illuc.* Buluz gorriric gin ninçan neuré amaren sabeletic mundura, eta buluz gorriric noa lurrerat.

Tim. 1. 6. Hala dio orano Apostoliac, *Nihil intulimus in hunc mundum, haud dubium, quod nec aliquid aufferre possumus,* Eztugu deus ekharri mundu hontara, eta eztugu deus mundu hontaric eramanen. S. Bernard Iaunac dio, *Mirabilem ianitorem, scilicet mortem in exitu, posuit mundus, qui nihil suum secum trahere permittit.*

Portal çain agudobat eçarridu munduac, baita herioa, azquen passuan, portal çain, eta ieulier harc eztu nehori eré deus vzten, beré honetaric berequi eramaitera. volur, eta ohoin haur gaiztoa da, eta agudoa, bicia, eta honac oro edequiten ditu guiçonari mundu hontaric partitcian, sosbot, edo franbat vtci gabé beré bidiarén igaraitiaco, bertcé mundiala helceco.

Volur eta ohoin gaixto harc, herioac guiçona, bulutcendu beré placer, voluptate, contentamentu orotaric, eta nola comunzqui guiçon bekhatoriac, mundian beré placerac maité baititu, *Trahit sua quẽque*

*voluptas,*, nor beré bekhatiac tiratcen diala, dio poetac, dugun erran, desplacer handiric eguiten diala herioac guiçonari beré gauça mayten edequitiaz, edequitendu, herioac aita semiari, semia aitari, ama, alhauari, alhaua amari, areua anaiari, anaie areuari, senharra emaztiari ; emaztia senharrari, adesquidia, adesquidiari, Erreguiac Erresumer, [146]
Erresumac Erreguer, aita saindia Eliçari, apezcupiac beré Dioceser, guc guré demboran galdu dugu guré herrian, bi maytia, mayteric, eta Gassion, baiña gincoac eman drauco, Sanson handibat, guré consolatceco, eta guré nigarren vchucatceco, Ienco honac eman badiço osagarri, eta bicitcé lucé, guré desira den beçala, gure Eliça, eta guré herria, handi, eta azkhar içanenda guré etsayez traffatceco, eta hayen veldurric ez vkhaiteco.

Labur erran deçadan, herioac, gauça maitia, eta maitagarria, maita çaliari, ez vstian edequitendu, eta doloré, desplacer, bihotzmin handiric hari emayten.

Herioac, volur, eta ohoin harc, doloré, tormentu, eta min handiric eguitendu guiçonari hilcian, haren gorpitceco membriac oro hambat ederqui elguarren artian beiçaudian iossiric, eta vnituric, ohoin harc, descosutcen, eta barreiatcen ditu placer dianian, erhausten, eta deseguiten, eta nola arimaren eta gorpitçaren vnionia, orapiloa, amorioa, baita hertsi, askhar, eder, eta maitagarri, herioa giten denian, vnione haren barreiatcera, orapiloaren lachatcera, amorioaren deseguitera, gauça eder, askhar, hertsi, eta maitagarri haren flakhatcera, beltcera, eta ichussi rendatcera, norc eztu erranen herioa dela, gauça cruela, horriblia, belça, eta terriblia, eta halacoa bada, den beçala, nor ezta egonen haren veldurrez, haren beha, eta nor ezta harçatz horit içanen, haren aiduru egonic, onsa hilceco.

Volur, eta ohoin hura, herioa dela causa, haren cruel tarçunac, eta maleciac direla causa, errandu Philosophen princiac : *Omnium terribilium terribilissimum est mors.* Ororen belcena, gaixtoena, terriblena, herioa da. Ethic. 3 [147]

Erran nahidu, erharçunac, presunteguiac, pobrecia, mesperechiac, hotça, beroa, desohoriac, eta bertcé munduco disgraciac, desplacent dira haztiogarri, eta guiçonari, hanitz doloré, eta tormenta emaitē baina batec eré ez hanbat, nola herioac. hura da ororen lehena, eta azquena, harc du guicona, eta guiçonaren gorpitça, eta arima, nahasten, lotsatcen, ikharatcen, eta beré goncetic, eta clotetic idoquiric, bata lurrerat, eta bertcia celurat, edo infernurat iagoiticoz akhaçatcen.

Herio terriblé hori, icigarri da mundu gucier handier, eta chipier, iustoer, eta iniustoer, baina principalqui nor eré bekhatian bici baitira eta bekhatiau hiltcen, hayençat, hurac dira miserabliac, eta malhurosac.

hayen herioa da, herio gaiztoa, eta herio helça, hargati errãdu Propheta
Psal. 33 Royalac, *Mors peccatorum pessima*, bekhatoren hilcia dela, hilcé gaixtoa.
Bekhatoren herio gaizto, eta maradicatu hura, guerta eztaquigun,
guré Iaunac gomendio eguitec draucu guré arimaz, hura perecha deça-
gun, eta munduco honez casuric ezteçagun eguin, erran dianian, *Quid
prodest homini, si vniversum mundum lucretur animæ vero suæ detrimen-
tum patiatur ?* cer provetchu du guiçonac, mundia oro irabaçaric, eta
bereturic, beré arima gal badeça. Asqui clar, eta garbi minço da guré
salbaçalia, bataz dio mundia, eta munduco honac ez deus direla, eta
bertcé aldé dio guré arima baita immortal, harçatz arrankhura har de-
[148] çagun, eztadin ioan infernurat, guré bekhatiac direla causa, baina guré
obra honen moyenez, Iencoaren Erresuma eternala irabaz ahal deçan.
Iob saindiac eré baçakhian bekhatoren herioa, çombat cen gaixto, eta
Iob. 1 miserablé, oihu, eta heyagora eguin cianian mundu orori, *Pellem pro
pelle, & omnia quæ habet homo, dabit homo pro anima sua.*
Larria, larriagatic, eta beré honac oro emanenditu guiçonac, beré
arimagatic. Lurreco honac oro eztira lur baici, lurreco honec eztitutė
balio arimabat, guiçonac, çuhur bada, beré honac, beré larria, bere
bicia galbitça, beré arimaren salbatceco, beré odola oro, ezquen gote-
lara drano isor beça guiçonac, sua, burduiña, vrkauia, lehen sofferi
bitça, eciez bekhatu mortalbat eguinic, gaixqui hilic, bekhatian hilic,
seculacoz bere arima damna deçan. Neuré adesquidia, so eguiçu Iob
çombat herioaren veldur cen, eta çombat, beré arima mayté cian, nahi
nuque, haren veldurretic, eta haren amoriotic gundian bigua, edo
hirur bihi, esparança nuqué ezquindiriola eguin, bekhatoren hilcia,
baita hilce gaixtoa, baina bay iustoen hilcia, baita hilcé hona.
Comunsqui herioa ororen da terriblé, erran dugun beçala, baina
principalqui, nor eré mundu hõtan baitaudé iossiric, eta itçaturic,
beré placeretan, beré honnetã, eta voluptaté gaixtoetan, hayen ororen
da horriblé, eta icigarri, ceren herioac halacoac bat batian, ezvstian
beré gauça maytetaric, separatcen baititu, eta apartatcen iagoiticoz, eta
çonbatenaz baitituzté mayté munduco honac, eta placeraç, hambatenaz
da hayen regreta eta desplacera handy, hayē galciaz, eta hayetaric
[149] separaturic, eta priuaturic egoitiaz, hala dio Salomon çuhurrac, *O mors
Ecls. 4 quam amara est tua memoria homini habenti pacem in substantijs suis.*
O herioa, a la baita çuré memoria, çuçatz orhitcia, aspré, mingar,
tristé, eta karratz guiçonbati, mundu hontan, bere aisala, honez, eta
ederrez betheric, bakhian bici denian. halacoac eztu nahi ençun aipa-
menic beré hilciaz, eta dangerosda, halacoac beré vsatu gabiarequin,
herioac beré bekhatiã atrapaturic, hilcé malurosbat eguin deçan.
Neuré adesquidia, nahi ducia çuhurqui eguin, ezteçaçula mundia

sobera mayta, çuré placerac, eta çuré honac gutiago, emaçu çuré bihotça, eta çuré amorioa Iencoari, halatan, herioaren orena gin dadinian, mundu hontaric partitceiac, eztrauçu dolu eguinen, eta herioa, çombat ahal beliçaté horriblé, eta terriblé, haren veldur gabé Iencoaganat alagueraqui ioanen cira,

Estugu behar dudatu herioa eztela gauça ororen horriblena, eta gaixtoena, Iesv-Christo bera haren ueldur içanda, guiçon beçala, eta ikhussiric haren arima sacratiac, çoin beiçagoen haren gorpitz benedicatuarequin hain ederqui, eta bortizqui, unituric, eta orapilaturic, behar ciala harganic partitu eta separatu, herioa cela causa, haren verdurrac, eta aprehensioniac, guiçon beçala honquitu cian, eta lotsatu haren bihotça, eta herioaren veldurra erakhustera eman cian, beré aita eternalari, eguin cian othoitciaz oliueteco baratcian forma hontan. *Pater mi, si possibile est, transeat Calix iste à me.* Ené aita eternala, possiblé bada, ni ezcapa nadin hil gabe, iguaren bedi calitça haur eneganic, bihoa calitça haur ené ganic.

Ezta amorioric, ez orapiloric, hain hertsiric, ez azcarragoric, eta maitiagoric nola arimarena, eta gorpitçarena, eta bi adesquide maité hayen elgarganic partitcia, eta separatcia, da halaber doloren, eta minen handiena, eta cruelena, halaco guizaz non, ezpaitaqui nehorc eré, çombat cruel, eta sensiblé den hura sofferitcen dianian baici, eta guré mihiac ecin erran diro nolaco den tormentu hura, guré orena gin dadinian iaquinen dugu haren berri, hargatic guré Iauna icitu cen, eta lotsatu, guiçon beçala, ikhussiric beharciala hil, guré salbatceco. Eta hargati, erran cian, *Pater mi, si possibile est, transeat Calix iste a me,* ené ayta, possiblé bada, Calitca haur aparta bedi niganic. [150] Math. 26.

Gure Iaunac ohoitcé hura eguin cianian oliueteco baratcian, herioaren veldurrez, edo oratione hura ençun cen, haren aitaz, edo ez, ençun bacen, etcian hil behar, ençun ezpacen, haren orationia inutila cen, behar gabueric eguina : difficultaté, eta orapilo haur garbitu behar dugu errapostu bacoizbatez. S. Thomasec dio, *Non orauit, sed simplex naturæ desiderium proposuit, non fuit oratio, sed explicatio naturalis affectus, quo Christi humanitas abhorrebat à morte.* Q. 21. ar. 4 in fine

Guré Iaunac baratcian etciala, hitz hayen erraitian othoitceric eguin, baina solamente, representatu ciala bere aitari, desircundé naturalbat beré biciaren conserbatceco, guiçon beçala, halaber hastiotarçun naturalbat, çoin baitçian Iesv-Christex humanitatiac herioaren contré, ceren hura baitcen haren biciaren etsaya eta priuationia.

Actione hartan erakhustera eman cian, eguiaz goiçon cela, eta guiçon beçala herioaren veldurra baciala ceren herioa baita guiçonac ikhusten, eta recebitcen ahal dian gauçaric horriblena, eta cruelena. [151]

Halaber eracustera eman cian, ordian harc erran çutian hitçac, etcirela orationebat, baina haren humanitatiaren representatione naturalbat, ceren ordu hartan berian, minçatu baitcen beré aitari forma hontan, *Non sicut ego volo, sed sicut tu.* Ene aita, eguin bedi çuc placer duçun beçala, eta ez ni nahi niçan beçala beré borondatia, beré aytaren borōdatiari ohorescatu cian, eta hantic ioan cen eguitecoa, beré aytaren decreta complileçan, herio eta passioné dolorosbat gugati iguarē cian, eta soffritu.

Eztu eguin guré Iaunac othoitce, eta orationé inutilic behin eré, noiz eré absolutoqui cerbait beré aitari galdatu baitu, haren othoitcia, eta orationia ordu oroz ençun eta exauditu içanda, ez solamente bera, ençun içanda, baina oraino, guri promes emandu cereré guc haren icenian, haren aytari galdatuco baicundian, hura oro ardiatzico gun-
Ioan. 15 diala. *Siquid petieritis patrem meum, in nomine meo, dabit vobis,* cer eré galdo eguinen baitucie ené icenian, ene aitari, hura oro vkhanen ducie. Erran den actionian, eztu deus galdoric eguin bere aitari, baina bai representatu desircundé naturalbat çoin baitciā haren humanitatiac beré biciaren conseruatceco, agueri den beçala ordian berian haren ondoan errā çutian hitz saindiez, *Verumtamen fiat non vt ego volo, sed vt tu vis :* Ené aita, nic hartu eta esposatu dudan natura humanoa herioaren veldur duçu, eta harganat badiçu odio, eta hastiotarçun,
[152] orotrat eré haur nuçula çuré semé obedienta, eta humila, eguiçu nicatz placer duçuna, complituden curé borondatia, eta ez bateré enia.

Gauça naturala da animale orori, beré biciaren maite vkhaitia, eta haren conseruatcia, eta herioaren baita biciaren etsaya, eta ruinamen-
Boecius dia, bastio vkhaitia, eta ihetsi eguitia. *Omne animal vitam tueri laborat, mortem vero, perniciemque deuitat,* dio Philosopho christino handibatec desircundé natural hori erakhussi cian guré Iaunac, hilcian, eta herioaren veldur hori, guiçon beçala.

Ezta miretsi behar, ceren herioa den hain gauça gaixtoa, itchusia, beltça, cruela, icigarria, terriblia, eta horriblia, eta guiçonari hambat othoy, eta remonstrança eguiten badut ené libruto hontan, harē veldurra, eta memoria, beré bihotcian eduqui deçan onsa hilceco.

Iencoac eguin dutian gauçac oro hon dira, hayetan ezta deus gaixto-
Genes. 1 ric, hala dio Escritura Saindiac, *Vidit Deus cuncta quæ fecerat, & erant valde bona,* Iencoac ikhussi ditu eguin dutian gauçac, eta bere obrac oro, et oro gauça honac ciren, eta obra honac : eta nola bekhatiac ezpaitu deus honic, eztu hura Iencoac eguin : eztiala herioac deus onic, segur da, ceren eztu içateric, ez deusbat da, priuationebat, ecinduqué deus honic.
Sapi. 1 Philosophiac dio, *Omne Ems est bonum,* içaté oro hon dela ; herioac eztu içateric, ezta beraz hon, baina da gaixtoa, cruela, eta horribla.

Herioa eztu Iencoac eguin, hargatic eztu içateric, ez deus honic. Hala dio Escritura Saindian Salomon çuhurrac, *Deus mortem non fecit, nec lætatur in perditione viuorum.* Iēcoac eztu eguin herioa, eta eztu hart- [153]
çen placeric bicien gualcian, eta ruinan, hargati da herioa, gaixtoa, belça, eta monstrebaten paré, itchusia, poçoaz bethia, maradicatia, eta hastiogarria.

Herioa dela ez deusbat segur da, ezta priuatione bat baici, priuationia ez deusbat : hambatequi herio, ez deusa, eta priuationia, hirurac bat.

Hori bera errandu Evangelistac, *Omnia per ipsum facta sunt, sine ipso* Ioan. I
*factum est nihil.* Iencoac eguin ditu gaucac oro, eman orori beré içatia, baina eztu eguin ez deusa, baita herioa, biciaren etsaya, eta içate ororen priuationia.

Iencoac eguin du celia, eta lurra, beré boteré infinitoaz, laur elementac, celian eta lurrian diren gauçac oro, visibliac, eta inuisibliac, sensibliac eta insensibliac, spiritualac, eta corporalac, baina ez herioa, ecin eguiten cian eré, ceren ezpaitcen possiblé eguin leçan, gauça possibliac oro eguiten a hal ditu Iencoac, baina ez impossibliac, halaco cen herioa ; çoin baita privationebat, eta ezdeusbat, erran den beçala.

Ezta behar hargati deus erran Iencoaren botere handiaren contré, hori da perfectionebat hartan, eta ez imperfectionebat, *Non esse effectus, sed deffectus,* Eguiten ahal diren gauçac, eguin ditu, edo eguinen placer badu, placer dianian, guré Iencoac, baina ecin eguiten diren gauçac, ezta eman haren boteriari, eta çuhurtçiari eguin ditçan, falta, eta estakhuria ezta hartan, baina ecin eguiten den gauçan berian, gauça impossiblian.

Iencoaren obretaric berhetciric egonda herioa, hala nola adar idorra, [154]
eta ayhartia trenkhaturic baitago çuhaincetic, eztu vkhen lekhuric, ez içateric Iencoaren creaturen libru handi hartan, hanti campoan egonda, eta egonen eternitate oroz.

Norc eguindu beraz, edo nontic ginda herioa ? Errandugu lehen arrapostu hori : *Per vnum hominem peccatum intrauit in Orbem, & per* Rom. 5
*peccatum mors.* Guiçōbat dela causa ginda eta sarthu bekhatia, eta bekhatiac ekharridu ondoan herioa.

Aita eta ama gaixto harc ekharridu, eta sorthu alhaua gaixto hura, ezdeusac emādu ez deusa, itçalac itçala, priuationiac priuationia, poçoac poçoa, gaixtoac gaixtoa.

Adamec beré desobedienciaz hautsé cian Iencoaren mania, eta galdu Iencoaren gratia, hantic ginda bekhatia, bera ginda nehorc manatu gabé, gratiaren priuationiac, emandu bekhatia, eta bekhatiac emandu herioa, baita biciaren priuationia.

Neuré adesquidia, dugun akhaua hirur guarren arracoiñ haur.

ikhussi duçu, eta ençun asqui garbiqui nahi baçundian ber, herioaren beguitartia nolacoa den, mira eçaçu, eta considera egunian behin haren coloré belça, horriblia, eta icigarria, aguian haren veldurra eta haren memoria çuré bihotciā sarturic orhituco cira çuré hilciaz, onsa hilceco.

Salbatu nahi denac, eta Iençoaren veldurra dianac, comunzqui beré gogoan herioaren orhitmena, aipamena eta veldurra, eduquitendu eta lotzaz herioac trompa deçan, beré goardetan egoitenda.

In vitis Patrum [155] Arsenius deithatu içan den ermita saindubatec, çoin bici baitcen Arcadius, eta Honorius, Emperadoren demboram, ikgussiric beré buria herioaren orenian, eta articulu terriblé hartan, coloria gualducian, eta coragia harequin, haren coloriaren cābioa, eta harē coragiaren flakhacia, remarkhaturic haren dicipuluec, hassi ciren hari erraiten, *Quid pater iam times,* guré aita, eta guré nabusia, erraguçu, ceren veldur cira, Ermita saindiac errapuesta eman cian beré dicipuluer, *Semper in illo timore vixi.* Neuré haurrac, neuré dicipulu maitiac, egundanoz gueros veldur horequin bici içaniz, eta banoa veldur horequin.

Neuré adesquidia, saindubat herioaren veldurriā biciric, haren veldurra bihotcian hiltcen bada, cer eguinen dugu guc bekhatian guré bicia, eta guré dembora empleguatcen baitugu. Den othoy, biciā, eta hilian, herioaren veldurra çuré gogoan, bidé hontan ez salbatcecoz, non nahi cira salbatu ? goaçan aitcina bidé hontan dugun ikhussi onsa hilceco bidiaren ené azquen arraçoiña, bideco pena, eta fatigua, ezta gogor, dulcé, eta emé da, Iencoaren cerbutcian eta guré arimen prouetchuan hartcen denian.

× × × × × × × × × × × × × × × × ×
× × × × × × × × × × × × × × × × ×

[156]

# LAVR GARREN

*arrçoiña porogatceco, onsa hilceco*
*bidia, dela herioaz orhitcia.*

MEDAILLA behar dugu bertcé alderat itçuli, eta edirenen dugu herioac, balin badu beguitarte belça itchusia, terriblia eta icigarria aldé batetic, dian beçala, eta erakhussi dugun beçala hirur garre capitulian, bertcé aldetic badiala beguitartebat, ederra, onesta, eta maitagarria, eta oro consideraturic, herioa behardugula, ohoratu,

maitatu, eta haren veldurra vtciric a la part, Iencoaren borondatiaren pian, haren placera hala bada, haren orena gin dadinian, boztario, eta alegrantcia handirequi, hura recebitu.

Principalqui gendé pherestuec, Iencoaren cerbitçariac, Iencoaren veldurrian, eta haren amorioaren pian bici diren gendec, guehiago ocasioné duté alagueratceco, eciez tristetceco, herioaren aiphamenaz, eta haren gitiaz : hargati dio Propheta Royalac, *Prætiosa in conspectu Domini mors sanctorum eius,* Saindien hilcia valiosa, preciosa dela, alegranciaz, eta consolamenduz bethia dela, Iencoaren aitcinian. haur da ene azquen arraçoiña, eta diot, herioaren itchusmena, deformitatia, eta horriblé tarçuna dela causa, haren veldurrez nahi ezpaguira. harçatz orhitu, amens, amorioz berere, haren edermenac, ikhussiric eta harc guri emaiten dutian abantailes, eta prouetchuez orhituric, obligatu guirela haren veldurric ez vkheitera, haren maitatcera, harcatz orhitcera, nahi baguira onsa bici, onsa hil, eta salbatu. Psal. 113. [157]

Socrates Philosopha çuhurra egun batez interrogatu içan cen, cer moldez, eta formaz erresumabat, prouinciabat, herribat onsa, et hurosqui, guidatcen, regitcen eta gouernatcen ahal cen, errapuesta bertan eman cian, erresumabat huros, eta prospero içanen cela, gaixtoa onsa puniturie, eta honac, onsa recompensaturic, bici balira.

Guré Ienco honac beré forman muudu haur gobernatcen du, edo veldurrez, edo amorioz, nahi gutu gu oro salbatu, handiac, eta chipiac, hartacoz ere oro eguin eta creatu gutu, apostoliac errandu hargati, *Deus vult omnes homines saluos fieri,* nahidu Iencoac guiçon oro salba dadin, eguindu paradusia honen eta infernua gaixtoen ; eta ceren paradusia ecin ardiasten baitugu, bekhatu mortaler ihessi eguin gabé, eta haren manu saindiac beguiratu gabé, recompensu eternala proposatu du guré beguien aitcinian, celuco gloriaren edermenen, eta hanco delicia h andien esparançaz, eta desircundiaz, guré bihotcen beraganat ioan eraciteco, eta tiratceco : eta recompensiaren amorecatic, nahi ezpagundu deus eguin, amens ifernuco phenen, eta tormenten veldurrez, guré bekhatietaric, guré guibel eraciteco, eta haren borondaté saindiaren compli eraciteco, ifernia proposatu du guré beguien aitcinian, amorecatic edo veldurrez, edo amorioz guré arima gaichoac salba litçan iagoiticoz. Tim. 2

Eta ceren, ez phenen veldurra, ez recompensien amorioa ecin baituguegu herioaren, veldurra edo amorioa gabé, eguin dut eguin ahala, haren veldurrarē çuré bihotçarē barniā sar eraciteco, harē terrible tarçuna, eta horrible tarçuna çuri aitcineco capituliā eracussiric, orai, nahidut, Iencoarē socorria badut ber, ené trabaillu appurrari, beré conclusionaren, eta baré coroaren emaiteco, çuri erakhussi laur gar- [158]

ren, eta azquen capitulu hontan, herioaren edermenac, haren beguitarté ederra, eta maitagarria, eta hare guri orori, gu nor baguira, emaiten dutian auantailla handiac ikhussiric herioa dela, ororen gaixtoena aldé batetic, eta ororen hobena bertcé aldetic, haren veldurrez, edo amorioz, haren orhitmena, çuré gogotic eztadin iagoiti aparta.

Lehenic herioac sendotcen gutu, eta deliuratcen mundu hontaco, eritarçun, miseria, calamitaté orotaric mediçu barbarec, dembora appurbaten guré gorpitçat beré doloré, min, plaga, eta çaurietaric, sendotcen ditusté, mina eta doloria solaiatcen, arhintcen, baina arraz iagoiticoz, eçin diroté. Ezta mediçuric herioaren paré denic, harc orotaric iagoiticoz sendotcen gutu, eta guré minac arraz iagoiticoz chahatcen, eta akhaçatcen.

Guiçona, dio Iobec, amarē sabeletic ialquiz gueroz, arté laburrez, gaiçac, eta miseriac aldé orotaric inguru, inguru çahatcen du, cer-
Iob. 14 ratcen, eta vrichquitē *homo nat⁹ de muliere breui viuens tēpore repletur multis miserijs.* aurqui tristé da, guero alaguerra, aurqui osso, eta sendo, guero eri, eta flakho, behin hotz, guero bero, behin aberatz,
[159] guero paubré, eta miserablé, ardura cambiatcenda, ezta behin eré ohicoa : deusec eré ecin contenta diro, baina herioac, beré phena orotaric sendoturic, eta deliuraturic beré aisé handian eçartendu, hambatequi herioac guiçonari abantailla handiric, eta hontarçun handiric handiric emaitendu. Apostoliac baçaquian munduco miserien berri, eta herioac guri eguiten dian honquiaz, erran dianian, *Infelix homo, quis me liberabit à corpore mortis huius ?* Ala ni bainitz guiçon miserablia, norc ni delibratuco nu, gorpitz mortal hontaric ?

Ezta deus mundian, boteré dianic, herioa bera baici, guré delibratceco, munduco tribulationé corporal, eta demboraletaric. Hartacoz dio Apocalipsian, *Absterget Deus omnem lachrimam ab oculis sanctorum,*
Apoc. 19 *etiam non erit ampluis, neque luctus, neque clamor, neque neque dolor erit vltra.* Iencoac vchucatuco dutiala nigarrac oro beré saindien beguitaric, eztela içanen guehiago, hazperenic, cincoriric oihuric, doloreric, ez
Apoc. 7 desplaceric. Eta bertcé passaiebatetan dio, *Non esurient, neque sitient amplius, neque cadet super illos sol, neque vllus æstus.* Gossiac, ez egarriac eztitu guehiago ioren, ez hunquituré, beroac, ez hotçac eztitu haboro erreren, ez carrointaturen.

So eguiçu conbat abantailla, eta prouetchu herioac emaiten dian guiçonari, guiçona nor bada, iustoa bada, Iencoaren gratian herioac atrapa badeça ber, handira cinac, eta minac, handa pundia, *Aqui esta el punto.*

Dugun bada erran herioac guiçonari gratia eta cortesia eguiten diala, haren beguitartia, ederra dela, eta maitagarria, eta haren gitiac,

eztiala behar guiçon pherestua, Iecoaren cerbutçaria lotsatu, eta ikharatu, baina au contré alegueratu, eta consolatu. [160]

Segontian, herioa da anderé noblia, galanta, liberala, eta maitagarria, edequitendu guiçonari, eta emaztiari bat edo bigua, edo hirur, edo nahi bacira guehiago, baina, baten emaitendu ehun, biden mila, hiruren milionebat, eztaquit ceinbat, edequitēdu bicitcé corporala, eta dēborla, baina emaiten beré hala bicitcé spirituala, eta eternala, corporalac eztu comparationeric, spiritualarequin, ez demboralac, eternalarequin, a la baina, spirituala emaiten du coporalaren, eta eternala demboralaren, norc eztu erranen herioa delo anderé noblebat, eta liberalbat ?

Persona saindiarē eta iustoaren, mundu hontaco bicia honda, eta prouechutaco, ceren beré obrr honen medioz, Iencoaren gratian, eta amorioan haren meritia bethi goiti baitoa, et caritatian deno, meritia hala hala goratcen, eta auançatcen baita, cerē, *Charitac est radix, & principium merendi,* Caritatia baita meritu ororen çaiña eta hatzarria : baina ceinbat munduco bicia iustoaren hon baita, herioa hobeda, eta preciosago, biciac emanen dro meritu, baina ez recompensia, eta iustoac ezpadeca persevera, bere meritian, galducodu beré meritiaren valioa oro : Hobeda bada herioa iustoaren, eciez bicia, ceren herioac emaiten betrauco beré coroa, eta recompensia, iustoari. Hayatic cioian Apostoliac, *Mihi viuere Christus est, mori lucrum,* ene biçia Iesv-Christo Philip. 5
da, baina ene irabacia, eta ene auantailla handia da hilcia. Erran nahidu Apostoliac, mundu hontan, Iesusen gratian, biciteiaz, ohoré [161]
dut placer, consolationé eta esperança, baina hilcia ené hobeda, harc emanendraut neuré coroa, irabacia, eta recompensu handia, *mori lucrum.*

Maytaçalia, ezta bici bera baitan, baina bici da gauça maitatia baitan, ceren amorioac, maitaçalia eramaiten baitu, eta transformatcen gauça maitatia ganat.. Hala errandu Platonec, *Amans magis est in re amata, quàm in amante,* eta nola Apostoliac maité baitcian Iesv-Christo, eta Iesv Christoc Apostolia, Iesv-Christo biciçen Apostolian, eta Apostolia Iesv-Christo baitan, ceren batac bercia, bereganat, amorioac tiratcen eta arrapatcen baitcian. Aithormen eta coffessione hura eguin du Apostoliac berac, *Viuo autem iam non ego, viuit verò in me Christus,* Galat. 2
eniz ni bici, baina Iesvs ené Iauna bicida nitan, Erran nahidu Apostoliac, Iesusec arrapatu du ené arima, ené bihotça, ené borondatia beraganat, nic harganat dudan amorio saindia dela causa, eta nic hala hala Iesusen bihotça tiratudut nehaurganat, harc niganat dian amorioa, eta gratia dela causa, halatan Iesvs bici da nitan, eta ni, Iesusetan.

Bacian bada bacian Apostoliac ohoreric asqui, esperança, eta consolationé franco, Iesvs-Christo Iaunaren gratian, içatiaz, harequin

